

EGILEA:
**Ekaitz Sirvent Auzmendi**
1979
Zarautz

Atxilotze data: 2009ko apirilaren 10a.



Centre Pénitentiaire Tarascon
Quart. Radoubs
Chemin Départemental 122
B.P. 82
13155 Tarascon Cédex



AZALEKO IRUDIA:
**Joseba Galarraga Arrona**
1959
Deba

Atxilotze data: 1999ko uztailaren 7a.



Prisión Provincial Valladolid
Ctra. Adanero - Gijon, km. 94
47011 Villanubla
Valladolid

**www.literaturakoadernoak.org**

---





ISBN: 978-84-942777-2-6
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL: SS 1392-2014

“Long Walk to Freedom”, 1995ean argitaratua izan zen, baina Nelson Mandela 1974ean hasi zen berau idazten. Ezkutuan, Robben Irlako espetxean preso zutelarik. *Mandibaren* autobiografia honetan bere gaztaroa, askatasunaren aldeko borroka eta espetxean igarotako 27 urteak aurki ditzakegu. Esku artean duzun itzulpen hau, autobiografiako “Robben Island: The Dark Years” atalari dagokio. Urte Ilunak beraz, historiak agerian utzi digun bezalaxe Argi Urte bilakatuko ziren urteak. Iluntasunaren ataltxo bat gure esku, gaur egun, Euskal Herrian, espetxean ditugun lagunek bizi dutenaren isla. (Gure) Argi Urteei begira.

# HITZAURREA

## Zertaz ari gara, espetxea eta sorkuntzaz ari garenean?

"*Seacliffeko ospitalean eman nituen sei asteak, zoramenaren izugarrikeriaren ikasgai laburtu bat izan ziren. Inoiz izango zenik ere uste ez nuen leku hartan igarotako lehen uneetatik jakin nuen ezingo nintzela itzuli nire usuko bizitzara, ezingo nuela ahaztu ikusitakoa. Beste eraikin batzuetan bakartutako jendeak ez zuen izenik, ez iraganik, ez etorkizunik, giltzapetutako oraina besterik. Orain-lur betierekoa, ortzemugarik gabea*".

Janet Paterson Frame idazle zeelandaberritarraren hitzok, espetxeratu berritan, oso ohiko sentimenduak islatzen dituzte. "*Baina zer da izugarrikeria hau?*", "*Nola liteke hain jendarte garatua omen den honetan, tamainako krudelkeria instituzionalizatua existitzea?*". Kanpoan dagoenak enpatia senti dezake eta sinpatiaz jokatu, presoaren hurbilekoek espetxearen ondorioak sufritzen dituzte eta hala ere giltzaperatuaren pairamena oso esperientzia intimoa da, hain zuzen norbere intimitatea baita bertan urratzen dena.

Seacliffeko ospitalea bezainbat Robben irla izan zitekeen, La Santé edo Soto del Real, Martutene zein Basauriko espetxeak ahantzi gabe. Sufrimenduaren alimaleko monumentuak denak, hiri erdian batzuetan, jende multzoen periferian bestetan eta hala ere, gure kontzientziei pega-pega eginda beti, kaletarron sudurpean. Gaiaren inguruan dagoen ezjakintasunaz jabetuta, espetxean dagoen sortzailearen lehen bulkada izan

daiteke, "*Hau, min guzti hau, kontatu beharra dago*". Hain justu, edozein sorkuntza lan zer edo zer kontatzeko behar batean oinarritzen dela esan liteke, zerbait adierazteko behar gorria, erraietan dugun zera kanporatu ezean ezinegona lehenik eta itolarria gero sentitzerainokoa. Espetxea inguratzen duten murruek, beste zio esplizituez gain (itxi, hertsi, hesitu), barrutik kanporakoaz gain, kanpotik barrurako norabidean betetzen dute beren funtzioa. Murruok, ihesaldiak ekiditeko bezainbat, barruko izugarrikeria ezkutatzeko eraikiak ere baitira.

Horrela beraz, espetxe barrutik egiten den oihu bakoitza, idatzia barne, murruan arrakala bihur liteke eta berau ez da, zenbait kasutan, askok pentsa lezaketen maneran, bertatik ihes egiteko, baina kanpokoari barrukoa erakusteko.

Espetxearen inguruko hamaika liburu, idazki edo sormen lan aurki litezke (esku artean duzun hau adibide), eta azaltzen diren esperientziak bata bestearen oihartzunak dira. Elkarren artean mende beteko aldea izan arren irudi bertsuak aurki ditzakegu sarritan (absentzia, espazio txikiaren estutasuna, bakardadea,...). Baina arestian esan bezala, espetxeak oso maila intimoan urratzen du giltzapean daukana eta hala luma hartzen duen presoak, aldiro zera pentsa lezake: "*Espetxeaz, beste batzuek idatzi dute baina ez nik*".

Janet Paterson aipatu dugu hasieran eta itzul gaitezen harengana, bera ez zuten espetxeratu, ospitalean ingresatu baizik. Berrogeita hamarreko hamarkada aldera izaeraren desorekak elektroshock kolpeka osatu zitezkeela uste zen. Janet Pater-

sonen amak alaba lobotomia bidez zentzatzea espero zuen, baina buru ebakuntzaren zain zegoela, Janetek ezkutuan idatzitako *Lagoon* liburuak Zeelanda Berriko literatur sari nagusia, Hubert Churh Memorial Prizea, irabazi eta buru garbiketatik libratu zen. Idatzitako hitz bakoitzak heriotza mentaletik urrundu zuen, ebakuntzaren (eta amaren erabakiaren!) aurka erlojupeko lasterketan buru garbiketatik libratzeko bide bakarra: idaztea.

## Espetxeko itzulpengintza

*"Bizitza errepikakorra da espetxean: egun bakoitza aurrekoaren neurrikoa, besterik ezean hilabeteak eta urteak nahasten amaitzeraino. Asperdura apurtzen duen orok urduri jartzen ditu arduradunak eta, horrela, errutina horixe izaten da kartzela bat behar bezala gobernatua dagoenaren seinale hoberena".*

Errutina, Mandelak dioen bezala, instituzioan harrapatua dagoenaren menderatze teknika bezala. Patioa, ziega, patioa, ziega, bisita, patioa, ziega… Aldian aldiro familia-lagunekin izaten diren ikustaldiez gain, deus gutxi dauka presoak, denbora etengabe xehatzen dion errotarriari galga jarri ahal izateko. Nola hautsi beraz zirkulu hau? Instituzioaren errutina zapaltzaileari gainjarriko zaion errutina propio askatzailea eraikitzerik ba ote?

Ekaitz Sirventen eskutik jaso dugun itzulpen lan hau izan daiteke aukera bat. Instituzioarena baino norberarena den den-

bora kudeaketa propioa, beste preso batek, Nelson Mandelak kasurako, bere espetxe esperientziaz egindako hitzak euskaratuz.

Itzulpena, gainontzeko sorkuntza lan eta bideak bezalaxe, espetxearen baitan denbora kudeatzeko baliabide alternatibo bat izateaz gain, erronka potolo bat ere bada. Bobby Sands-ek ipurtzuloan ezkutatua zuen axota batekin, komuneko paperean, idatzi zuen *Egun bat nire bizitzan* kronika latza. Euskal presoek izarak hautsiz eraikitzen dituzte beraien mihiseak. Ikatz zatitxoekin, hatzak erabiliz, bizar labainaren aiztoarekin… eskuratu ditzaketen baliabide urriekin alegia, sortzeko ukazioari nolabait aurre egiten diote.

Ekaitzen erronka, bide horretatik joan da, itzultzaile batek ohiko kasuetan beharko lituzkeen trepetak faltan burutu du lana. Auto-ikaskuntzatik asko duen bidaia. Itzultzaile batek beharko lituzkeen bidaideekin hartu eman zuzenik izan gabe. Perpausak behar bezala idaztetik haratago, nola interpretatu beste herrialde eta garai batetatik jasotzen diren esapideak? "*Preso arrunta*"ri, *arrunta* deitzea hautu bat da, borroka armatuaren bidea hartu duen horri *gudari* deitu ala ez hautu bat den bezalaxe. Biak ala biak, aukera ideologikoak inondik ere. Antzeko zalantza dantzan irudika dezakegu Ekaitz, norekin partekatu baina gisa honetako galderak?

Horrelako atakatik ateratzeko bide argirik gabe, kanpoarekiko urruntasunak ezaugarritzen du kartzela. Aspaldi, olerkariak esan bezala, bi punturen arteko distantziarik laburrena, lerro zuzena, ezagun dugu. Baina bi punturen arteko distantzia lu-

zeena zein den neurtzeko, tartean espetxe-instituzioa kokatu eta erantzunaren zantzu batzuk ikusi ahal izango ditugu. Banaketa espazio neurgaitz hori, nolabait, laburtu du Ekaitzek. Mandelaren espetxealdia gure eskuetan ezarriz, Ekaitzen beraren espetxealdia gure esku ezartzeko. Ispilu joko bat, eta ertz batean gu geu, ikusle bezain partaide.

Gu. N.Mandela 466/64 - E.Sirvent 11431

*Ataramiñe. 2014ko udazkena*

# – 1 –

Gauerdia zen eta begiak sabaian itzarrik jarraitzen nuen –epaiketako irudiak oraindik biraka–, ibilguan urratsak entzun nituenean. Nire kideengandik urrun giltzapetu ninduten. Atean jo zutenean, burdin hesien artetik, Aucamp koronelaren aurpegia ikusi nuen. "Mandela", zuzendu zitzaidan marranta antzeko marmarraz: "esna zaude?".

Baietz, nik. "Zorteko zara", jarraitu zuen, "aske izan ahalko duzun lekura eramango zaitugu. Murru grisak bakarrik ez, itsasoaren eta zeruaren ikusmiraz ere gozatu ahalko duzu."

Ez nuen xaxatu nahi izan, ondo baino hobeto bainekien aipatu lekuak ez zidana faltan nuen askatasunaz gozatzeko aukerarik eskainiko. Jarraian, uzkur, amaitu zuen: "Arazorik sortu ezean, nahi beste izango duzu".

Ziega berean giltzapetuta zituzten gainerako lauak esnatu zituen jarraian Aucampek. Euren puskak paketatzeko agindu zien hauei. Hamabost minutura, amaieran aterik ez zuela zirudien Pretoriako kartzelaren altzairuzko labirintoa zeharkatu genuen, metalezko atesailen burrunbak gure belarrietan oihartzun egiten zuela.

Kanpoan, zazpiok, –Walter, Raymond, Govan, Kathy, Andrew, Elias eta zazpiok– bilurrekin lotu eta polizia furgoiaren atzeko aldean sartu gintuzten. Gauerdia jada iragana izan arren, artean nekeak errenditu gabe jarraitzen genuen. Hauts zoruan eserita, abestiak kantatu eta epaiketaren azken uneak gogoratu genituen. Zaindariek *sandwich*ak eta edari hotzak eman zizkiguten eta Van Wyck tenientea

furgoiaren atzealdean sartu zen gurekin; pertsona atsegina zen, eta abestitik abestirako atseden-une batean gure etorkizunaz bere iritzia luzatu zigun –inork eskatu ez zion arren–. “Beno”, esan zuen, “ez duzue denbora askorik egingo kartzelan. Zuen askatasunaren aldeko presioa indartsuegia da. Urte bat edo biren buruan kalean izango zarete. Herriko seme izendatuko zaituztete. Aupaka, oro lagun, emakumeak jarraika... Arraioa, irabazi egingo duzue”. Bere hitzak aipamenik txikiena egin gabe entzun genituen. Aitor dut hitzaldiak nabarmen adoretu ninduela, baina, zoritxarrez, ia hiru hamarkada behar izan genituen profezia bizitzeko.

Polizia segizio handiaren ezohiko erakustaldia lekuko bakar, isilka eraman gintuzten gauaren erdian. Ordu erdia egin aurretik aldirietako aerodromo militar txiki batean geunden. Garraio militarrerako baliatzen zuten tamaina handiko Dakota zaharkitu batean sartu gintuzten. Ez zuen berogailurik eta aeroplanoaren gilborrean dardaraka egin genuen bidaia. Nire kideetako zenbait inoiz hegan egin gabeak ziren, eta ikaratuagoak ziruditen bidaia hegazkinez egin beharraren ideiagatik, gure patuagatik baino. Murru altuen atzeko ziega batean hertsiak egoteari baino askoz ere arriskutsuagoa irizten zioten bost mila metroko altueran hegazkin baten barnean gora eta behera zabuka egoteari.

Ordubeteren lainoan, egunsentiarekin, gure azpiko lursailak piztu egin ziren. Hegazkinak atetilak zituen eta, argi jabalduan zerbait ikusi ahal izan genuenean, nire kideek sudurra leiarrera itsatsi zuten. Hego-ekialdera gindoazen Orangeko Estatu Librearen ordoki idorra eta Lurmuturreko penintsula berde eta menditsua gaindituta. Leihatilatik begiratzeko lepoa luzatu nuen neuk ere, begien aurrean nuena turista batek inoiz egingo ez lukeen gisara aztertuz: gerrillari armada bat ezkutatzeko zonalde egokiak bilatu asmo nituen.

MK (Umkhonto we Sizweren) sortuz gero, sarritan eztabaidatu genuen Hegoafrikako lurraldea gerrillari gudaroste batentzat eremu egokia zenentz; erakundearen agintaritza goreneko gehienen ustez ez zituen gutxieneko ezaugarriak betetzen. Matroosberg izeneko Lurmuturreko eremu basotsu eta menditsuaren gainetik igaro ginenean, oihu egin nien kideei, azpikoa borroka abiarazteko kokagune egokia iruditu zitzaidalako. Asaldatuta, beren beregiz ikusi nahian, lepoa luzatu zuten. Izan ere, eremu hark, bere baso gotorrekin, etorkizuneko gerrillari armada bati babesa emateko egokia zirudien.

Berandu gabe Lurmutur Hiriko inguraldera hurbildu ginen. Ez genuen askorik behar izan Cape Flatseko pospolo kaxen antzerakoak ziren *townships*etako etxe txikiak, eta handik, hiri erdiguneko etxe-orratz argitsuak, eta azkenean, Table mendiaren gailur zeharra, ikusteko. Gutxira, Table badiaren ur urdin-ilunetan, Atlantikoan, behe-laino artetik, Robben irlaren soslaia atzeman genuen.

Irlaren hegaletako batean zegoen lurrartze pistan jaitsiarazi gintuzten. Zeru sabaia hodeizkoa zen, eguraldia zakarra, eta hegazkinetik jaistean neguko haize hotzak gure kartzela-uniformeen oihal meharra zeharkatzen zuen. Zaindariek fusil automatikoekin armatuta eman ziguten ongi etorria. Bi urte lehenago irlan izan nindutenean egin zidaten harrera zaratatsuarekin alderatuta, zurrun hartu gintuzten oraingoan.

Kartzela zaharreraino eskoltan zelatatu gintuzten. Hau harrizko eraikin isolatu bat zen eta berton barneratu aurretik eranzteko agindu ziguten. Espetxe bizitzako ohiko umiliazio erritualetako bat biluzaraztea izaten da: kartzela batetik bestera lekualdatzean, uniforme zaharra beste berri batengatik ordezkatzeko presoa biluztera behartzen dute. Hezur eta haragi besterik ez geundela Robben irlako uniforme kakiak jaurti zizkiguten.

*Apartheid*ak ezarritako legediak arroparen nolakoa ere arautzen zuen. Gu guztioi, Kathyri izan ezik, praka labur batzuk eta olanezko jaka eta jertse arin bana eman zizkiguten. Kathyk, indigena izaki, praka luzeak izan zitzakeen. Oro har, afrikarrei pneumatiko txatalez eginiko sandaliak egokitu arren, oraingoan, salbuespen gisara, zapatak eman zizkiguten; galtzerdiak, baina, Kathyk besterik ez zituen jaso. Praka laburrek, afrikarroi, "mutikoak" ginela oroitarazten ziguten. Egun hartan praka labur haiek jantzi jantzi nituen, baina neure buruari ez nituela luzaroan izango zin egin nion.

Bidea armekin zehazten eta aginduak, garrasika, gehiegizko laburtasunez ematen zizkiguten zaindariek: "Abian!" "Isiltasuna!" "Gelditu!". Ez gintuzten nire aurreko egonalditik gogoan dudan doinu harroxkoan mehatxatzen. Orain ez zuten inolako emoziorik azaleratzen.

Behin-behineko ostatua izan zen kartzela zaharra. Agintariak preso politikoentzat segurtasun goreneko egitasmo independente bati azken ukituak ematen ari ziren. Han izan gintuzten bitartean ez ziguten ez kanpora irteteko, ez eta bestelako presoekin harremanik txikiena izateko baimenik eman.

Laugarren goizean, bilurrak jarri, eta kartzelaren barneko beste kartzela batetara eraman gintuzten kamioi batean. Egitura berria pisu bakarreko harrizko gotorleku angeluzuzen bat zen: erdigunean 35x10 metroko patioa zuen eta lau aldetatik hirutan ziegek inguratzen zituen. Laugarren aldea zazpi metroko altuerako horma bat zen, eta presozainek, artzain-txakur alemaniarrez lagunduta, karrajutik zelatatzen zituzten.

A, B eta C izendatu zituzten hiru ziega sailak. Gu ekialdeko aldean, B sailean, itxi gintuzten. Korridore luze baten bi alboetan banako

ziegak esleitu zizkiguten. Leihoen erdiek patiora ematen zuten. Guztira hogeita hamar bat ziega izango ziren eta banako ziegetan itxitako presoak, aldiz, hogeita lau. Ziega bakoitzak burdin hesiz babesturiko metro koadro bat edo gutxiagoko leihotxo bana zuen. Gelaxkak bi ate zituen: bata barnekoa, metalezko saretxo eta burdin hesiz estalia, eta bestea kanpokoa, egurrezkoa. Egunez barneko atea besterik ez zen ixten; gauez zurezko atea ere galgatzen genuen.

Ziegak presaka eraiki zituztenez, hormak hezeak zeuden oraindik. Arrazoi hori oinarri hartuta kartzelako komandante buruari kexua luzatu nion. Hezetasun hori gure gorputzek xurgatu behar zutela erantzun zidan. Bakoitzari ia gardenak ziruditen hiru manta fin eta higatu eman zizkiguten. Lotarako pita edo lastozko lastaira bana baino ez genuen. Aurrerago feldrozko lastaira bat eman ziguten, eta hau pitazkoaren gainean jartzen genuen, lurra bera baino arin eta bigunagoa zen zerbaiten gainean lo egin ahal izan genezan. Urteko sasoi hartan hainbesteko hotza egiten zuen ziegetan, eta estalkiek hain babes txikia ematen zuten, goitik behera jantzita egin ohi genuela lo.

Korridorearen hasieran zegoen eta hiru pausotan zeharka nezakeen ziega bat esleitu zidaten. Begien altueran patiora ematen zuen leiho txiki estu bat zuen. Oheratzean, oinekin horma bat eta, aldi berean, buruarekin beste hormaren igeltsua ukitzen nuen. Ziegak bi metroko zabalera zuen, eta hormek, gutxienez, 60 zentimetroko lodiera zuten. Ziega bakoitzaren atean egoiliarraren izena eta zenbakia nabarmen erakusten zuten txartel zuriak jarri zituzten. Nireak "N Mandela 466/64" zioen; esan nahi baita, 466. presoa nintzela eta irlan 1964. urtean itxi nindutela. 46 urte nituen eta bizi arteko kartzela zigorra zuen preso politiko bat nintzen; barrunbe mehar hura bizilekutzat noiz arte izango nuen jainkoak besterik ez zekien.

Jarraian, B galeriatik urrun ez zegoen adreiluzko eraikin zapal batetik, arrunten sailean zegoen preso multzo bat batu zitzaigun. Arrunten saila F eta G galeriek osatzen zuten, eta milaren bat preso inguru hartzen zituen, gehienak arruntak, haien laurdenak, gu bezala, preso politikoak izan arren. Haietako multzo bat B sailera lekualdatu eta elkarrekin itxi gintuzten. Bi arrazoigatik mantentzen gintuzten preso arruntengandik aldenduta: arriskutsuak ginen segurtasun ikuspegitik, baina are arriskutsuagoak ginen ikuspegi ideologikotik; eta gure jarrera politikoa gainerako presoei ez "kutsatzea" zen kartzela-agintarien kezka nagusietako bat.

Gurekin itxi berri zituztenen artean zegoen George Peake -SACPO Hegoafrikako Herri Mestizoaren Erakundeko sortzaileetako bat-. Traizioagatik salatu zuten eta, berrikitan, Lurmutur Hiriko udal-kontseiluko kide izana zen. Hiri hartako presondegi baten kanpoaldean lehergailuak jartzeagatik zigortu zuten. Dennis Brutus, Port Elizabetheko beste ekintzaile politiko mestizo bat, ere gurekin zen. Poeta eta idazlea zen eta debeku agindua hausteagatik espetxeratu zuten. Billy Nair ere batu zitzaigun: Nataleko Indiar Kongresuko militante ohia eta Umkhonto we Sizweko kidea. Azken hau sabotajeak egiteagatik zigortu zuten.

Egun gutxira kide gehiago batu zitzaizkigun. Neville Alexander, adibidez. NEUMeko (Ez-Europarren Batasunerako Mugimendua) kide intelektual mestizo ezaguna zen eta gure mugimenduarekin senidetuta zegoen eta Lurmuturrean gerrilla gerrak ikertzen zituen Yu Txi Txan Klub izeneko erakunde erradikal ñimiño bat sortu zuen. Neville letretan lizentziatu zen Tubingeneko unibertsitate alemaniarrean. Nevillez gainera Fikile Bam ere gurekin itxi zuten: hau Lurmutur Hiriko Unibertsitateko zuzenbide ikaslea eta Yu Txi Txan Klubeko partaidea zen. Zephania Mothopeng ere gutartean

zen: PAC Kongresu Pan-Afrikanistaren gobernu nazionaleko kidea zen hau. Zeph irakasle izana zen Orlandon, eta Hezkuntza Bantuaren legearen aurkari sutsua zen, PACeko buruzagi adimentsuenetako bat izateaz gainera. Azkenik, gurekin barrutu zituzten Transkein "autogobernuaren" arduradun bihurtu zen K.D. Matanzima hiltzeko konspirazioagatik zigortutako adineko hiru nekazari ere.

Horrela antolatu zen hogeiren bat presok osaturiko gure gunea. Horietako batzuk ezagutzen nituen; beste batzuk, aldiz, ez nituen bizian ikusi. Kartzelan jai une bakanetakoa, lagun zaharren bat topatu edo berriren bat egiten duzunekoa izaten da. Lehen aste haietan, alabaina, giroa hain hertsagarria izan zen, ezin izan geniola elkarri diosalik ere egin. Preso adina zaindari zeuden, eta hauek, mehatxu eta beldurraren bidez, kartzela-arau barregarriena ere inposatu egiten ziguten.

* * *

Lehen aste hartan bertan ekin genion hurrengo hilabetetako ia ordu guztiak jango zizkigun beharrari. Goizero, kamioi batek, boleibol piloten tamainako harrizko zama patioaren sarreran utzi eta hauek eskorgarekin etxartearen erdigunera eramaten genituen. Bi kiloko mailutzarrak edo, neurri handiagoko harrientzat zazpi kilokoak, ematen zizkiguten gero. Harriak legartzeko agindua jaso genuen. Metro eta erdiko aldearekin lau ilaretan sailkatzen gintuzten eta zangoak gurutzatuta lurrean esertzen ginen. Bakoitzari pneumatiko txatalez eginiko kautxuzko eraztun lodi bana ematen ziguten harriak kokatzeko. Eraztunok harrizko printzak gelditu egingo zituztela suposatzen zen; praktikan, baina, ez zuten ezertarako balio. Metalezko oihal lakarrak erabili behar izaten genituen begiak babesteko.

Kartzelariek gure artean isiltasuna egiteko helburua zuten. Lehen astetan, kaiolatutako animalia exotikoen bilduma bagina legez, beste sail eta kartzelatako zaindariak gu ikustera hurbiltzen ziren. Lana gogaikarri eta nekagarria zen; eta, guztiarekin, gihar guztiak mintzeko bezainbestekoa izan arren, ez zen epeletan arnas hartzeko beste gogorra.

Robben irlan hilabeterik zakarrenak ekaina eta uztaila izaten ziren; negua airean hautematen  zen eta eurite sasoia gehitu behar izaten zitzaion horri. Tenperaturak ez zituen lau gradu zentigraduak gainditzen eta eguzkitan ere dar-dar egiten nuen nire kaki alkandora meharraren azpian. Orduan ulertu nuen, lehen aldiz, "hezurretaraino izoztu" esamoldearen esanahia. Eguerdian atsedenaldia izaten genuen bazkaltzeko; lehen aste hartan sekulako kiratsa zuen zopa bat besterik ez ziguten eman. Arratsetan, patioan, zaindarien begiradapean, ordu erdiz ariketa fisikoak egiteko baimena eman ziguten. Urrats bizian patioari biraka aritzen ginen, elkarren segidan.

Haitzak birrintzen igaro genuen lehen egunetako batean, zaindari batek harri xehez beteriko eskorga sarreraren alboan geldirik zegoen kamioira garraiatzeko agindu zion Kathyri. Hau ez zegoen behar fisiko gogorretara egina eta ez zen eskorga mugitzeko gai. Espetxezainak oihuka zuzendu zitzaizkion: "*Laat daardie kruiva loop!"* (Ea esku-gurdi hori mugitzen den!). Kathyk eskorga apur bat mugitu zuenean irauli egingo zitzaiola iruditu zitzaigun guztioi, eta zaindariek barre egin zuten. Trufarako arrazoirik ez ematearren, Kathy egin ahalak egiten ikusi nuen. Ni eskorga maneiatzen trebea nintzenez laguntzeko prest zutitu nintzen. Esertzeko agindu aurretik, indarra ez eta gakoa oreka zelako, Kathyri geldiro mugi zezala esatea lortu nuen. Buruarekin baietz eginda patioaren mutur batetik bestera garraiatu zuen esku-gurdia, zaindarien irria etenez.

Biharamunean, kartzelako arduradunek upel erraldoi bat ipini zuten patioan. Asteburua heldu aurretik erdi beteta behar zuela manatu ziguten. Beltz egin genuen lan lortu arte. Zaindarien arduradunak hurrengo astean upelaren hiru laurdenak bete beharko genituela jakinarazi zigun. Arta handiz lan eginda lortu genuen hori ere. Handik eta hurrengoan goraino betetzea agindu ziguten. Ondo baino hobeto genekien jokamolde hau ezin genuela askoz denbora gehiagoz onartu, baina ez genuen ezertxo ere esan. Upela guztiz bete arren, zaindariak zirika ari zitzaizkigula uste genuen. Ahopeka, ekimena hartzea adostu genuen: ez genuen kuotarik onartuko. Horrela, hurrengo astean irlako ekoizpen baxuko lehen grebari ekin genion. Ohiko erritmoaren erdira lan egitea erabaki genuen, eskakizun haien kontrako protesta gisara. Zaindariak berehala ohartu ziren eta zemai egin ziguten; uko egin genion ordea, biziago lan egiteari. Patioan lan egin behar izan genuen denbora tartean erritmo baxuko estrategia bera azkeneraino mantendu genuen.

Robben irla eraldatuta zegoen, 1962an, hamabost egunez, bertan itxi nindutenetik. Sasoi hartan preso gutxi hartzen zituen, eta esperimentu eremua zirudien, presondegia baino. Bi urte geroago, irla, ezbairik gabe, Hegoafrikako espetxe sistema osoko kartzelarik anker eta errepresiboena bihurtu zen. Neke iturri zen presoentzat ez ezik kartzela funtzionario guztientzat ere. Orduan zigarretekin ulermena eskaintzen ziguten zaindari mestizoak jada ez zeuden. Orain presozain oro zuria zen, gehiengoak *afrikaans* hitz egiten zuen eta jabe-jopu harremana inposatzen ziguten. Eurei *baas* (nagusi) deitzeko agindu ziguten. Gu ukatu egin ginen. Arraza-banaketa erabatekoa zen Robben irlan: ez zegoen ez zaindari beltzik ez eta preso zuririk ere.

Kartzela batetik besterako lekualdaketak presoaren aldetik egokitzapen bat eskatzen du beti, baina Robben irlara ailegatzea beste herrialde batetara heltzearen modukoa zen. Bere isolamenduak, presondegi ezberdin ez ezik, gentozenaren aldean oso urrun zegoen mundu arrotz ere bilakarazten zuen. Pretoria hiriko kartzelatik atera ginenean genuen adorea hutsaldu egin zitzaigun irlako giroaren zakartasunaren aurrean. Gure bizitza erremedio gabe hits eta laiotza izango zenaren sentipenari kontra egin beharko genion. Pretorian geure jarraitzaile eta senideekin harremana genuen bitartean, irlan isolatuta sentitzen ginen. Izan ere, hala zen. Presook elkarrekin egotearen kontsolamendua genuen, baina horixe besterik ez. Hala eta guztiz ere, nire uzkurdura, berehala, guretzat borroka berri eta ezberdin bat hasten zelako ziurtasunagatik ordezkatu nuen.

Lehen egunetik bertatik nire kexua agertu nien galtza laburrak erabiltzera behartzen gintuztelako. Zentzu horretan, kartzelako zuzendariarekin bilera bat galdegin nuen gure eskarien zerrenda aurkezteko. Zaindariek nire arrangurei bizkarra ematen zieten, bigarren astearen amaiera aldera, nire ziegan, batere zeremoniarik gabe, galtza kaki luze batzuk aurkitu nituen arte. Mila arraiako hiru ataldun traje batek ere ez nindukeen hala gogobeteko. Jantzi aurretik, nire burkideei ere galtza luzeak eman ote zizkieten egiaztatzea erabaki nuen.

Horrela izan ez zenez, neureak eraman zitzala eskatu nion zaindariari. Preso afrikar guztiek galtza luzeak eduki behar zituztela erabaki nuen. *"Mandela, galtza luzeak nahi dituzula esanez zuzentzen zara gugana, eta ematen dizkizugunean, ez dituzula nahi erantzuten diguzu"*, esan zidan zaindariak, beltz batek erabilitako galtzak ukitzeari

uko eginez. Presondegiko komandante burua etorri zen galtzen bila ziegara: *"Oso ongi Mandela, gainerakoen arropa berbera izango duzu"*. Zergatik ez duzu gainerakoekin ere modu berean jokatzen -galdetu nion-, niri galtza luzeak emateko prest bazaude? Ez zidan erantzunik itzuli.

## – 2 –

Bigarren astean, biharamunean Bram Fischer eta Joel Joffe abokatuen bisita izango genuela jakinarazi ziguten. Unea heltzean, zaindariek bisita-eremura eskoltatu gintuzten. Bisitak asmo bikoitza zuen: irlara nola egokitu ginen jakitea eta helegitea aurkezteari uko egiten jarraitzen geniola egiaztatzea. Elkar ikusi genuen azken alditik aste batzuk besterik ez ziren igaro, eta hala ere, ikustaldi hura beste mundu batetik bisita jasotzearen modukoa izan zen.

Gela huts batean eserrarazi gintuzten. Atearen ondoan elkarrizketa zelatatzen zuen maior bat genuen. Abokatuak besarkatzeko gogoz egon arren, ofizialaren presentziak uzkurtu egin ninduen. Ondo geundela eta orduko arrazoi berberengatik helegitea aurkeztearen aurka jarraitzen genuela azaldu nien. Arrazoi haiez gainera, ez genuen helegitearen aurkezpena ANCko (Afrikako Kongresu Nazionala) gainerako akusatuen auziekin nahasterik nahi. Jakin banekien Bramek helegitea aurkeztearen ideiarekin tematuta jarraitzen zuen eta, ondorioz, etsipenez hartu zuten erantzuna.

Elkarrizketaren amaieran Brami, Mollyz, bere emazteaz, galdetu nion. Emaztearen izena aipatu orduko, zutitu eta elkarrizketa-gelatik modu zakarrean egin zuen alde. Minutu gutxira atzera bere neurrira egina itzuli zen. Utzitako lekuan hartu genuen elkarrizketa, baina aipatu galderari erantzunik eman gabe.

Aurrez aurrekoa amaituta maiorrarekin ziegarantz nindoala, honek *"Fischerren jarrerak ezustean harrapatu zaitu, ezta, Mandela?"*, galdetu zidan. Baietz erantzun nion. Molly iragan berri zen astean auto-

istripuan hil zela bota zidan orduan: Bramek errepidean zegoen animalia bati izkin egiteko bolante-kolpe bat eman zuela eta autoa ibaira amildu zela. Molly ito egin ei zen.

Abailduta utzi gintuen albisteak. Aurreiritzirik gabeko emakume miragarri eta eskuzabala zen Molly. Irudika zitekeena baino gehiago babestu zuen Bram. Emazte, lagun, burkide izan zuen. Bramek beste nahigabe bat zeraman berekin: semea, diabetikoa zena, nerabezaro gozoenean hil zen.

Bere emazteagatik galdetzean ihes egitea Bramen izaeraren adibide besterik ez zen. Estoikoa zen, ez zituen, inoiz, bere nahigabe eta arazoekin lagunak zamatzen. Kontzientziak bere oinordetza gaitzestera eta bere jendearen aldetik isolamendua jasatera behartu zuen, afrikaner gisara, parekorik ez zuen kuraia eta sakrifiziorako gaitasuna erakutsiz. Nik, bere ondoan, injustiziaren aurka borrokatzen nuen soilik; nik ez nuen, Bramek bezala, neure jendearen aurka ere egiten.

Kartzelako komandanteari Brami dolu-gutun bat idazteko nuen asmoa jakinarazi nion. Honek baimena eman zidan. Posta-trukea arautzen zuten legeak oso zorrotzak ziren: senide zuzenei soilik idatz geniezaiekeen, eta kasuan ere, sei hilean behin bostehun hitz gainditzen ez zituen gutun bakarra. Hori ezagututa, Brami idazteko baimena eman izanak onerako harritu ninduen. Komandantea ez zen bere hitzaren neurrira egon ordea: gutuna idatzi eta eman nion, baina honek inoiz ez zuen bidali.

Hilabete batzuen buruan kartzelako bizitza errutina hutsa zen. Bizitza errepikakorra da espetxean: egun bakoitza aurrekoaren neurrikoa, besterik ezean hilabeteak eta urteak nahasten amaitzeraino.

Asperdura apurtzen duen orok urduri jartzen ditu arduradunak eta, horrela, errutina horixe izaten da kartzela bat behar bezala gobernatua dagoenaren seinale hoberena.

Egunerokotasuna suspergarri bezain tranpatia izan daiteke presoarentzat ordea. Erlojuak, eskuturrekoak eta bestelakoak, debekatuta zeuden irlan. Inoiz ez genekien zehaztasunez ze ordutan bizi ginen eta kanpai eta presozainen txilibitu eta oihuen menpeko ginen erabat. Aste bakoitza aurrekoaren berdina denean, beharrezkoa izaten da hileko zein egunetan bizi zaren oroitzeko ahalegina egitea. Hori horrela, lehen egunetan nire ziegako horman egutegi bat marraztu nuen. Denboraren zentzua galtzea norberaren gaineko kontrola galtzeko lehen pausua zela sinesten nuen.

Presoarentzat denbora gelditu egiten da; egunak ez dira amaitzen. Eternitatearen topikoa aisiarekin eta jarduera ezarekin lotu izan da, baina ez zen hau Robben irlako kasua. Edozertan izaten gintuzten ia etenik gabe: lan egiten, ikasten, eztabaidatzen, istiluak konpontzen. Hala eta guztiz ere, denbora glaziar bat bezain motela zen. Hau, neurri batean, kanpoan ordu edo egun batzuetan askatu daitezkeen gaiak argitzeko, kartzelan hilabeteak edo urteak behar dituzulako izaten da. Adibidez, hortzetako eskuila berri bat eskuratzeko sei hilabetetik urtebetera itxaron behar izaten genuen. Ahmed Kathradak behiala esan bezala, kartzelan minutuak urteak ziren, baina urteak minutuak bailiran igarotzen ziren. Patioan haitzak legartzen pasatako arratsalde bat inoiz ez zela amaituko eman zezakeen, baina bat-batean, urtea akabura heltzen zen, eta ez zegoen hilabete horiez guztiez zer izan zen jakiteko modurik.

Preso guztien erronka garrantzitsuena, preso politiko guztiona bereziki, duintasunez nola biziraun, kartzelatik osorik nola irten eta

uste sendoak nola iraunarazi eta indartu izaten da. Hori lortzeko, aintzat hartzeko lehen egitekoa, bizirik irauteko jakin beharreko guztiaren ikasketa egokia da. Horretarako zure aurkariaren helburuak ezagutzea estrategikoa da, hauek ezagututa soilik egin ahalko baitzaie aurre. Kartzelak presoaren adore eta ausardia suntsitzea du helburu. Horretarako, agintariak presoaren ahulunetan indar egiten, bere ekimena deuseztatzen, jendetasun zeinu oro ukatzen, hezur-haragizko egiten gaituen pindar oro amatatzen ahalegintzen dira.

Gure biziraupen aukera oro gurekin egin asmo zutena ulertzeko eta guztion artean ezagutza hori elkarbanatzeko genuen gaitasunean oinarritzen zen. Bakartuta dutenarentzat, oso zaila ez, ia ezinezkoa da bizirautea; nik nire aldetik, bakarrik egon izan banintz, ez dakit zer egingo nukeen. Baina batasunak gure determinazioa indartzen zuen, eta gobernuaren akatsik handiena gu guztiok batera giltzapetzea izan zen. Elkar babesten ginen, elkarri adore ematen genion. Genekien edo aztertzen genuen oro partekatu egiten genuen eta, horrela, edonork banaka izan zezakeen balioa biderkatu egiten zen. Guztiok, baina, ez genien modu berean erantzuten pairatzen genituen oinazeei. Norberak giza-ezaugarri ezberdinak ditu eta muturreko egoeran nork bere modura erantzuten du. Gure kasuan, sendoenek ahulenez zainduz denok indartuta irteten ginen atakatik. Azken batean, geure bizitza propioa eraiki behar izan genuen kartzelan. Agintariek eurek ere aitortzen zuten, neurri bateraino, ordena guri, eta ez funtzionarioei esker, mantentzen zela presondegian.

Sarritan beharrezkoa izaten da, buruzagi gisara, gehiengoak babesten ez dituen edota berehalakoan emaitzarik izango ez duten ekintzak abiaraztea. Garaipenen loria bidea urratzeko saiakera egiten dutenentzat izaten da. Nabarmen da hori kartzelan: norberak

besterik ezagutzen ez dituen ideiekiko leialtasunean bilatu behar izaten da aterpe gehiegitan.

Aurrerantzean isilpean aritu beharko nuen, baina ez nengoen borroka alboratzeko prest. Borroka hau, hurrengo urtetan, gu eta gure zapaltzaileen artean luzatuko zen, eta ez zuen gu bioz landa, beste lekukorik izango. Guda handiago baten baitan mikrokosmos bat zen gure kartzelakoa. Kanpoan egin genuen gisa berean lotuko gintzaizkion borrokari Robben irlan ere: arrazakeria eta errepresioa berberak ziren eta hauei aurre egiten jarraituko genuen, beste baldintza batzuetan izan arren.

Kartzelak eta bertako agintariek, presoari jendetasun oro lapurtzen ahalegintzen dira. Helburu horrek, bere horretan, paradoxa badirudi ere, nire biziraupena bermatzen zuen. Nik banekien, nire duintasuna bahitzen saiatzen zen pertsona edo erakunde orok, porrota jasango zuena ezinbestean; ez nengoen, ezein salneurritan, inolako presiopean, makurtzeko prest. Inoiz ez nuen bizi arteko zigorrak betiko esan nahi zuenik pentsatu, eta inoiz ez nuen burdin-hesion artean hilko nintzenik ere sinetsi. Behar bada, kontuan hartzeko ere etsigarriegia zelako arbuiatzen nuen ikuspegi hori. Beti jakin izan nuen, egunen batean, berriz nire oinpean belarra sentitu eta eguzkipean ibiltzera itzuliko nintzela, munduko pertsona libre moduan.

Baikorra naiz. Ez dakit, berezko ezaugarri dudan edo adinaren ondorio den, baina baikorra izatea, neurri batean, burua eguzkirantz jaso eta beti aurrera egitea da. Egoera zail batzuetan, gizartearekiko nire fedea modu zorrotzean jarri nuen frogan, baina ez nuen etsipenean babestu nahi izan; norabide horren amaieran aurkitzen dira porrota eta heriotza.

# – 3 –

Goizero, bost eta erdietan, gaueko zaindariak korridorearen hasieran zegoen brontzezko kanpaia kolpatuz esnatzen gintuen. "*Word wakker! Staan op!*" (Esnatu! Gora denak!), oihukatzen zuen. Goiztiarra izan naizenez, goizik iratzartzea ez zen arazo niretzat. Ordu horretan esnarazi arren, zazpiak laurden gutxira arte ez ziguten ziegatik irteten uzten. Denbora egiteko atxilogela garbitu eta lastaira eta mantak kiribildu behar izaten genituen. Ez genuen iturriko urik, eta komunen faltan, hogeita bosten bat zentimetroko diametroko *ballies* deituriko burdinazko ontzi batzuk genituen. Portzelanazko estalki konkabo bat izaten zuten hauek gainean, eta bizarra egiteko eta eskuak eta aurpegia garbitzeko beharrezko ura geldotzen zuten.

*Ballies*ak hustea izaten zen gure lehen lana, zazpiak laurden gutxitan, irteera baimentzen zigutenean. Ibilguaren amaieran zeuden isurbideetan arretaz garbitu behar izaten ziren hauek, kiratsa jasanezina izaten baitzen bestela. Ontzi haiek garbitzeak atseginerako arrazoi bakarra zuen: lehen egun haietan gure burkideekin hitz batzuk trukatu ahal izateko genuen aukera bakana zen. Kartzelazainek ez zuten garbiketa unea ikusi nahi izaten eta kideekin ahopeka hitz egiteko tartea ematen zigun horrek. Lehen hilabetetan arrunten saileko presoek gosaria ziegetaraino eramaten ziguten. Gosaria artirinezko ahi bat izan ohi zen eta, preso arruntek, ziegako burdin hesietatik sartzen zuten gopor batekin zerbitzatzen zuten. Ez zen erraza, eta abilezia handia behar izaten zen, edukia isuri gabe zerbitzatzeko.

Zenbait hilabetera, gosaria etxartean bertan petrolio bidoi zaharretan zerbitzatzen hasi zitzaizkigun. Metalezko goporretan jaten genuen

ahi hura. Gutako bakoitzari kafea zeritzoten zerbaitezko pitxer bana ematen ziguten; hura, baina, xehatu eta belztu arte txigortutako artoarekin irakindako ura besterik ez zen izaten. Denbora aurrera, patiora irteten utzi ziguten, eta gosaria heldu bitartean perimetroaren luzean korrika egiten nuen.

Kartzelan, gainerako guztia bezala, elikadura ere diskriminatzailea izaten zen. Oro har mestizo eta indioek afrikarrok baino janari apur bat hobea jasotzen zuten. Anoa orekatua hornitzen zigutela esatea gustuko izaten zuten agintariek. Eta, egiari zor, arrazoi zuten: gure elikadurak ezatseginaren eta irentsiezinaren arteko oreka arin bat gordetzen zuen. Ezinbestean, beraz, gure protesta askoren iturburu izaten zen janaria. Lehen egun haietan, kartzelariek honela esaten ziguten: "Tira gizona, zuen etxeetan sekula jan izan duzuena baino hobeto jaten duzue-eta!".

Gosariaren erdian, zaindariek "*Val in! Val in*!" (Lerrokatu! Lerrokatu!) oihukatzen zuten eta ziega atarian berrikuspenerako kokatzen ginen. Preso guztiek kaki koloreko alkandoraren hiru botoiak itxi behar izaten genituen. Zaindaria igarotzean burukoa kendu behar izaten genuen. Botoiak lotu gabe bagenituen, burukorik gabe agertzen ez baginen edota gure ziegak atondu gabe egonez gero, kartzela-araudia hausteagatik ohartarazten gintuzten. Kode-erabakiari jarraiki, zigor-ziegan atxikitzearekin edota jatordu baten edo batzuen galerarekin zigortzen gintuzten.

Berrikuspena pasa ondoren, eguerdira arte, patioan harriak xehatzen izaten gintuzten. Ez ziguten atsedenik ematen; erritmoa jaisten bagenuen, azkarrago lan egin genezan estutzen gintuzten zaindariek. Eguerdian kanpaiak jo eta beste janari bidoi bat ekartzen zuten patiora.

Afrikarrok artaburu egosiak izaten genituen otordu. Indiar eta mestizoei pure garden baten itxura zuen arto-irinez egindako semolazko eltzekada bana ematen zieten. Zenbaitzutan, euren platera barazkiekin edertua zetorren; gure artaburuek ez zuten inolako apaingarririk izaten.

Bazkariarekin *phuzamandla* zerbitzatzen ziguten maiz. “Indarra ematen duen edaria” esan nahi zuen gurean, eta artoz eta legami apur batez prestaturiko hauts bat izaten zen. Urari edo esneari eransten zitzaion, eta nahastura lodia zenean, zaporetsua izan zitekeen. Baina kartzelako agintarien anoa hain zen eskasa, urari kolorerik ere ez ziola ematen. Ahal nuen guztietan anoan emandakoa gordetzen nuen, harik eta zapore apur bat izango zuen kolpe bat egiteko behar adina eduki arte; kartzelako agintariek elikagaiak pilatzen genituela aurkituz gero baina, hauek konfiskatu eta arduraduna zigortzen zuten.

Bazkariaren ondotik lauak arte egiten genuen lan. Zaindariek txilibitua jo eta atzera zenbaketarako lerrokatu egiten gintuzten. Segidan, atondu gintezen, ordu erdiko tarte bat baimentzen zuten. Korridorearen amaieran zegoen bainuak, itsas-urezko bi dutxa, ur gaziko iturri bat eta bainuontzi bezala erabiltzen ziren metal galbanizatuko hiru upel handi zituen. Ez genuen ur berorako aukerarik: egunean pilatutako hautsa gainetik kentzeko, upelen barnean, zutik edo kukubilko, xaboia emanda garbitzen ginen. Hortzak estututa egin behar izaten genuen, hotz egiten duenean izoztear dagoen uretan sartu behar izatea ez baita inorentzat atsegina. Batzuetan abestu egiten genuen ura hain hotza ez zegoela sinestarazteko. Lehen egun haietan elkarrekin hitz egin genezakeen beste aukera urrienetako bat izaten zen.

Lau eta erdietan puntuan kolpe bortitz bat jo ohi zuten ibilguaren muturrean zegoen egurrezko atean: afaria iritsi zela esan nahi zuen.

Jatekoa banatzeko ardura preso arrunten talde batek izaten zuen. Anoa jasotzean, gure ziegetara itzultzen ginen afari legea egitera: arto morokilak zerbitzatzen zizkiguten, batzuetan azenario, azaburu edo beterraba puska banarekin; gehiegitan lupaz bilatu behar izaten ziren hauek ordea, zapore apur bat irudikatzeko. Barazkia egokitzen zenean, astetan zehar berdina ematen ziguten, azenarioa edota azaburua alferrik galdu eta hauek jatearen jateaz norbait gaixotzen zen arte. Egun biz behin, morokilek haragi zatitxo bana izaten zuten; kartilagoa izaten zen hau, gehienetan.

Afaltzeko, preso mestizo eta indioek ogi-biribil laurden bana jasotzen zuten (*katkop* deitua, hots, katu-burua, honen tankerari zor) margarina zati batekin. Hau "europar" elikagai bat zela-eta afrikarrok ez genuela gustuko izango suposatzen zuten agintariek.

Ohikoa izaten zen kartzela-araudian ezarri baino are anoa txikiagoak ematea. Sukaldean kontrabandoa ohikoa zelako gertatzen zen hau. Sukaldariek –preso arruntak izaten ziren– eurentzat edo euren lagunentzat gordetzen zuten janaririk hoberena; mokadu gozoenak kartzelariei mesede edo lehentasunezko traturen batean eskaintzeko alboratzen zituzten.

Arratseko zortzietan gaueko zaindaria gure korridorean sartzen zen. Honek, ateko zulo txiki batetik, kanpoan aurkitzen zen beste kide bati ematen zion giltza. Jarraian, ibilgutik aurrera eta atzera, lotarako aginduak ematen zituen. Robben irlan ez zen inoiz "itzali argiak!" oihua entzun: ziega bakoitzean zegoen metal-oihalez babestutako bonbilla bakarra gau eta egun piztuta egoten zen. Aurrerago, goi-mailako tituluak lortzeko ikasketak egiteko eskubidea zutenek, gaueko hamarrak edo hamaikak arte irakurtzeko baimena lortu zuten.

Ibilguaren ezaugarri akustikoak onak zirenez, lokartu aurretik, apur batez, elkarrekin hitz egiten saiatzen ginen. Edozein xuxurla entzun egiten zen eta "*Stilte in die gang!*" (Isiltasuna galerian!) oihua errepikatzen zuen zaindariak behin eta bitan. Irakurtzen edo idazten ari ez ginela ziurtatzeko, zaindariak behar hainbat aldiz zeharkatzen zuen korridorea gauez. Hilabete batzuk igarota, zaindariaren urratsak entzun, eta hitz egiteari utzi edota zernahi objektu debekatu edo kontrabandozko ezkutatzeko denbora izan genezan, hondar apur batez hautseztatu genuen ibilguaren luzera osoa. Erabateko isiltasuna egiten zenean baino ez zen esertzen zaindaria korridorearen amaieran zegoen gelatxoan, egunsentira arte lo-kuluxka egiteko.

# – 4 –

Goiz batez, Bram eta Joelekin izaniko bilkuraren ondoren, bulego nagusira eraman gintuzten. Hau laurehun metroko distantziara aurkitzen zen harrizko egitura sinple bat zen, bahituran gintuzten sailaren oso antzekoa. Lerrokatu egin gintuzten, kartzelan ohikoa denez, hatz-markak hartzeko. Zain geundela zaindari bat kamerarekin ikusi nuen. Hatz-markak hartu zizkigutenean, arduradunak argazkiak egiteko lerrokatzeko agindu zigun. Nire burkideei keinu egin nien ez mugitzeko adieraziz. Beragana zuzendu nintzen: "Argazkiak ateratzeko baimena ematen dizun batzordeburuak sinatutako agiria ikusi nahiko nuke". Izan ere, presooi argazkiak egin ahal izateko baimena behar zuten. Zaindariek ez zituzten araudiak irakurtzen, eta hauek aipatzea, presozainak neurrira ekartzeko modu bat izaten zen. Nire eskariak erabat harritu zuen zaindaria. Ezin izan zidan azalpenik eman, ez eta kartzela-aferen arduradunaren inolako dokumentu idatzi eta sinaturik erakutsi ere. Argazkiak ateratzen utzi ezean, gertatuaren berri emango zuela esanez mehatxatu gintuen; baimenik gabe argazkirik ez zela egongo erantzun nion nik. Eta horretan geratu zen.

Arau gisara, preso agertzea umiliagarria zela argudiatuz, uko egin genion argazkiak egiten uzteari. Hala eta guztiz ere, Robben irlako egonaldian zehar argazki bat eta bakar bat egin zidaten.

Aste gutxira, goiz batez, kartzelazainen buruak, patioko lanerako mailuen ordez jostorratzak eta hariak eman zizkigun jertse higatu mordo batzuekin batera. Hauek konpontzeko agindua jaso arren, konponketa posiblerik ez zutela konturatu ginen berehala. Deigarria

suertatu zitzaigun eginkizun arraro hura eta aldaketa zergatik eta zertara zetorren galdetu genion elkarri. Beranduago, hamaikak aldera, aurrealdeko atea ireki eta komandantea trajez jantzitako bi gizonekin ikusi genuen. Bi bisitari hauek Londongo *Daily Telegraph*eko kazetari eta argazkilari bana ziren, komandanteak ohartarazi zigunez. Hura azaltzeko erabilitako tonuari erreparatuta, nazioarteko prentsa ordezkarien bisitek ohiko kontua zirudien, baina bi gizon hauek gure lehenengo bisitari ofizialak ziren eta eszeptizismoz hartu genituen. Lehenik eta behin, gobernuaren gerizpean heldu zirelako eta, bigarrenik, *Telegraph* gure borrokarekiko abegi handirik erakutsi ez zuen egunkari kontserbadorea zelako. Jakin bagenekien hemendik kanporako munduan gure egoerarekiko kezka hedatzen ari zelako, gobernua tratu txarrik jasotzen ez genuela erakusteko ahaleginak egiten ari zela. Bi kazetariek, gu aztertuz, etxarteko perimetroa zeharkatu zuten. Guk, lanean ari bagina legez, burua beheratuta mantendu genuen. Patioari bira eman ziotenean, zaindarietako batek sorbalda helduz, esan zidan: “hitza hartu beharko duzu, Mandela”. Egun haietan sarritan hitz egiten nuen nire kartzela-kideen izenean. Kartzeletako araudiak zehatz-mehatz zioenez, presoek euren buruen ordezkari gisara besterik ez zezaketen hitz egin. Antolakuntzarako aukera oro ukatu eta kolektibo gisara gure indarra ahuldu nahi zuen neurri honek. Arau horri kontra egin arren, ez genuen gauza handirik aurreratzea lortu. Kexaren bat aurkezten genuenean *gu* hitza erabiltzea ere ez zitzaigun baimentzen. Haatik, lehen urtetan, agintariek guztien ordezkari gisara mintzatuko zen preso bat behar zutenean, ni hautatzen ninduten.

Kazetariarekin hogeiren bat minutuz hitz egin nuen. Haietariko lehenak Newman izena zuen, eta ezin zintzoagoa izan nintzaion kartzelako gure bizi-baldintzei eta Rivoniako epaiketari dagokionez.

Tipo atsegina zen, eta elkarrizketa amaitu genuenean argazkilariak erretratu bat egin ote ziezadakeen galdetu zidan. Uzkur agertu nintzaion; baina amore eman nuen, argazkia atzerrian argitaratuko zela jakin banekielako eta, artikulua onbera izatera, gure borrokaren suspergarri izango zelako. Sisulu jauna batuz gero argazkia ateratzen utziko niola erantzun nion. Argazkian biok agertzen gara, patioan, gaur egun oroitzen ez dudan konturen batez hitz egiten. Ez nintzen sekula ez artikulua ikustera ez eta aipatu nuena entzutera heldu. Bi kazetariak joan zirenean zaindariek jertse higatuak eraman eta mailuak itzuli zizkiguten.

Hilabete haietan *Telegraph*eko kazetariak bisitari uholde txiki baten lehen tantak izan ziren. Rivoniako epaiketak herriaren gogoan jarraitzen zuen eta gobernuak ez zuen aukerarik galtzen nazioarteari tratu ona jasotzen ari ginela erakusteko. Jasaten genituen eraso eta torturak deskribatuz irlan genituen baldintzei buruzko istorioak argitaratzen zituzten hedabideek. Gobernua deseroso zegoen eta, esamesei aurre egiteko, irlaz kanpoko pertsona esanguratsu batzuk gonbidatu zituen testigantzok ezeztatu nahian.

Nazioarteko Justizia Auzitegiaren aurrean Namibiaren independentzia defendatu zuen abokatu britainiar baten ikustaldi labur bat jaso genuen. Hau joan ostean, American Bar Associationeko ordezkari baten, Hynning jauna delakoaren, bisita izango genuela jakinarazi ziguten. Iparramerikarrak, garai hartan, salbuespen bat ziren Hegoafrikan, eta halako erakunde agurgarri bateko kide bat ezagutzeko jakin mina nuen.

Hynning jauna heldu zen egunean patiora eraman gintuzten. Kartzela-erakundetako komisarioa izanagatik irlatik inoiz gutxitan agertzen zen Steyn jenerala zuen lagun Hynning jaunak. Kartzelarien artean

*rara avis* bat zen Steyn jenerala. Itxura onekoa eta sofistikatua zen: kalitate bikaineko eta ebakera akasgabeko trajeak janzten zituen. Pertsona oso adeitsua zen, "jaunak" esanez zuzentzen zitzaigun, eta kartzelarien artean beste inork sekula egingo ez lukeen gisara, gu agurtzeko kapela ere kentzen zuen. Alabaina, Steyn jeneralak ekintza zuzenekin ez eta omisioz zanpatzen gintuen. Funtsean, ez ikusiarena egiten zuen irlan gertatzen zen edozein gertakariren aurrean. Bere presentzia ezak adoretu egiten zituen funtzionario ankerrenak, eta hauek nahi zutena egiten zuten. Jeneralak, bere manera onekin, gonbidatua aurkeztu eta esan zigun: "Jaunok, hauta ezazue zuen bozeramailea". Preso talde batek nire izena oihukatu zuen. Steyn jeneralak buruarekin baimen keinua egin zidan eta zutitu egin nintzen. Steyn jeneralaren aldean Hynning jauna lodi eta narrasa zen. Bisita eskertuz bere presentziagatik ohoratuak sentitzen ginela esan nion. Jarraian gure kexen laburpen bat egin nuen, lehen eta nagusienetik hasita: preso politikoak ginela, ez kriminalak, eta gure *status*ari zegokion tratua izan beharko genukeela. Janariaren, bizi-baldintzen eta esleitzen zitzaigun lanaren gaineko gure eskakizunen zerrenda azaldu nion gero. Nire azalpenen aurrean Hynning jaunak ez zuen ni eteteko aukerarik galtzen. Helbururik gabeko esfortzuak egiten igarotzen genituen ordu luzeengatik protesta egin nuenean, preso gisara lanean aritzea zegokigula zehaztu zuen. Eta ziurrenera alferrak ere izango ginela gehitu zuen.

Ziegetan genituen arazoak xehetasunez azaldu nizkionean eten egin ninduen atzera ere. AEBtako kartzela zaharretako baldintzak Robben irlakoak baino askoz okerragoak zirela esan zidan. Hau paradisua ei zen haiekin alderatuta. Lege bidez epaitu gintuztela gehitu zuen: hiltzera kondenatu ez gintuztelako zortea genuela, huraxe merezi genuelako.

Izerditan zegoen eta gutako zenbaitzuk Hynning jauna edanari emanda etorri zela pentsatu zuten. Gutariko inork aurretiaz inoiz ikusi ez zuen moduan, hitz egiten zuen bitartean solaskidea listuarekin zipriztintzeko ohitura harrigarria zuen, eta horregatik agian, hegoaldeko hizkera izan zitekeenean ari zela ematen zuen.

Azkenerako, gogaituta, solasa moztu nion: “ez jauna, esan dudan guztia gaizki ulertu duzu”. Ezeztu egiten nuela ikustean asko haserretu zen Hynning. Bien bitartean, Steyn jeneralak hitzik egin gabe jarraitzen zuen. Egoera hartan ia ezinezkoa zen gutxieneko errespetua gordetzen jarraitzea. Hynningen aipamenekin sutan jarri ziren gure saileko gainerako presoak; minduta sentitzen ziren agintariek bisita hura baimendu zutelako. Edozein bisitak gure adorea puzten zuen, eta hau, aldiz, etsigarria izan zen. Horixe nahiko zuten agintariek hurrengoetarako ere. Etsigarria zen hain ulermen gutxi erakusten zuen erakunde hain ospetsu bateko norbait ezagutzea. Azkenerako, Hynning buelta eman eta, agurtu ere egin gabe, etorritako bidetik joan zen. Ez genuen damurik izan hura bistatik galtzean.

Bisita hartaz urtetan asko hitz genuen, gutariko askok Hynning jaunaren hizkera modu barregarrian imitatzen amaitzeraino. Ez zituen American Bar Associationentzat lagun asko irabazi eta ez genuen sekula bere berri gehiago izan.

## – 5 –

Kartzela-agintariek presoak lau kategoriatan sailkatzen zituzten: A, B, C edo D. Sailkapen altuena eta pribilegiorik gehien A kategoriak zuen; D atalak, aldiz, baxuena izaki, ez zuen onurarik eta preso politiko guztiak, edo agintariek "segurtasun goreneko presoak" izendatutakoak, zuzenean sail horretan sailkatzen zituzten. Sailkapenak hainbat pribilegiotan eragiten zuen: bisitetan, posta-trukean, ikasketetan eta bizigaiak eta bestelako artikuluak erosteko aukeran, besteak beste. Aipatutako gai guztiak ezinbesteko bizigarriak dira presoarentzat. Oro har, preso politiko batek urteak behar izaten zituen D kategoriatik Cra igarotzeko.

Sailkapen-sistemaren aurka geunden gu. Umiliagarriaz gainera, gatibu guztiak, eta bereziki preso politikoak, zanpatzeko beste modu bat zen. Preso politiko guztiak kategoria berekoak izan zitezela eskatzen genuen. Baina kritikatu arren, ezin genuen kontuan ez hartu: sailkatze-sistema kartzela-bizitzaren berezko ezaugarria zen. Norbaitek D taldeko preso izateagatik sei hilean behin  gutun bakarra jaso zezakeelako kexua aurkezten bazuen, agintariek honela erantzuten zuten: "Hobetu zure portaera, bihurtu C taldeko preso, eta sei hilero bi eskutitz jaso ahalko dituzu". Baten bat jateko nahikorik ematen ez ziotelako arranguratzen bazen, A kategoriakoek kanpotik bidalketak jasotzen zituztela eta kantinan bizigaiak eros zitzaketela oroitarazten zieten arduradunek. Askatasunaren aldeko borrokalari sutsuenari ere mesede egiten dio elikagaiak eta liburuak erosteko aukera izateak.

Ohikoan, sailkapena, preso bakoitzaren zigorraren araberakoa izaten zen. Zortzi urtera zigortutako presoa lehen bi urtetan D taldera

esleitzen zuten, hurrengo bietan C taldera, segidako bietan Bra eta azken urtetan Ara. Baina kartzelako agintariek sailkapen-sistema preso politikoen aurkako arma gisa ere erabiltzen zuten: gure portaera kontrolatzearren azpiragoko kategoria batera beheratzearekin mehatxatzen gintuzten, eskuratzen hainbeste kostatako eskubideak galduz.

Robben irlara lekualdatu aurretik, kartzelan ia bi urte eginak nituen arren, etorreran D taldekoa izaten jarraitu nuen. Sailkapen altuenei zegozkien pribilegioak erdietsi nahi banituen ere, uko egin nion ohiko jokamoldea aldatzeari. Kartzelako egoera hobetzeko bitartekorik eraginkorrena otzan agertzea eta ez kexatzea izaten zen. Niri, aldiz, "liskartsua zara, Mandela" esaten zidaten zaindariek, "D taldean igaroko duzu geratzen zaizun bizitza sasoia". Sei hilabetero, presoek kartzela-kontseiluaren aurrean aurkeztu behar izaten zuten. Hauek honen sailkapena berraztertzen zuten. Kontseiluak kartzela-araudiaren arabera neurtu behar zuen preso bakoitzaren jokalegea, baina berehala ohartu ginenez, presoen portaera aztertzera mugatu baino, nahiago izaten zuten auzitegi politiko legez jokatu. Kontseilu aurreko nire lehen agerpenean, funtzionarioek ANCren eta nire uste sendoen gaineko galderak egin zizkidaten. Honek sailkapenarekin inolako zerikusirik ez izan arren, erantzuteko eta nire ideietara hurbildu nitzakeela uste izateko bezain harroa izan nintzen. Ordura arte tratu gizatiarra eman ziguten tarte bakanetakoa izan zenez, xalotasunez erantzun nien galderei. Amaitutakoan euren amarruan inozo bat bezala erori nintzela konturatu nintzen, hura informazioa ateratzeko agintariek zerabilten teknika bat gehiago besterik ez baitzen azken batean. Horrenbestez, kartzela-kontseiluarekin politikaz berriz ez eztabaidatzea adostu genuen gure artean.

* * *

D taldeko preso moduan, sei hilabetean behin bisita bat izan eta gutun bana jaso eta idazteko eskubidea besterik ez nuen. Hura zitzaidan kartzela-sistemaren muga jasangaitzenetako bat. Etxekoekin harremana izatea jende ororen eskubidea izaki, honek ez luke kartzela-sistemaren sailkapen artifizialak mugatuta egon behar. Eta bere horretan, kartzelaren baitan bizi beharreko beste mugapen bat gehiago besterik ez zen..

Bisitak eta gutunak, gainera, "lehen graduko" senitartekoei mugatuta zeuden. Debeku hau bidegabea eta arrazista zen. Afrikarrak hurbileko familia ulertzeko eta sentitzeko modua ez da europarrek edo mendebaldarrek dutena; gure familia egiturak handiagoak dira eta askoz kide gehiago biltzen ditu bere baitan. Asaba komun baten ondorengo dela baieztatzen duen edonor familia bereko kidetzat hartzen da.

Kartzelan senideei buruzko albiste txar bat baino okerragoa den gauza bakarra dago: albisterik eza. Errealitate ezatseginenari baino zailagoa da norberak irudikatzen dituen zoritxar eta tragediei aurre egitea; desiragarriagoa da berri txarrak dakartzan gutun bat gutunik ez jasotzea baino.

Gutun murrizketa gu gehiago estutzeko baliatzen zuten agintariek. Posta banatu aurreko uneetan itxaropena izugarria izaten zen. Hilean behin egiten zuten gutun partiketa eta sei hilabete ere igaro zitezkeen bakar bat ere jaso gabe. Sei hilean behin eskutitz bat jasotzeko baimena izatea eta, behin hilok igarota, bakar bat ere ez jasotzea, desolagarria izaten zen. Gutunik ezean galdera geratzen

zen: “Zer gertatu ote zaie emazte eta semeei, zer amari eta arrebei?”. Gutunik jasotzen ez nuen aldiro desertu mortu eta lehorra sentitzen nintzen. Ohikoa izaten zen agintariek borondate txarrez, bestelako arrazoirik gabe, posta bahitzea. Horrela zuzentzen zitzaizkigun presozainak halako kasuetan: “zuretzat eskutitz bat jaso dugu, baina ezin dizugu eman”. Ez zuten zergatia azaltzen, ez eta gutuna norena zen ere. Egoera hartan neurrira etorri behar izaten nuen, egokitutako bideetatik protesta luzatu eta, noiz edo noiz, gutuna eman ziezadaten lortzeko.

Gutunen bat jasotzen genuenean pozez lehertzen ginen. Basamortua lorarazten duen udako euria bezalakoa zen eskutitz bakoitza. Agintariek gutuna luzatzen zidatenean, arrapaladan hurbiltzeko gogoak barrua erre arren, axola ez balitzait bezala jasotzen nuen. Kartazala urratu eta gutuna han bertan irakurtzeko irrikaz egoten nintzen, baina, kartzelariei nire egonezinarekin atseginik ez ematearren, ez nuen tentaldiaren aurrean amore ematen; ziegarainokoa astiro egiten nuen, nire senideen gutun bat ireki aurretik, beste egiteko asko izango banitu bezala.

Lehen hilabetetan Winnieren gutun bat jaso nuen. Hain kimatua jaso nuen, hasiera eta agurraz gainera ezer gutxi geratzen zitzaiola. Irlako zentsoreek pasarte “iraingarriak” tintarekin zirriborratzen zituzten hastapenetan, baina tinta uretan garbitu eta azpian idatzia zegoena irakur genezakeela jakin zutenez, ezabatze modua aldatu egin zuten. Paragrafo osoak kimatzeko aihotzak erabiltzen hasi ziren ordutik aurrera. Eskutitz gehienak paperaren bi aldetatik idatzita etorri ohi zirenez, ifrentzuan zegoena ere moztu egiten zuten modu horretara.

Gutunak xehatuta entregatzeak liluratu egiten zituela zirudien. Zentsurak postaren entrega atzeratzen zuen, funtzionarioek –batzuk ingelesa menperatzen ez zutenez– gutun bat kimatzeko hilabetea ere behar izaten baitzuten. Guk idazten genituen eskutitzak ere zentsuratu egiten zituzten. Sarritan, jasotzen genituenek adina zulo izaten zituzten guk bidalitakoek.

Abuztuaren hondarrean, irlan hiru hilabete baino gutxiago neramatzanean, agintariek biharamunean bisita izango nuela iragarri zidaten. Winnie eta Albertinaren ikustaldi bat izatea barrundatu, itxaron eta desiratu nuen.

Winniek irlan espetxeratu gintuztela jakin zuen unetik bertatik bisita baimena lortzeko beharrezko urrats guztiak egin zituen. Debeku aginduaren menpe zegoenez, Justizia ministroaren baimen berezia behar zuen, nirekin edonolako harremanik izaten jarraitzeko.

Agintarien oniritzia izanda ere, ez zen erraza izaten Robben irlan bisita aukera lortzea. Ikustaldiek hogeita hamar minutuko gehienezko iraupena izaten zuten eta preso politikoei ez zitzaizkien bisitariekin gela partekatzeko *vis a vis*ak baimentzen.

Ez zuen zaindariek gure ikustaldiak aldez aurretik planifikatzen zituztenaren itxurarik. Gutxien espero zenuenean, emazteari deitu eta honakoa adierazten zioten: “Bihar zure senarra bisitatzeko baimena duzu”. Jokamolde honek nabarmen zailtzen zituen gauzak. Horrek, sarritan, bisita gauzatu ezina izaten zuen ondorio. Sendiko kide bateren batek ikustaldi bat aldez aurretik antolatzea lortuz gero, agintariek, nahita, batzuetan hegazkina bera aireratu arte, atzeratzen zuten baimenaren entrega. Espetxeratuen senide gehienak, gainera,

Lurmutur Hiritik urrun bizi zirenez, eta hauek diru gutxi izan ohi zutenez, bisitak euren ahalmenetik kanpo egon ohi ziren. Gizonetako batzuk familia oso txiroetatik zetozen eta urteetan euren emazteak ikusi gabe egoten ziren. Eta hori inoiz ikustea lortzen zutenen kasuan; ezagutu baitut bisita bakarra jaso gabe Robben irlan hamarkada bat edo gehiago igaro duenik ere.

Bisita gela oso txikia zen. Ez zuen leihorik eta kontaktu fisikoa debekatuta zegoen. Presoaren aldetik bost barrutiko errenkada bat zegoen kristalezko leihatila txiki estuekin. Hauek beste aldean kokaturiko antzerako barruti batzuetara ematen zuten. Barrutiak aulki bana eta leiar lodi eta zikinean hitzak igaro zitezen zulo txikiak izan ohi zituen. Bestek entzun nahi izatera ozen hitz egin behar izaten zen. Aurrerago, kartzela-agintariek mikrofonoak eta bozgorailuak jarri zituzten kristalaren alde bietan; hobekuntza txiki bat izan zen.

Goizeko lehen orduan bisita-gelara joateko abisua eman ziguten Walter eta bioi. Gelako hegalik aldenduenean jezarri ginen. Urduri nengoen eta, bat-batean, leihatila osoa hartuz, Winnieren aurpegi maitagarria agertu zen. Bisitetara jantzi berriren batez edertua etorri ohi zen. Zaputza hartzen nuen emaztea ukitu, berarekin samurki hitz egin edota intimitate unerik txikiena igarotzea ezinezkoa zitzaidala ikusirik. Ezinbestean, mespretxatzen genituen pertsonen begiradapean eta distantziara lotzen ginen.

Winnieri tentsioa aurpegian nabari zitzaion. Ez zuen samurra behar ni testuinguru hartan ikusteak. Irlara heltzea nekeza zen berez, eta horri, presozainen makurkeriak eta harremanaren izaera inpertsonala gehitu behar zitzaizkion, kartzelaren berezko erritual desatseginaz gainera.

Gerora jakin ahal izan nuenez, Winniek bigarren debeku agindu bat jaso zuen, eta ondorioz Adingabekoen Arreta Bulegoan zuen lanetik kaleratu egin zuten. Kanporatu baino apur bat lehenago poliziak bere bulegoa arakatu zuen. Agintariek Winnie eta biok isilpeko harremanak mantentzen genituena pentsatzen jarraitzen zuten. Winniek maite zuen gizarte-laguntzaile gisara egiten zuen lana, horrekin borrokaren alderdi praktikoa ordezkatzen baitzuen nolabait: haurrei harrera familiak, langabeei lana eta asegururik ez zutenei mediku-laguntza bilatzen aritzen zen. Asko arduratzen ninduten emazteak jasan behar izaten zituen debeku eta jazarpenek. Ezin nuen ez bere ez eta umeen ardura nire gain hartu, eta estatuak traba asko jartzen zizkion eguneroko bizitza egiteko, gainera. Ezinak erraiak marraskatzen zizkidan.

Gure hitz-trukea deserosoa izan zen hasieran. Bere atzean zutik zelatan ziren bi zaindariek eta nire gibelaldean zeuden hiruek ez zituzten gauzak errazten. Euren zeregina ez zen gu begipean izatea soilik: izuaren itzala ere baziren izan. Ingelesez edo afrikaansez hitz egitera behartzen gintuen araudiak –afrikar hizkuntzak debekatuta zeuden– eta familia kontuak aipa genitzakeen soilik. Gai honetatik aldentzen zen edozein aipamenek eta, urrundik bazen ere, edozein gai politikok, ikustaldiaren bat-bateko amaiera suposa zezakeen. Zaindariek ezagutzen ez zuten izen bat aipatuz gero, hauek elkarrizketa moztu eta aipatu pertsona nor zen eta berarekiko harremanaren arrazoia zein zen galdetzen zuten. Sarritan gertatu ohi zen hau, funtzionarioek sarritan ez baitzituzten izen afrikarren aniztasuna eta izaera ezagutzen. Etsigarria izaten zen ikustaldiko minutu preziatu batzuk zaindari bati nire zuhaitz genealogikoaren adar ezberdinak azaltzen galdu behar izatea. Alabaina, euren ezjakintasunak gure alde ere jokatzen zuen. Elkarrizketan aipatu

nahi genituenentzat izen kodetuak asmatu eta gure senitarteko gisara aipatzea adostu genuen.

Winnie  kezkatuta zegoenez, lehen bisita hark berebiziko garrantzia izan zuen. Tratu txar fisikoak jasaten ari ginela entzun zuen. Ongi nengoela jakinarazi nion eta, nahiz eta ohi baino argalago, bere begiekin forman nengoela frogatu ahal izan zuen. Urduritasunari egotzi nion bere mehartasuna: Winnieren bisaiak tentsioan zegoelako-edo edo itxura eskasa izaten zuen bisita amaieran. Pisu apur bat irabaz zezala agindu nion. Dietan zegoen, eta nik, aldiz, dietarik ez egiteko besterik ez nion esan. Haurrengatik, gure ama, arreba eta bere sendiagatik galdetzeko ere baliatu nuen bisita.

Bat-batean, nire atzealdean zegoen zaindari batek "bukatu da denbora, bukatu da denbora!" esan zuen. Itzuli eta esaten zuena sinetsi ezinda begiratu nion. Ez zitzaidan ezarritako ordu erdia igaro zenik iruditzen. Zuzen zegoen ordea. Bisitak segundoen buruan amaitzen zirela iruditzen zitzaidan beti. Kartzelan izan ninduten urtetan guztietan ez zen zaindariak denbora amaitu zela oihukatzen zuen uneak ezustean hartu ez ninduen ikustaldirik izan. Gure eserlekuetatik zakarkeriaz ateraraztean eskuek agur egiten zuten. Winnie irteten ikustean, bere presentziaren sentipena gordetzeko besterik ez bazen ere, eserita nengoen lekuan geratzeko gogoa izaten nuen beti; baina ez nuen, alabaina, zaindariak sentimendu horien lekuko izaterik nahi. Atzera ziegara bidean bisitan hitz egindako guztia errepasatzen nuen. Hurrengo egun, aste eta hilabetetan ikustaldia behin eta berriz oroitzen nuen. Gauzek hartu zuten norabideagatik, Winniek ezin izan ninduen bi urte barrura arte berriz bisitatu.

# – 6 –

Urtarrileko goiz batez, ohiko lanak hasi aurretik, patioan zenbaketa egiteko elkarrarazi ordez, irtenarazi eta kamioi itxi batera igoarazi gintuzten. Kartzela-eremua utziko genuen lehen aldia zen. Ez ziguten nora ginderamatzaten esan, baina susmoa atezuan nuen. Minutu gutxiren buruan, 1962an irlan eduki nindutenetik ondo ezagutzen nuen inguru batean jaitsiarazi gintuzten: harrobian.

Karezko harrobiak muino harkaitztsu baten magalean zabalduriko krater zuri itzelezko bat iduri zuen. Labarrak eta muinoko harroinak itsutzeraino zurbil agertzen zitzaizkigun. Goian belarra eta palmondoak hazten ziren; behean latorrizko estalpe zahar batzuk zituen agerrune bat zabaltzen zen.

Ofizialki harrobiaren ardura zuen Wessels koronelak hartu gintuen. Jarrera axolagabeko morroi bat zen; kartzela araudia zehatz-mehatz betetzeak besterik ez zuen kezkatzen. Sei hilabetez harrobian lan egin ostean, zigorraren amaierara arte lan arinago batekin sarituko gintuztela esan zigun.  Ez zituen kalkuluak ondo egin, harrobian hamahiru urte egin behar izan baikenituen azkenerako.

Ofizialaren hitzaldiaren ondotik, pikotxak eta palak, eta haiekin, erauzketari buruzko halamoduzko jarraibide batzuk eman zizkiguten. Ez zen egiteko erraza. Lehen egunean gure erreminta berriekin oso gutxi erauzi genion mendiari. Kareharria, maskor eta itsas koral kondar kaltzifikatua, haitz geruzen artean aurkitzen zen. Erauzteko, lehenik pikotxarekin bidea zabaltzen genuen, gero palarekin kareharria atera ahal izateko. Hau patioan lana egitea

baino nekagarriagoa zen. Harrobian egun batzuk egin genituenean, afalostean, arratsaldeko lau eta erdiak aldera, loak errenditzen gintuen. Biharamunean nekatuta eta minberatuta itzartzen ginen.

Arduradunek ez ziguten patiotik harrobira lekualdatzearen arrazoiez ezer esan. Irlako errepideetarako legar gehiago behar izatea izan zitekeen zio nagusia. Alabaina, gerora gure artean lekualdatzearen arrazoiez eztabaidatu izan genuenean, diziplina indartzeko beste bitarteko bat gehiago zela ere ondorioztatu genuen. Gainerako presoengandik –hauek ere harrobira zigortuak – ezberdinak ez ginela erakusteko, eta eurek bezala guk ere gure krimenengatik ordainduko genuela esateko, euren modua zen. Gure adorea pitzatzeko saiakera bat gehiago zen, azken batean.

Hala eta guztiz ere, harrobiko lehen aste haiek suposa zitekeenaren aurkako eragina izan zuten gugan. Eskuak babaz eta odoletan izan arren, indartuta geunden. Nik nahiago nuen, puskaz, denbora, kanpoan, naturaren erdian, landaredia eta zuhaitzak begiesten, gure gainetik zerua zeharkatzen zuten txoriak behatzen eta itsasotik zetorren haizea aurpegian sentitzen eman. Gozatu egiten nuen eguzkia bizkarrean sentitzen nuen bitartean nire gihar bakoitza nola ederresten zen ikusten. Harri eta karezko metak jasotzeak saria baitzuen.

Aurrerago, kamioian egin ordez, harrobirainoko joan-etorria oinez egiten hasi ginen. Hau ere suspergarria izan zen, harrobirainoko hogei minutuko ibilaldian irlako paisaiaz gozatzen baikenuen. Landaretza trinkoa eta sasoi hartan gure estalpean sabai egiten zuten zuhaitz luzangak ikus genitzakeen. Eukaliptoen urrina usaintzen genuen eta, noizean behin, gazela afrikarrak eta urrunean bazkatzen zuten antilopeak ere ikusten genituen. Gizonetako

batzuk jarduera monotonotzat zuten bidaldia: niretzat ez zen inoiz inolaz horrela izan.

Nahiz eta, ustez, harrobira lekualdatzearen xedea gainerako kondenatuengandik ezberdinak ez ginela erakustea izan, gure kartzelariek aspaldi irla populatu zuten legenardunei eman zieten tratu bera eman ziguten. Noizik eta behin, bidearen ertz batean lanean ari ziren preso arrunten koadrila batekin egiten genuen topo. Kasu hauetan, gu ez ikusteko, zuhaixken atzean ezkutatzeko agintzen zieten zaindariek. Gu ikuste hutsak euren diziplinan eragingo balu bezala zen. Haietarik batean, betertzetik zehar, preso haietako batek ANCren agurra egiteko ukabila nola jasotzen zuen ikusi genuen.

Hauts errepidea bitan banatzen zen harrobira hurbildu ahala eta gatibuok eskuineko adarkadura hartzen genuen gure lanetara zuzentzeko. Bideen gurutzaketa hau, aurrerago, gainerako presoekin komunikatzeko gune garrantzitsua bihurtu zen. Bidea erdibitzen zen puntutik, sasitzaren artetik, eraikin zuri txiki bat ikus genezakeen. Robert Sobukwe bahitua zuten bertan. Urteak ziren etxea zaindari beltz baten bizileku gisara eraiki zutela, eta Sobukwe bakarrik bizi zen orain. Belar txarrez estaliriko lursail txiki eta zabar batean jaso zuten etxola. Aurrean izan ohi zuen zaindariagatik ez balitz, inork ez luke han norbait bizi zenik sinetsiko.

Sobukwek 1963an amaitu zuen zigorra, baina urte hartan ezarritako Lege Orokorrari eginiko xedapen baten bidez –Sobukwe klausula deitu zutena–, Justizia Ministerioak, preso politikoak kargurik gabe epe mugagabean atxiki zitzakeen. Hori berori egin zuten Bobekin. Sei urtetan Sobukwek halamoduzko bizitza bat izan zuen irla hartan: askatasunik gabeko gizon aske bat zen. Behin edo behin lorategian ikusi genuen, baina gehiago ez.

Goizetan, heldu bezain laster, harrobiaren goiko aldean zegoen latorrizko estalpe batetik pikotxak, palak, mailuak eta eskorgak hartzen genituen. Erauzpen eremuaren luzeran hiru edo lauko taldetan kokatzen ginen gero, plataformetatik arma automatikoz hornitutako zaindariek jagoten gintuzten bitartean. Armarik ez zeramaten beste zaintzaile batzuk gertutik zaintzen gintuzten, ahalegina biderkatzeko aginduz. "*Gaan aan! Gaan aan!*" (Segi! Segi!) oihukatzen zuten, idiekin baliatuko lituzketen hitzak zuzenduz guri.

Hamaikak aldera, eguzkia goiengo puntuan zenean, ahulak hartzen gintuen. Ordurako izerdi lapetan izaten nintzen. Kartzelariek are ahalegin handiagoa eskatzen ziguten une hartan: "*Nee, man! Kom aan! Kom aan!*" (Ez geratu! Goazen! Goazen!). Hamabietan, bazkaltzeko egin beharreko geldialdiaren aurretik, harriak eskorgetan jasota kamioiraino eramaten genituen.

Eguerdian, txilibitua jo eta muinoaren magalera jaisten ginen. Eguzkitik babesteko, zinkezko teilatuaren aterpera, inprobisatutako aulkietan esertzen ginen. Zaindariek estalpe handiago batean hartzen zuten babes, eta hauek mahaiak eta aulkiak zituzten. Arto egosiaren orearekin bidoiak ematen zizkiguten bazkaltzeko eta, otorduan, ehunka kaio iskanbilatsuk gure buruen gainean zirkuluak deskribatzen zituzten gugana amiltzeko. Batzuetan hauetakoren baten lurreratze trebe batek otordua alferrik galtzen zuen.

Lauak arte egiten genuen lan. Ordua heltzean, kareharria zain izaten genuen kamioian zamatzen genuen berriro. Lanegunaren amaieran hauts zurizko gainazal bat izaten genuen. Izerdi xirripek karezko azalean errekatxoak eginagatik mamu zurbilen itxura izaten genuen. Atzera kartzelan, hauts hura erabat desagertzea lortu gabe ur hotzetan garbitzen ginen.

Beroak eta harrobiko lanak baino kalte handiagoa egiten zigun argiak. Bizkarra eguzkitik aterpetzeko alkandora genuen; kareharrian islatzen ziren izpietatik babesteko begiak itxi beste irtenbiderik ez genuen izaten ordea. Argiak itsutu egiten gintuen, eta horri inguruko hautsa gehituz gero ez genuen ia ezer ikusten. Begiak negarretan izaten genituen eta egunaren amaierarako ezkelduta amaitzen genuen. Gauez, argiaren indarra urritzean, ikusmena argi-itzalera moldatzeko denbora behar izaten zen.

Harrobian zenbait lanegun egin ondoren bide ofizialetatik eguzkitako betaurrekoak eskatu genituen. Ukatu egin zizkiguten. Erantzun hori aukeren artean zegoen, garai hartan, irakurtzeko betaurrekoak ere ezarritako debekuen artean zeudenez. Hori horrela, Robbeneko komandante buruari, betaurrekoak baimenduko ez bazizkiguten, liburuak izateko eskubidea izateak ez zuela zentzurik ohartarazi nion.

Ondorengo aste eta hilabetetan behin eta berriro eskatu genituen eguzkitako betaurrekoak. Onespena irabazi genuenerako ia hiru urte joan ziren, eta hau itsu gera ez gintezen beharrezkoak genituela zioen mediku ulerkor bati esker bakarrik lortu genuen. Honen guztiaren ondotik ere, guk erosi behar izan genituen betaurrekook.

Enbido hauek –eguzkitako betaurrekoengatik, galtza luzeengatik, ikasteko aukerengatik, elikadura hobe zezaten eskatzeko– kartzelatik kanpo mantendu genuen borrokaren jarraipena ziren guretzat. *Apartheid*aren aurkako gure borrokari eusteko modua ziren espetxean bizi-baldintzak hobetzeko egin genituen kanpaina hauek: zentzu horretan borroka bat eta bakarra zen. Tamainak arduratu gabe, lekuan eta unean bertan egiten genion aurre injustiziari; gure gizatasuna babesten laguntzen zigun honek.

Harrobian lanean hasi eta gutxira beste preso politiko batzuk batu zitzaizkigun sailean. Batzuk 1964ko uztailean atxiloturiko MKko kideak ziren. Berrogeita hamar sabotaje ekintza baino gehiago egitea leporatzen zieten "Rivonia txikia" bezala ezaguturiko prozesuan. Preso berrien artean Mac Maharaj, SACP Hegoafrikako Alderdi Komunistako kidea eta borrokaren zerbitzura aurki zitekeen bururik distiratsuena zegoen. Horrez gainera, MKko zuzendaritzako kidea zen Laloo Chiba ere gutartu zuten. Burkide zintzo eta leial hau kartzelan balio handikoa izan zitzaigun. Wilton Mkwayi ere batu zitzaigun. Hau traizioagatik epaitu zuten epaiketa entzutetsuan. Hala eta guztiz ere, 1960an, egoera nahaspilatsu batean libre joaten utzi zuten. Egoera hau baliatuz herrialdetik ezkutuka irten eta prestaketa militarra jaso zuenez, Rivoniako epaiketaren ondoren, MKko komandante buru izendatu zuten. Eddie Daniels ere gurekin izango zen aurrerantzean. Hau Liberal Partyko kide mestizoa zen eta Alderdiko ekintzailez osaturiko African Resistance Movement talde txikiak buruturiko sabotajeengatik zigortu zuten. Eddie nire adiskiderik onenetako bat izan zen kartzelan.

Aliantza politiko berri hauek izan zezaketen eragina ahuldu asmoz, kartzela-agintariek preso arrunten talde batekin nahastu gintuzten. Talde hura norbait hil edo bortxatu edo armaz lapurtzeagatik zigortutako kriminalek osatzen zuten. Irlako bi talderik (*Bost handienak* eta *Hogeita Zortziak*) ezagunenetako kideak ziren eta gainerako presoak izutzea zuten bizilege. Gihartsuak eta zakarrak ziren, eta euren aurpegietan nabarmentzen ziren orbainak kartzelako mafien artean ohikoak izan ohi ziren aiztozko borrokaldien oroigarriak ziren. Nahasmen bila aritzen ziren: gu borrokara zipotzen, beste presoei janaria kentzen eta gure artean edozein eztabaida politiko

eragozten saiatzen ziren. Haietako bati Bogart deitzen zioten film amerikarretako gogorraren omenez. Walterren ziega aurrez aurre zuen Bogartek, eta lehena kexatu egiten zen bigarrenak goizero bere gosaria emateko exijitzen ziolako. Walter ezetz ezin esateraino estutu zuen izuak.

Talde berezitua ziren eta harrobian ere aparteko multzoa osatzen zuten. Egun batean lanerako abesti baten antzeko zerbaitekin hasi ziren. Izatez kantu ezagun bat zen, eta bertsioa moldatuz letra aldatu zioten: *Benifunani eRivonia?* zioen, esan nahi baitu, “zer nahi zenuen Rivonian?”. Hurrengo esaldiak halako zerbait zioen: “gobernatzen utziko zintuztela uste al zenuen?”. Txilioka eta burla-haizez abesten zuten. Ezbairik gabe, zaindariek adoretuta ari ziren, eta hauek gu nola zirikatzen gintuzten ikusita, gozatu egiten zuten presozainek.

Gure arteko oldartsuenek ausardiaz erantzun nahi izan arren, suari suarekin aurre egitea erabaki genuen. Eztarri gehiago eta hobeak genituenez, batzartu eta erantzuna aztertu genuen. Minutu gutxira *Stimela,* Hego Rhodesiatik datorren tren bat aipatzen duen leloa, abestera jarri ginen. *Stimela* ez da gorazarre politiko bat, baina testuinguru hartan balio hori hartu zuen, trenak armada hegoafrikarrari aurre egitera joandako gerrillariak zeramatzala aditzera ematen zuenez.

Aste batzuetan bi taldeok lana kantuarekin uztartu genuen. Gure abesti bilduma ugaritu egin zen eta ez genuen askorik behar izan hitz eta leloak moldatuta zentzu erabat politikoa zuten abesti ezagunak kantatzeko. *Amajoni* adibide bat zen: ingeles arruntean soldaduak izendatzeko (Johnny) erabilitako deiturarekin egindako hitz-jokoa da. *Shosholoza* ere geureganatu genuen: gudua martxan dagoen tren batekin alderatzen

duen abesti bat da hau (izenburuak, behin eta berriro errepikatuta, tren-soinuaren antza hartzen du). Askatasunaren Agiriaz hitz egiten zuen ereserki bat ere abestu genuen, eta baita Transkeiri buruzko lelo bat ere, zeinaren letrak zioen: “Bi bide daude: Matanzimarena da bat eta Mandelarena bestea. Zein hartuko duzu zuk?”.

Abestuta lanaldia arinago galtzen zen. Zenbaitzuk ahots aparta zuten, eta noizean behin, pikotxa albora utzita, abestiak entzutera geratu nahi izaten nuen. Kantuari dagokionez, beste taldeko morroiek ez zuten guretzat inolako lehiarik suposatzen. Gure moduak nola liluratzen zituen ikusita, guk abestu bitartean isilik mantentzen ziren unea ere heldu zen. Zoritxarrez, zaindarietako batek *xhosa* hizkuntza ulertzen zuen eta kantatzeari uzteko agindu zigun. (Txistuka doinua jarraitzea ere galarazita geratu zen). Une hartatik aurrera isiltasunean lan egiten jarraitu behar izan genuen.

Nik ez nituen beste taldeetako kideak aurkari bezala ikusten; eraldatu beharreko hezur-haragi landugabea ziren. Gutartean Joe My Baby deitzen zuten preso arrunt bat zegoen; azkenerako ANCra batu zitzaigun eta laguntza handikoa izan zen presondegitik beharrezko osagarriak sartu edota ateratzeko.

Egun batean harrobiko zaindarietako batek Bogart modu basatian kolpatu zuela jakin genuen. Ni ez nintzen jipoiaren lekuko izan, baina ondorioak aurrez aurre ikusi nituen. Aurpegian egin zizkioten ebakinek itxura txarra zuten eta korridorean, gerturatu, eta laguntza eskatu zidan. Bere kasuaz arduratzeko prest agertu nintzen.

Jipoi bat agintari gorenenganaino eraman genezakeen gertakaria zen eta eta guk ez genuen kartzelako buruei kontra egiteko argudioak

bilatzeko lanean atsedenik hartzen. Aspaldi ez zela, PACeko kide zen Ganya delako bat makilekin eraso zutela jakin genuen. Abokatu gisara, kartzela-aferen arduradunari gutun bat idatzi nion Ganyaren izenean kexua luzatuz. Gutunari erantzunez, zuzendariaren bulegora deitu ninduten. Kartzelako arduradunekin aurrez aurre eseri nintzen; hauek, alde batetik, halakorik gertatu zenik ukatu egin zuten eta, bestetik, gertaeraren berri nola izan nuen jakin nahi izan zuten. Ganya kolpatu zuen kartzelaria irlatik kanporatu egin behar zutela galdatu nien. Ezetza errepikatzen zidaten erantzun bezala, bere aurkako frogarik ez zegoela esanez. Esanak esan, elkarrizketa izan eta denbora gutxira aipatu zaindaria beste norabaitera lekualdatu zuten.

Auziaren arrakastak adoretuta, Bogartek laguntza eskatu zidanean, kartzelako komandante buruari hitzordua eskatu nion. Biharamunean bulego batetara eraman eta komandanteak gertaera ikertu eta itxi egin zutela jakinarazi zidan.

– Lege-hauste bat izan da –esan nuen. –Gertaera hau epaitegira eraman behar da.

– Inolaz ere ez –erantzun zidan. –Ustezko erasotuarekin hitz egin dugu. Guztia ukatu du. –erantzun zidan.

– Hori ezinezkoa da. Atzo hitz egin nuen berarekin –tematu nintzen.

– Zuk zeuk –esan zuen komandanteak, lotinantari keinu eginez.

Bogart bulegora ekarrarazi zuten. Begiak zapiarekin itsututa zituen. Komandanteak kolpatua izan ote zen galdetu zion. “Ez, *baas*”,

erantzun zuen ahapeka, niri begietara so egitera ausartu gabe. “Ez nau inork jo”. Kexa atzera bota zuten.

“Ongi, Mandela”, amaitu zuen komandanteak, “gertaera itxita dago”. Ni umiliatzea lortu zuen. Ziurrenera, tabakoarekin edo aparteko janariarekin erosita, Bogartek salaketa erretiratu zuen. Une hartatik aurrera, presoaren adierazpen idatzi eta sinatua exijitu nuen, ezein erreklamazio aurrera eraman aurretik.

# – 7 –

1965eko udako egun batez, gosariko zukuan urdai apur bat eta afariko ahian okel freskoa topatu genituen. Biharamunean zenbaitzuk alkandora berriak jaso zituzten. Harrobiko zaindariek eta gure saileko kartzelariek adeitasun apur bat gehiagoz hartzen gintuztela zirudien. Berehala susmoak hartu gintuen, kartzelan ez baita arrazoirik gabeko hobekuntzarik izaten. Hurrengo egunean Nazioarteko Gurutze Gorriaren ordezkaritza baten bisita izango genuela jakinarazi ziguten.

Aparteko aukera zen; aurretiaz jasotako edozein bisita baino garrantzitsuagoa. Gurutze Gorria erakunde errespetagarri eta independentea zen, eta euren txostenek mendebaldeko gobernuetan eta Nazio Batuetan eragina izan ohi zuten. Kartzela-agintariek ere errespetua zioten Gurutze Gorriari. Errespetua diodanean beldurra esan nahi dut, kartzeletako arduradunek errespetua beldur ziotenari izaten baitzioten soilik. Zentzu horretan, oro har, jendearen iritzian eragina izan zezakeen edozein erakunderenganako mesfidati agertu ohi ziren. Ez zieten zilegitasunik aitortzen erakundeok egindako ikerketei, eta, ondorioz, ez zutela haiekiko zertan zinezko eta esanekoa izan uste zuten. Engainatu beharreko kanpotar begiluzetzat zituzten, agintarien helburu nagusia nazioarteko gaitzespena saihestea besterik ez zenez.

Urte haietan guztietan Gurutze Gorria izan zen gure kexak jaso eta erantzun zituen erakunde bakarra. Erakunde hau guretzat ezinbestekoa zen, kartzelan gure protestei ezikusiarena egiten zietenez. Araudiak gure eskakizunei bide emateko prozedura ofizial

bat bideratu behar zela zioen. Xedapen hau betetzen zen, baina ohiko mekanika baten bitartez; larunbat goizetan espetxezainen burua gure sailera txilioka sartu ohi zen: "*Klagtes and Versoeke! Klagtes and Versoeke!*" (Kexak eta eskaerak! Kexak eta eskaerak!). *Klagtes and versoeke-ak* genituenok –ia inortxok ere ez– berarekin hitz egiteko ilaran jartzen ginen. Bataren ondotik besteak, jatekoaren, arroparen edota bisiten gaineko gure kexuak helarazten genituen. Iruzkin bakoitzaren aurrean buruarekin baiestera eta "*Ja, ja*" esatera mugatzen zen kartzelarien burua, "hurrengoa!" esanez amaitzeko. Esaten genionaren oharrik sikiera hartzen zuen. Gure taldeko mintzaide gisa aurkezten saiatzen baginen, "hemen ez ANC ez PAC, ez bata ez bestea! *verstaan*?" (Ulertu?) oihukatzera mugatzen ziren zaindariak.

Nazioarteko Gurutze Gorriko ordezkarien ikustaldiaren aurretik kexu bat zuzendu genion kartzela-aferen arduradunari. Eskutitzak idazteko papera eta arkatza besterik ez zitzaizkigun baimendu. Gainerakoei harrobian eta komunean isil-gordeka kontsulta eginda, guztion artean kexu-zerrenda bat prestatu genuen. Zaindarien buruari ematen saiatu ginen, baina honek zerrenda hartzeari uko egin zion eta idazte hutsagatik kartzelako araudia urratu izana aurpegiratu zigun. Huraxe zen Gurutze Gorriaren aurrean aurkezturiko kexetako bat: gure eskaerei behin eta berriz bizkar ematen zietela.

Bisitaren egunean Gurutze Gorriaren ordezkariarekin hitz egiteko bulegora eraman ninduten. Sasoi hartan Senn jauna delako bat zuen erakundeak ordezkari; orduan Rhodesian bizi zen arren, Suedian, bere sorterrian, kartzeletako arduradun izana zen. Senn adinez mendearen bigarren erdian zegoen eta bere betebeharrean eroso sentitzen ez zela zirudien gizon isil eta urduria zen.

Elkarrizketa ez zuten zelatatu, eta horrek bere horretan, beste bisitekiko funtsezko desberdintasun bat adierazten zuen: gure eskaera eta kexa guztiak ezagutu nahi izan zituen, eta adi-adi entzun ninduen ohar asko hartzen zituen bitartean. Gizon oso adeitsua zen eta adierazitakoagatik eskerrak eman zizkidan. Guztiarekin, lehen ikustaldi hura estu xamarra izan zen, biotako inork ez baitzekien, oraindik, besteagandik zer espero zezakeen.

Gure arropengatik protesta egiteko ahotsa jaso nuen; ez genituela praka laburrak eraman nahi zehaztu, eta horrez gainera, taxuzko jantziak behar genituela, ez genuela galtzerdi eta azpiko arroparik, azaldu nion. Elikadurari buruzko eskakizunak, bisiten araubidea, eskutitzak, ikasketak, soinketa-ariketak egiteko aukerak, lan behartua eta zaindarien jokamoldea zerrendatu nizkion. Inoiz aintzat hartuko ez zituztela jakin arren, gure sendien bizilekuetatik presondegi hurbilenetara lekualdatuak izateko nahiaren gisako eskari batzuk eman nizkion aditzera.

Bilkuraren ostean, ni esperoan izan ninduten eta, bere aldetik, kartzeletako arduradunarekin eta bere taldearekin bildu zen Gurutze Gorriko ordezkaria. Gure eskakizunak irakurri eta arrazoizkoak iruditu zitzaizkionak aipatu egin zituela suposatzen dut. Sennen ikustalditik gutxira, gure uniformeak hobekuntza batzuk izan zituen eta praka luzeak eman zizkiguten. Dena den, Senn ez zen inolaz ere pertsona aurrerakoia, eta Rhodesiako urteek arrazakeriara moldatu zutela zirudien. Nire ziegara itzuli aurretik preso afrikarrok ez genuela ogirik jasotzen gogorarazi nion. Senn jaunak harrituta zirudien eta batzuetan kartzelako zuzendariarenak egiten zituen koronelari begiratu zion. “Mandela, badakizu ogia oso txarra dela zuen hortzentzat”, esan zidan. “Arto ahiak on egiteaz gainera, zuen horzdura indartzen du”.

Ondoko urtetan zenbait hobekuntza lortzeko kemenez borrokatu zuten beste ordezkari liberalago batzuk igorri zituen Nazioarteko Gurutze Gorriak. Erakunde honek eremu ez hain ikusgarri (baina ez horregatik guretzat garrantzia txikiagoko) batean zeregin erabakigarri bat bete zuen: presoen emazte eta senideei maiztasunez dirua ematen zien erakunde honengatik ez balitz, bitarteko faltagatik bisitarik gabe izango lirateke gure kideetako asko.

Robben irlara lekualdatu gintuztenetik burkideak kezkatuta zeuden ikasketekin jarraitzea debekatu zitzaigulako. Lekualdatu ondoren, hilabete gutxira, agintariek, ikasketekin jarraitu nahi zutenek baimen bat eskatu zezaketela jakinarazi ziguten. Gutariko askok bete zuten baimena eta D taldeko preso modura sailkatuta egon arren, onartu egin zitzaien ikasketekin jarraitzeko eskaria. Rivoniako epaiketaren ostean, estatua indartsu sentitzen zen eta ikasteko eskubidea onartzea ez zela arriskutsua ondorioztatu zuen. Gero, baina, zenbait agintari erabakiaz damutu egin ziren. Graduondoko ikasketak baimentzen ez zituzten arren, nire kasuan salbuespen bat egin zuten Pretorian jarri nuen aurrekaria zela-eta.

Gure sailean salbuespena ziren goi-mailako ikasketaren bat zutenak eta, ondorioz gehienek eman zuten izena unibertsitate ikastaroetan. Askok ez zuten bigarren mailako hezkuntzarik amaitu eta, hauek, zegozkien kurtsoak egitea hautatu zuten. Govan Mbeki eta Neville Alexander bezala, goi mailako jakintzak zituztenak zeuden alde batetik; baina baziren oinarrizko hezkuntzako bosgarren edo seigarren urtetik igaro ez zirenak ere. Hilabete batzuk geroago, ia gutariko gehienak ikastaroren bat edo beste burutzen ari ginen. Gauez gure sailak kartzela ez eta ikastetxea zirudien.

Ikasteko pribilegioak baldintza sorta zekarren berekin. Politika eta historia militarra bezalako aztergaiak debekatuta zeuden. Urtetan ezin izan genuen gure familiakoa ez zen inoren dirurik jaso, horrek presorik txiroenak liburuak lortzeko bitartekorik gabe uzten zituelarik. Ikasteko aukera, ezinbestean, norberaren diru-baliabideen menpe zegoen. Kiderik behartsuenei ikasketak ahalbidetzeko liburuak maileguz ematea ere ez zegoen onartua.

Gutartean denak ez ziren ados ordea: ikasteko pribilegioa onartu egin behar ote genuen? Hastapenetan Batasunerako Mugimenduko kide batzuk gure erabateko konpromisoa zalantzan jartzen zuen dohain bat onartzen ari ginela uste zuten. Ikasketekin jarraitu ahal izatea pribilejioa ez eta eskubide ukaezina zela esaten zuten. Abiaburuan ados egonagatik, ezin nuen ikasketei uko egitea onartu. Askatasunaren aldeko borrokalari eta preso politiko gisara egunez egun trebatuago egoteko betebeharra genuela uste genuen eta trebakuntza pertsonalarekin aurrerajarraitzeko eskaini zitzaigun aukera urrietako bat izan zen ikasketena.

Presoek aukera zuten UNISAn (Hegoafrikako Unibertsitatea) izena emateko, edo RRCn, bigarren mailako irakaskuntza amaitu nahi zutenei eskainitako ikastetxe batean. Nire kasuan, Londongo Unibertsitatearen babespean jarraitzeak ondorio kontrajarriak zituen. Alde batetik, Hegoafrikako inolako zerrendatan hautatuko ez lituzketen irakurgai interesgarriak gomendatzen zizkidaten; baina, bestetik, agintariek liburu haietarik asko arriskutsutzat jotzea ekidinezina zen, eta beraz, debekatu egiten zizkidaten.

Liburuak jasotzea erronka bat izaten zen. Hegoafrikako liburutegi bati legeei buruzko liburu bat eskatu eta eskaria onartu ostean hauek

liburua postaz helarazten zuten. Posta-zerbitzuaren gora-beherengatik, kartzelaren kokaleku isolatua zela-eta edo maiz zentsoreen nahitazko moteltasunagatik, ohikoa izaten zen, eskatutako liburua, itzultzeko ezarritako dataren ondotik jasotzea. Halako kasuetan, zentsoreak liburua postaz itzultzera mugatzen ziren, eskatu zuenari erakutsi ere egin gabe. Gero, sistemaren ezaugarriak ezagututa, ohikoa zen lehenengoa inoiz jaso gabe ondoren jaso beharreko liburua jasotzea, adibidez.

Liburuez apartera, ikasketetarako premiazkoak ziren bestelako argitalpenak ere eskatu genitzakeen. Agintariak oso zorrotzak ziren honi dagokionez. Zentsuraren kontrola igarotzea lortzen zuten argitalpen bakanak, kontabilitatea ikasten zuen preso bati bideratzen zizkioten kalkulu-ohar batzuk ziren. Egun batean Mac Maharajek ekonomia ikasten ari zen burkide bati *The Economist* eskatzea proposatu zion. Barrez hasi ginen eta, horrez gainera, *Time* aldizkaria ere eska zezakeela esan genion, *The Economist* bera ere erreportai eta albiste astekari bat zenez. Macek irribarre egin eta kartzelako arduradunek hori ez zekitela esan zuen: liburuak euren tituluengatik epaitzen zituzten. Hilabete geroago *The Economist* jasotzen hasi ginen, eta horrela, guretzat hain garrantzitsuak ziren albisteak irakurtzen. Tamalez, kartzelako agintariek zidorra aurkitu eta harpidetza bertan behera utzi zuten.

Behin gutariko gehienak batean edo bestean matrikulatuta, mahaiak eta aulkiak bezalako gutxieneko bitartekoak ez genituelako kexatu ginen. Eskaera hauek Nazioarteko Gurutze Gorriari aurkeztu nizkion. Agintariek ziega bakoitzean idaztegi antzeko bat eraikitzeko baimena eman zuten. Hau apal modura hormatik bularraren altueran hegal gisara zabaltzen zen ohol bat izaten zen.

Ez zen, presezki, espero genuena. Harrobian egun latz batez lanean aritu ondotik ez ginen zutik ikasteko gauza. Gutariko zenbaitzuk protesta egin genuen. Kathy izan zen, kasu honetan, protesten doinua eraman zuena. Ofizial arduradunari zutik ikastera behartzea inposaketa onartezina baino gehiago zela esan zion; apalak halako malda hartzen zuen, liburuek oholean irrist egiten zutela. Hori frogatzeko, komandante buruak ezusteko bisita egin zuen Kathyren ziegara. Liburu bat eskatu eta apalaren gainean ezarri zuen. Liburua ez zen mugitzen. Kathyri beste bat eskatu eta aurrekoaren gainean ipini zuen. Atzera ere ez zen ezer gertatu. Azkenik, lau liburu utzi zituenean, ikuskizun hura lotsatuta jarraitzen zuen Kathyrengana itzuli zen: "Ez dut ikusten non duen okerra idaztoki honek" esan zuen, ziegatik erretiratzen zen bitartean. Sei hilabete geroago agintariek atzera egin zuten: hiru hankako zurezko aulkitxo bana eman eta idaztegi-apalen altuera jaitsi egin zuten.

Nazioarteko Gurutze Gorriari jakinarazi nizkion kexetako batek zaindarien eskutik jasaten genituen bidegabekeriak aipatzen zituen. Hauek ez zegozkigun lege-hausteak leporatzen zizkiguten; hau da, isolamenduarekin, otorduen murrizpenarekin edota pribilegio galerarekin zigortu zitekeen edozein kartzela-arau haustea leporatzen ziguten. Oro har, funtzionarioek ez zuten arinkeriaz jokatzen, preso zigortuak epailearekin audientzia eskatzeko aukera izaten baikenuen eta salaketa nahikoa larria izatera, Lurmutur Hiriko epaile bat ere ekarrarazten zuten. Ataka horretan, audientzia egiteari uko egiten zioten agintariek. Ni igaroa nintzen esperientzia hartatik Gurutze Gorriaren ordezkariaren aurrean kexa agertu nuenean. Egoerak epe laburrean konpontzera egin zuen.

Irlako gure lehen urtean, eguneroko ariketen ordu erdia kenduta, asteburuak ziegetan sartuta igaro genituen. Larunbatez, patiotik itzuli ostean, korridorearen amaieran zegoen jesarleku batean zaindari batek egunkaria utzi zuela konturatu nintzen. Hau gurekin amultsu agertu ohi zenez, han ez zuela istripuz utzi suposatu nuen.

Preso politikoentzat, prentsa, urrea edo diamanteak edo are janaria eta tabakoa baino baliotsuagoa zen. Albisteak, plano intelektualean, borrokaren lehengai ziren, eta horrenbestez, kontrabandorik preziatuena egunkaria izaten zen Robben irlan. Horixe zen sutsuen desio eta debekatuen genuena. Walter ni neu baino apalduago ikusten nuen egunkaririk gabe. Kartzelako agintariak blokeo erabatekoa ezartzen ahalegindu ziren: ez zuten gure adorea piztu edota kanpo munduko jendeak gugan pentsatzen jarraitzen zuela sinetsaraz zezakeen ezer jakin genezan nahi.

Herriko gaurkotasun politikoaren berri izaten jarraitzea gure eginbeharra zela pentsatzen genuen eta egunkariak irakurtzeko baimena lortzearren gogor eta denbora luzez borrokatu ginen. Hastapenetan hain trebeak ez izan arren, urteekin hauek eskuratzeko modu ezberdinak garatzera iritsi ginen. Harrobirainoko bidaien abantailetako bat zaindariek euren janaria egunkari paperean bilduta eramaten zutela izaten zen. Paper hauek zakarrontzira botatzen zituzten zaindariek, eta guk hartu egiten genituen, zaborrontzitik atera eta alkandorapean gorde ahal izateko euren arreta desbideratuz.

Prentsa lortzeko bide ziurrena eroskeria izaten zen. Informazioa erdiesteko baliabideak, sarri, ez ziren oso etikoak izaten, eta nik gai honetan besterik ez nituen onartzen jokabide hauek. Espetxezainek diru premian zirudien beti eta haien pobreziak nahi genuena eskuratzeko aukera eskaintzen zigun.

Prentsa txatalen bat eskuratzen genuenean hau eskuz esku partekatzea arriskutsuegia izaten zen. Bateren bat egunkari txatalen batekin harrapatuz gero zigor larria ezartzen zioten. Hori saihesteko, gutariko bat guztiei irakurtzeaz arduratzen zen. Usuan Kathy izan ohi zen, baina aurrerago Mac Maharaj ere arduratu zen lan honetaz. Kathy gure komunikazioen arduraduna zen eta informazioa helarazteko sistema burutsuak garatu zituen. Berak irakurtzen zuen kazeta, eta, gero, bakoitzari, albisteetako baten bertsio laburtu bana ematen zigun. Preso bakoitza zegokion berriaren laburpena idazteaz arduratzen zen. Ohar horiek gure artean banatzen ziren lehenik eta beste sailetara kontrabandoan pasatzen ziren gero. Kartzela-agintariek zaintza estutzen zutenean, Kathyk edo Macek berrien laburpen propioa idazten zuten; irakurri ostean, hau desagerraraziz. Ohikoa hau zatitxo ñimiñoetan bihurtzea izaten zen, Kathyk bere *ballie*an, kartzelariek inoiz ikuskatzen ez zuten osasun-ontzian, bota zezan.

Egunkari hura jesarlekuan ikusi nuenean nire ziegatik irten eta korridorearen amaierarantz jo nuen. Bi norabidetan begiratu ondoren berripapera jarlekutik hartu eta alkandorapean sartu nuen. Beste egoera batean nire ziegako txokoren batean ezkutatu eta oheratzeko abisuaren ostean aterako nukeen, baina egun hartan jatorduaren aurretik gozoki bat dastatu zain dagoen haurraren moduan sentitzen nintzen. Halako albiste gosea izanik ziegara heldu orduko ireki nuen egunkaria.

Ez dakit zenbat denboraz bahitu ninduen irakurketak, sor eta lor bainengoen eta ez bainituen oinotsak entzun. Bat-batean, nire ohepean egunkaria ezkutatzeko denborarik eman gabe, ofiziala eta bi zaindari agertu ziren. Bete-betean atzeman ninduten. “Mandela, kontrabandoa edukitzeagatik salatu zaitugu”, esan zidaten.

“Ordaindu egin beharko duzu”. Bi kartzelariek egunkari gehiagoren bila xehetasunez arakatu zuten ziega

Egun pare bat gero, Lurmutur Hiritik etorritako epaile bat heldu zen irlara. Irlan justizia areto gisara erabiltzen zuten Kuartel Nagusiko bulegoetara eraman ninduten. Oraingo honetan, nire auzia oso sinplea izango zela iritzita, agintariek epailea irlara zuzenean ekarrarazi zuten. Ez nuen nire burua defendatu eta hiru eguneko isolamendu eta baraura zigortu ninduten.

Burkide batzuk kontrara esan arren, ez nuen egunkaria utzi zuen zaindariak segada bat prestatu zidanik uste. Auzigelan, kartzela-agintariek berripapera eskuratu nuen moduaz jakiteko galderak egin zizkidatenean uko egin nion erantzuteari. Segada bat prestatu zidatena barrundatu banu, ez nukeen nola erdietsi nuen argitzeko eragozpenik izango.

Zigor-ziegak gure eraikin bereko hegal ezberdin batean aurkitzen ziren. Patioaren beste aldean egon arren, oso urrun zeudenaren irudipena izaten nuen. Isolamendu-araubidean, laguntza, ariketa eta janaria ere kentzen diote presoari: egunean hirutan arroz-ura besterik ez du jasotzen. Hau arroza egosi duten ura izaten da, beste gehigarrik gabe. Horrekin alderatuta, ohiko ahi anoa benetako oturuntza iruditu zitzaidan.

Isolamendu-ziegan pasarazten dizuten lehen eguna izaten da ankerrena. Nola egokitu elikagairik ez irenstera? Norbera maiztasun batzuetara eginda dagoenean, gorputza ez da hauen gabeziara ohitzen. Bigarren egunean gutxi-asko janari gabeziarena gainditua nuen. Hirugarrenean ez nuen inolako goserik. Elikadura eskasia ez da ezohiko zerbait afrikarron eguneroko bizitzan. Nik neronek ere

igaro nituen egun osoak elikatzekorik batere gabe, Johannesburgon egin nuen egonaldiko lehen urtetan.

Aipatua dut jada, nire angelutik, kartzela-bizitzako elementurik arriskutsuena konfinamendu bakartia izaten dela. Ezerk ez du ez hasiera ez bukaerarik; eta norbere buruak, halako egoeran, makurtzera egiten du. Amets bat izan da ala egiaz gertatu da? Edozer zalantzan jartzen hasten da bat. Erabaki zuzena hartu al dut? Balio izan ote du zerbaiterako nire sakrifizioak? Norbera bere burua beste aurkaririk gabe dagoenean ez dago galdera estu hauetatik aldendu gaitzakeen ezer.

Hau esanda, gehitu dezadan giza gorputzak inguruabar aldakorretara egokitzeko gaitasun itzelezkoa duela. Gorputza frogan ipini arren norberak adorea berean mantentzen badu, aitortu ezinezkoak jasatea ere posible dela ohartu nintzen. Gabezien aurrean ideia sendoei eustea da biziraupenaren sekretua: urdaila hutsik izanik ere adorez beteta egotea.

Lehen urtetan gu isolamendu-ziegetara zigortzeko ohitura izan zuten. Errutina gisara arau-hauste ñimiñoengatik salatu eta bakarraldira zigortzen gintuzten: edonor otordurik gabe utz zezaketen alde batera begiratzeagatik edota isolamendura zigor zezaketen zaindari bat ziegan sartzean ez zutitzeagatik. Arauak urratze hutsaren plazeragatik arauhausten zuten PACeko preso batzuk denboraldi luzeak igaro zituzten zigor-ziegetan. Oro har, kartzela agintariek gure jarrera oldarkor eta matxinoarentzat sendabiderik onena isolamendua zela uste zuten.

Ez zuten denbora askorik behar izan ni berriz bakartasunera zigortzeko. Jadanik azaldu dut zeinen nekeza zitzaigun gure kexak helaraztea. Kartzela bera urrun eta bakartuta egoteak arduradunei

inpunitate osoz zigor gintzaketela sinestarazi zien. Gure eskakizunei entzungor eginez zapuztuta sentituko ginela eta protesta egiteari utziko geniola pentsatzen zuten, modu horretan, kanpo-mundua gutaz ahaztu zela sinetsiko genuelarik.

Egun batez, harrobian lanean ari ginen bitartean, komandanteak beste gizonezko baten konpainia zuela ikusi genuen. Lagunetako batek Aucamp brigada jenerala zela esan zidan ahapeka: kartzeletako zuzendaria eta gure komandante buruaren arduraduna (Aucamp hau ez da Pretoria bertako kartzelakoarekin nahastu behar. Hau Rivoniako epaiketan gutaz arduratu zena zen). Elkarrengandik bereizita egon arren norantza berean begiratzeak batzen zituen bi arduradunak.

Morroi indartsu eta txikia zen Aucamp, eta uniforme militarraren ordez trajea zeraman soinean. Bi urtean behin ikuskaritza bidaian etortzen zen irlara. Bisita haietan agintzen ziguten gure ziegetako burdin hesien ondoan tinko eta zutik geratzeko eta bera igarotzean gure preso txartelak erakusteko.

Aucampen ustekabeko agerpena gure kexak aurkezteko aukera bikaina zela erabaki nuen, zenbait konturi konponbidea emateko beharrezko boterea zuenaren aurrean baikeunden. Nire pikotxa utzi eta bi gizonenganantz egin nuen. Zaindariak aztoratu eta nigana hurbildu ziren. Jakin banekien arauak hausten ari nintzena, baina halaber, halako mugimendu baten aurrean zaindariak harrituta geratuko zirenez, ni geldiarazteko ezgauza izangó zirena uste nuen. Eta hala gertatu zen, gertatu ere.

Bien parera heldu nintzenean, kartzelako zuzendaria zurrun zuzendu zitzaidan: “Mandela, ez zaitu inork deitu. Itzuli zure postura”. Ezentzunarena egin eta Aucampi zuzendu nintzaion, gure eskakizunak aditzen ez zituztelako ezohiko neurriak hartzera gonbidatuz. Kartzelako komandanteak hitza ukatu zidan: “Mandela, zure lekura itzultzeko agindu dizut”. Beragana itzuli eta hitzak eta ahotsa neurtuz zera esan nion: “Orain hemen nago. Ez dut atzera egingo”. Aucamp ni entzuteko prest agertuko zelakoan nengoen. Horren ordez, ni hoztasunez aztertu eta zaindariengana bihurtu zen. “Eraman ezazue” agindu zuen pausatuki.

Zaindariek Aucampengandik urruntzen ninduten bitartean nire eskariekin jarraitu nuen. “Itzuli ezazue ziegara”, erantsi zuen komandanteak. Beste behin ere defentsarako aukerarik gabe zigortu ninduten. Oraingo honetan lau eguneko isolamendua ezarri zidaten. Horrek ahaztua nuenez etsipenez jokatzera bultzatu ninduen lezioa gogorarazi zidan: inori ez zaio –eta inori baino gutxiago kartzeletako arduradunei– bere autoritatea jendaurrean zalantzan jartzea gustatzen. Nire kexei erantzuteko bere menpekoa umiliatu beharko zuen Aucampek. Eta kartzela-agintariek erantzun hobea eman ohi zuten zuzenean eta bakarka hurbilduz gero. Robben irlan, aldaketak lortzeko bide eraginkorrena beste presoen itzalik gabe funtzionarioengan eragiten saiatzea zen. Batzuetan zaindariengana gehiegi hurbiltzeagatik zentsuratu egin ninduten, baina edozein kritika onartzeko prest nengoen, gure bizi ohituretan hobekuntzak lortzearren.

## – 8 –

Preso baten bizitzako pertsonarik garrantzitsuena ez da ez justizia ministroa ez kartzeletako arduraduna ez eta zuzendaria bera ere: pertsonarik garrantzitsuena bere saileko zaindaria da. Edonork hotz izan eta burusi bat gehiago nahi badu, idatz diezaizkiola nahi adina gutun ministroari, ez baitu erantzunik jasoko. Kartzela-erakundetako arduradunari eskatzen bazaio, aldiz, sentitzen duela, baina arauen kontra doala erantzungo dio honek. Kartzelako zuzendariak esango du: "Zuri tapakia emanez gero denei eman beharko diet". Baina batek bere zaindariarekin harreman ona izan eta honi eskatzen badio, hau biltegira joan eta burusi bat hartzera mugatuko da.

Kontrako jarrera agertzea gure kalterako izaten zenez, saileko kartzelazainarekin zuzena izaten ahalegintzen nintzen. Zaindarien artean aurkariak bilatzeak ez zuen zentzurik. ANCren filosofiak mundu oro, baita gure aurkariak ere, heztea hobesten zuen. Pertsona guztiak, kartzela funtzionariak barne, aldatzeko gai zirela sinesten genuen, eta horregatik, ahal genuena egiten genuen euren begikotasuna irabazteko.

Oro har, guri emandako tratu bera itzultzen genien kartzelariei. Baten batek jarrera zuhurra erakusten bazuen, gu modu berean agertzen ginen berarekin. Zaindari guztiak ez ziren bihozgabeak, halaber. Hasieratik bertatik ohartu ginenez, onberak ere baziren izan haien artean. Eurekin adiskidetsu agertzea ez zen erraza izaten, beltz batekin adeitasunez jokatzearen ideia orobat gaitzetsi egiten baitzuten. Gure aldeko zaindariak izatea oso baliagarria izan zitekeenez, funtzionario jakin batekin lagunarteko harremanak hastea proposatu nien kide batzuei. Inork ez zuen antzeko zereginik bete nahi izaten.

Harrobian bereziki kontrara agertzen zitzaigun zaindari bat zegoen. Hau benetako arazo bat zen guretzat, harrobian auzi asko eztabaida genitzakeelako, eta, ondorioz, elkarren artean hitz egitea debekatuko ligukeen zaindariak kalte handia egiten zigun. Nire burkideetako bati, gure arteko elkarrizketak eten ez zitzaten, berarekin adiskidetzen ahalegintzeko eskatu nion. Zaindariak gurekin aski zakar jarraitzen zuen bitartean, preso horrekiko jarrera leunduz joan zen. Egun batez, belarretan esertzeko zaindariak bere jaka eskatu zion. Hura onartzea nire burkidearen printzipioen kontra zihoala jakin banekien arren, buruarekin onartzeko keinua egin nion.

Egun gutxira, estalpearen babesera bazkaltzen ari ginela, aipatu zaindaria hurbildu zen. Sobera zuen *sandwich*a bota zigun ingurura: "Hor duzue", esan zuen. Hura zuen berak gurekin adiskidetsu agertzeko modua.

Egoera hark dilema baten aurrean jarri gintuen. Alde batetik soberakinak jaten zituzten animalien mailan jarri gintuen. *Sandwich* hura hartzeak gure duintasuna azpiratuko zuela sentitzen nuen nik, baina goseak ere bageundenez, jateko hura ez hartzeak lagun egiten saiatzen ari ginen zaindaria irain zezakeen. Zaindariaren lagun bihurtzen ari zen burkideak *sandwich* hura nahi zuela ikusi nuen, eta keinua egin nion, hura hartzea baimenduz.

Erabakiak ondorioak izan zituen: zaindariak gurekiko jarrera sosegatuagoa agertu zuen. ANCren inguruko galderak ere egin zizkigun. Kartzela-sistemarentzat lan egiten zuen gizon batek gobernuaren propaganda izaten zuen bazka bakar, eta zuriak itsasora bota nahi genituen terrorista eta komunista batzuk ginela pentsatzen zuen. Apurka apurka gure politika antiarrazista zertan zetzan azaldu

eta eskubide berdintasun eta aberastasunaren birbanaketarako gure helburuez hitz egin genionean, buruan hazka egin eta esan zuen: “Hauek National Partyren proposamenek baino zentzu gehiago dutela dirudi”.

Robben irlako espetxezainen begikotasuna irabazteak gure beharrizan garrantzitsuenetako bat erraztu zuen: komunikazioa. Preso arruntentzat prestaturiko F eta G sailetan bahitutako gure burkideekin harremanetan jarraitzea zeregin garrantzitsua zen. Komunikazioa ezinbestekoa zen gure protesta eta kexuen koordinaziorako. Preso gehiago zeudenez, eta sartu-irtenak sarriagoak izaten zirenez, F eta G moduluetako presoek guk baino informazio gehiago izaten zuten, mugimenduan gertatzen zenaz ez ezik baita gure familiakide eta lagunez ere.

Sailen arteko komunikazioa arauhauste larria izan ohi zen, baina debeku hori hausteko hainbat sistema garatu genituen. Jatekoa ekartzen ziguten presoak komunen sailekoak izaten ziren. Lehen hilabetetan hainbat elkarrizketa izan genituen hauekin eta mezu laburrak ere helarazi genizkien, ahapeka. Hori garatzeko, Kathy, Mac Maharaj, Laloo Chiba eta beste hainbatekin ezkutuko komunikazio komitea sortu genuen. Euren egitekoa informazio truke horiek ahalik eta ongien kudeatzea zen.

Kathy eta Macek diseinatu zuten lehen teknika. Azken hau harrobira egiten genituen joan etorrietan zaindariek erabilitako pospolo kaxak bota egiten zituztela konturatu zen. Ezkutuka hauek jaso eta gordetzen hasi ziren. Macek hauei mezu laburrak gordetzeko bigarren sakonera bat egiten zien. Laloo Chibarena zen, iraganean jostuna izana zenez, hori egiteko ardura. Mezuak modu zifratuan idazten zituen honek, gero bigarren sakoneran gordetzeko. Joe

Gqabik, gurekin zen MKko bigarren burkide batek, pospolo kaxak hartu eta, harrobira bidean, preso arruntak igaroko zirela bagenekien gune estrategikoetan uzten zituen. Hauei, otordua zerbitzatzera etorri zitzaizkigunean, ahapeka azaldu genien asmoa. F eta G moduluetan aurretiaz hautatutako zenbait presok pospolo kaxak jasotzeaz arduratu behar zuten. Erantzunak modu berean jasotzen genituen guk. Sistemak bere akatsak ere bazituen, euria bezalako arrunkeria batek gure planak alferrikaldu baitzitzakeen, baina berandu gabe sistema hobeak garatuko genituen.

Zaindariak arretarik gabe egon ohi ziren uneak baliatzen genituen. Otorduak eta otorduosteak izan ohi ziren aukerarik hoberenak. Geuk zerbitzatzen genituen gure otorduak, eta aldaketa horri esker, sistema berri bat prestatu genuen. Sukaldean lan egiten zuten arrunten saileko kideak plastikoz biltzen zituzten ohar eta mezuak eta janari bidoien beheko aldean kokatzen zituzten gero. Gure erantzunek modu berean egiten zuten kontrako bidea: bilduki berberak baliatuz, sukaldera itzultzen genituen plater pila handiaren azpian ezkutatzen genituen hauek. Ahal beste zikintzen genituen platerok soberakinak ondo barreiatuz. Zaindariek arreta ere deitu ziguten zikinkeriagatik, baina inoiz ez zuten bide hura ikertu.

Harrapatzekotan kartzelako agintariek mezuok ikusi eta dezifratu ez zitzaten kode ezberdinak asmatu genituen. Haietako bat esnearekin idaztea zen. Papera berehala lehortzen zen eta ez zen frogarik geratzen begien bistara. Ziegak garbitzeko desinfektatzailearekin bustita ordea, testua berriz agerraraztea lortzen genuen. Zoritxarrez ez genuen esnerik izaten sarritan. Sistema hau, gure kideetariko bati ultzera bat aurkitzen ziotenean baliatzen genuen, hark bai, hark izaten baitzuen esnea izateko aukera.

Komuneko paper zati txikietan kodean idazten genuen bestela. Paperak txikiak izaki hain ziren ezkutatzen errazak, ohiko mezuak bidaltzeko modurik arruntena bilakatu genuela hau. Kartzelako agintariek ohar hauetako batzuk aurkitu ondoren, papera murrizteko erabaki berezia hartu zuten. Horrenbestez, Govani, eriondoko egonik harrobira igortzen ez zutenez, preso bakoitzarentzat komuneko papereko zortzi txatal karratu zenbatzeko ardura eman genion.

Sistema irudimentsu hauek izan arren, gure gustuko modua sinpleena izaten zen: erizaindegira bidaltzea lortzea. Presondegiak erizaindegi bakarra zuenez, ia ezinezkoa izaten zen han zeudenak bereiztea. Sarritan kartzelako sail ezberdinetatik zetozen presoek areto bera partekatzen zuten. B modulutik zetozenak zein F eta G moduluetako presoak nahastu egiten ziren eta erakunde politikoen, greben, lan erritmoaren murrizketaren edota kartzelako beste edozein gaurkotasunezko gairen inguruko informazioa trukatzen zuten.

Kanpo munduarekin komunikatzeko bi bide ezarri ziren: lehena, zigorra beteta irla uzten zuten presoen bidez; bestea, bisitekin genuen hartuemanean oinarritua. Libertatea irabazten zuten presoek euren arropen artean edo ekipaian garraiatzen zituzten gure mezuak. Bisitariekin arriskutsuagoa izan ohi zen, modu honen bidez eurak ere arriskatzen baikenituen. Abokatuekin hitz egiteko aukera izaten genuenean, zaindariek ez zuten bisitan egoteko baimenik izaten. Hauek miaketarik jasan beharrik izaten ez zutenez, kanpoan norbaiti helarazteko gutun bat ematen genien. Rivoniako epaiketan egin izan genuen bezala, ohar bidez ere komunikatzen ginen abokatuekin. Bisita gelan mikrofonoak egon ohi zirenez, trikimailuetara jotzen genuen: “mesedez, esaiozu...” –une horretan paper bat pasatzen

genien “OTri” idatzirik, zeinak Oliver Tambori esan nahi zuen– “bere murrizpen plana onartzen dudala...” –aipu honetan “zuzendaritza nazionalarena” idazten genuen paperean–.

1966ko uztailean, gure janari bidoiaren beheko aldean itsatsitako ohar baten bidez, kartzelako baldintzengatik protesta egiteko preso arruntek gose greba bati ekitea erabaki zutela jakin genuen. Informazioa ez zen zehatza: ez genekien greba noiz hasiko zen ez eta eskaerak zein izango ziren ere. Haatik, euren motibazioa edozein izanik ere, prest geunden gainerako presoen edozein greba babesteko. Albistea gure artean zabaldu genuen eta hurrengo otordutik aurrera aipatu gose grebaren aldeko baraualdia hastea ebatzi genuen. Gose greba bat ekimen bakar batean oinarritzen da soil-soilik: ez jatean.

Komunikaziotik komunikaziora igarotzen zen denbora zela-eta, preso arruntek ez zuten ziurrenik egun bat edo bi beranduagora arte grebara batu ginela jakin. Alabaina, bagenekien berriak adoretu egingo zituena. Kartzelako agintariek gu ez ginela batu eta haiek horrela zeuden bitartean benetako *gourmet* platerkadez gozatzen ari ginela esango zieten. Ohiko prozedura izan ohi zen; krisi baten aurrean kartzelako arduradunek desinformazio kanpaina bat abiarazten zuten sail batzuk besteen aurka jartzeko asmoz. Kasu honetan, ANCk greba aho batez babestu arren, preso arruntekin espetxeraturiko PACeko kide batzuk ez zuten barauarekin bat egin.

Gure gose grebaren lehen egunean, ohiko anoak zerbitzatu zizkigutenean uko egin genion jatekoari. Bigarren egunean anoak zerbait handiagoak zirela eta ahia barazkiekin lagundu zutela ohartu ginen. Hirugarrenean okel zati mamitsuak gehitu zituzten afaritarako. Laugarren egunean morokilek distira egiten zuten erantsi

zieten koipeagatik; haiez gainera, plateren oinarrian zeuden haragi xerra handi eta barazki freskoak ketan ziren. Irrikak barrenak jaten zizkigun oturuntza haien aurrean. Zaindariek irribarre egiten zuten uko egiten geniela ikustean. Tentaldia handia zen, eta harrobiko lana gogortu egin bazuten ere, gosea lotu egin genuen. Jakin ahal izan genuenez, sail nagusian preso batzuk zorabiatuta esku-gurditan atera zituzten.

Wessels koronelarekin hitz egiteko zuzendaritzako bulegora deitu ninduten. Halako bilerak ez ziren errazak izaten. Nire lagunek ondo zekiten greba bertan behera utz nezan agintariak ni behartzen ahaleginduko zirela. Wessels zuzenean errora joan ohi zenez, gose greba abiarazteko arrazoiez galdetu zidan. Preso politiko gisa, kartzelan gure baldintzak aldatzeko gainerako presoek hasitako gose greba gure *apartheid*aren kontrako borrokaren luzapentzat jotzen genuela azaldu nion. “F eta G moduluetakoek greba zergatik aldarrikatu duten ez dakizue-eta”, erantzun zidan. Auzia ez zela hori, F eta G moduluetako presoak gure anaiak zirela, eta gure borroka zatiezina zela adierazi nion. Purrustada batekin agurtu ninduen.

Biharamunean aparteko gertaeren berri izan genuen: zaindariek, kafetegira joateari uko eginez, boikot propioari ekin zioten. Ez zeuden greban gure aldarrikapenen alde, baina guk halako protesta bat egin bagenezakeen, eurek ere egin zezaketela ebatzi zuten. Elikadura eta bizi-baldintza hobeak eskatzen zituzten. Bi grebek bat egitea gehiegizkoa izan zen kartzela-agintarientzat. Jakin ahal izan genuenez, funtzionariekin batzartu ziren lehenik, eta pare bat egun beranduago, agintariak preso arrunten sailera zuzendu ziren, gose-grebaren aldarrikapenak negoziatzeko hiru ordezkari izenda zitzatela eskatuz. Preso arruntek garaipena aldarrikatu eta greba

bertan behera utzi zuten. Guk, biharamunean, arrunten urratsak jarraitu genituen.

Irlan burutu ziren gose grebetan lehena eta arrakastatsuena izan zen hura. Protesta modu bezala gose grebek ez dituzte emaitza onak izaten. Pertsonalki, protesta horietan ezkutatzen zen logika kixoteskoa zela uste izan nuen beti. Gose greba batek arrakasta izan dezan ezinbestekoa da kanpoko munduak honen berri izatea. Hau horrela izan ezean, inork ezer jakin gabe gosez hiltzera arriskatzen dira. Ondorioz, gose grebaren berriak egunkarietan agertu beharra zuen, beste talde batzuek gure alde presioa egin zezaten gero. Lehen urtetan kanpoko jendeari kartzelan gose greban geundela ohartaraztea ia ezinezkoa suertatzen zitzaigun.

Nik gose greba protesta modu pasiboegitzat nuen. Bestela ere nahikoa oinaze bagenuenok gure osasuna arriskatuz heriotzari aurre egitea suposatzen zuen. Protesta modu aktibo eta militanteagoen alde egon izan naiz beti: lanari edo garbiketari uko egitea edota lan erritmoa jaistea, adibidez. Ekintza hauek kartzelako agintarien aurkakoak ziren, ez geure buruen kontrakoak: legarra behar bazuten guk ez genien emango; kartzelako etxartea garbi manten genezan nahi bazuten, guk zikintzen utziko genuen. Nire iritziz, mota honetako portaerek nahigabetu eta asaldatu egiten zituzten, eta, poztu egiten zituen, aldiz, gu goseak ikusteak.

Ildo horretako erabakiak hartzeko egiten ziren bozketa guztiak galdu egin nituen. Nire burkideek, umorez, otordu bakar bat ere ez nuela galdu nahi esaten zuten. Gose greben alde zeudenek, historia luzeko protesta bitartekoa zela sostengatzen zuten, mundu osotik Mahatma Gandhiren moduko pertsonalitate goretsiek hedatu zutela

gogoraraziz. Alabaina, behin jarrera bat hautatuta, gainerakoen suhartasun berarekin defendatzen nuen. Horrela, kolektiboak onetsitako erabakia babestu nahi ez zutelako, grebetan burkide uzkurrenak konbentzitu behar izan nituen askotan. "Madiba, nik nire janaria nahi dut", esaten zidaten. "Ez dut ulertzen zergatik geratu behar dudan baraurik. Urte luzez eskaini natzaio gure borrokari."

Burkideek ezkutuka jan egiten zuten batzuetan. Arrazoi sinple batengatik genekien hau: gose grebaren bigarren egunetik aurrera inork ez du komunik behar izaten. Hala eta guztiz ere, goiz batez, gutariko bat bainugelarantz joaten ikusi genuen. Espioitzarako barne zerbitzua antolatua genuen ordurako: bagenekien jakin gure kide batzuen konpromisoa ahula zena.

# – 9 –

1966ko uztailean burutu genuen gose grebaren erdian nire emaztearen bisita jaso nuen. Ia bi urte bete ziren lehen bisita jaso nuenetik eta bigarren hau ez egiteko zorian izan ginen. 1964an lehen bisita egin zuenetik presio gogorrak jasan zituen Winniek: poliziak bere neba eta ahizpa jazarri zituen eta agintariek ahalegin guztiak egin zituzten, familiarengandik urrun, bakarrik bizi zedin. Xehetasun gehienak gerora azaldu zizkidan arren, zenbait kontu orduan ezagutu nituen. Ustekabe desatsegin hauetako batzuk aurretiaz ezagutzen nituen, harrobian lan egitetik itzultzean, zaindariren batek prentsa ebakinak nire ziegako ohearen gainean modu anonimoan utzi izan zizkidalako.

Hamaika modu txiki eta doilorren bidez estatuak Winnieren bizitza garrazteko ahal zuena egiten zuen. Bi urtean, kartzelako komisarioen aldetik ezarritako debekuek alde batetik, eta bidaia egitea eragozten zioten bestelako galarazpen ezberdinek bestetik, ez ziguten bisita egiteko aukerarik eman. Abokatu baten bidez jakin nuenez, Winniek baimena lortzean bakarrik ikusi ahalko ninduen. Berrogeita hamarreko hamarkadatik, Winnie, beste emakume batzuekin batera, gobernuaren baimen politikaren aurka oldartu zen eta, horrek, agiria aldean eramateari uko egiten ziola esan nahi zuen. Umiliatuta nahi zuten, argiki, eta berarekin batera ni ere makurtuta nahi ninduten. Alabaina, agintarien jukutria arbuiagarriei oldartzen jarraitzea baino, elkar ikustea garrantzitsuagoa zela pentsatzen nuen. Winniek baimena aldean eramatea onetsi zuen. Faltan sentitzen nuen; Winnie ikusteko beharra nuen. Familiarentzat hil ala biziko gai batzuk eztabaidatu behar genituen gainera.

Winnieren bisita bakoitza arautzen zuten baldintzen zerrenda luzea eta korapilatsua izaten zen. Ezin zuen trenik hartu ez eta autoz bidaiatu ere, eta hortaz, joan-etorria hegazkinez egin behar zuen ezinbestean. Baldintza horrek bidaia asko garestitzen zuen. Aireportutik Caledon Squaren aurkitzen zen Lurmutur Hiriko poliziaren egoitzara joateko biderik laburrena hartzeko eskatzen zioten. Han hainbat agiri sinarazi behar izaten zituen. Itzuleran polizia-etxe berean aurkeztu behar izaten zuen atzera ere, paper gehiago izenpetzeko.

Prentsa ebakin bati esker, Winnie janzten ari zen bitartean poliziaren brigada bereziko agente bat Orlandoko gure etxean indarrez sartu zela jakin nuen. Haserre bizian erantzun zuen Winniek eta morroia logelatik kanporatu zuen. Gertakariaren ondotik, teniente hark eraso bat jasan izana salatu zuen: nik lagun eta kide nuen George Bizosi Winnie defenda zezala eskatu nion, eta hau oso modu trebean aritu zen. Prentsan auziari buruzko aipamen batzuk ikusi genituen, eta burkideek txantxak egin zituzten Winnieren izaera oldarkorra zela-eta. “Dirudienez, ez zara boxeolari bakarra familian, Madiba”, esaten zidaten.

Bigarren ikustaldi honek ordu erdi baino ez zuen iraungo eta kontu asko genituen hitz egiteko. Lurmutur Hirian jasoriko tratuaren laztasunagatik eta irlarainokoa ontziaren sotoan, motorraren keak arnastuz ondoezik egin behar izan zuelako, aztoratuta heldu zen Winnie bisitara. Niretzat apaintzen neke asko hartu arren, betazpitsu eta argal ikusi nuen.

Nesken heziketa, gure amaren osasuna –orduko hartan ez zen oso ona – eta gure egoera ekonomikoa izan genituen mintzagai. Garrantzitsuena Zeni eta Zindziren heziketa zen. Indioentzako ikastetxe batean matrikulatu zituen Winniek. Eskola hartan ikasle

afrikarrak onartzea legea urratzea zela esanez zuzendariari presio egiten zioten agintariek ordea. Zeni eta Zindzi Swazilandiako barnetegi batetara bidaltzeko erabaki zaila hartu genuen. Bi neskatilak eguneroko poz iturria ziren Winnierentzat eta kolpe gogorra izan zen hau. Ni han heziketa hobea jasoko zutela pentsatuz kontsolatzen nintzen, baina Winniek kezkatzen ninduen. Bakarrik sentitzen zelako, eta lagunak izatearen aitzakiapean, bere borondateaz baliatuko ziren pertsonen adiskidetasuna bilatuko zuenaren beldur nintzen. Ezen, guztiaren gainetik, Winniek ez zuen inoiz jendearen motibazioen gaineko mesfidantzarik agertzen.

Gure elkarrizketen mugei iruzur eginez, familiaz kanpoko gaiez hitz egiteko gure arteko kodean bakarrik ulertzen ziren izenetara jo genuen. Winnieri benetan nola zihoakion jakin nahi izan nuenean, honela galdetu nion: “Ngutyanaren berririk izan duzu? Nola doakion badakizu?”. Ngutyana Winnieren klanaren izenetako bat da. Kartzelako agintariek ez zekiten hori. Ngutyanaren bizitzaren zertzeladak ematen nahi beste luza zitekeen Winnie horrela. Zaindari batek Ngutyana nor zen galdetuz gero lehengusina bat zela erantzungo genuen. Kanpoan ANCren ordezkaritzaren berri izateko gure elizaz galdetzen nion. Winniek “elizan” gauzak nola zeuden jakinarazten zidan, eta, nik, orduan, apaizengatik galdetzen nion. “Zer moduz abade berriak? Sermoiak onak dira?”. Inprobisatu egiten genuen eta, hartara, informazio kopuru handia trukatzen genuen.

Bisitaro, zaindariak “Denbora amaitu da!” oihukatzen zuenean, minutu gutxi batzuk besterik ez genituela egin iruditzen zitzaidan. Agurtzeko leiarra musukatu nahi izaten nuen arren, hau egiteko gogoa lotu egiten nuen. Kartzelariek nola eramaten ninduten ikusi ez zezan, ni baino lehenago abia zedila desiratzen nuen.

Zaindarien aurrean bihozmina ezkutatzen saiatzen zenean, agurra murmurikatzen ikusten nuen.

Bisitaren ostean elkarrizketaren xehetasun guztiak gogoratu nituen berriz niretzat: Winniek soinean zeraman arropa, esan zuena, nik berari aipaturikoa. Gero, trukatu genituen gaietara itzulita, gutun bat idatzi nion zenbat maite nuen adieraziz, gure harremanaren indarra erakutsiz, bere ausardia aipatuz. Winnieri idatzitako gutunak, maitasun gutunak ez ezik, beharrezko zuen sostengua helarazteko nuen bitarteko bakarra ziren.

Bere bisita jaso ostean, Lurmutur Hirira itzultzean, polizia etxean aurkeztu ez eta bere helbidea emateari uko egin ziolako salatu egin zutela jakin nuen. Galdera horri lehenago transbordadorean bertan erantzun zion arren, itzulian berriro egin zioten. Uko egin zion berriz erantzuteari, lehendik ere esana zuela gogoratuz.

Atxilotu eta berehala fidantzapean aske utzi zuten. Epaitu eta urtebeteko kartzela zigorra ezarri zioten; hau lau egun beranduago baliogabetu zuten. Honen guztiaren ondorioz, kaleratu egin zuten gizarte-laguntzaile gisara lortu zuen bigarren lanetik eta bere diru-sarreren iturri nagusia galdu zuen.

Nire erresistentzia garaitzeko saiakeran, estatuak bere eskuetan zegoen guztia egin zuen. Aukeran zituen modu posible guztietan makurtu nahi ninduen. 1966ko amaiera aldera, Transvaaleko Abokatuen Elkargoko kideek, Justizia ministroaren eskariz, ni elkargotik kanporatu eta nire lan-jarduna oztopatu asmoz, nire aurkako mozio bat aurkeztu zuten, Rivoniako epaiketan zehar publiko egin nituen ideiak errefusatuz. Ez zirudien Desafio Kanpainaren osteko lehen porrotagatik abailduak.

Hasita zeudela izan nuen elkargoak nire aurka abiarazitako prozeduren berri. Erakunde oso atzerakoia zen Transvaaleko elkargoa eta defendatzeko aukerarik izango ez nuela suposatu zuten une batean jo nahi zuten nire aurka. Robben irlako preso batentzat ez da erraza epaimahai baten aurrean nork bere buruaren defentsa egitea, baina hori zen, hain zuzen ere, egin asmo nuena.

Nire aurka aurkeztutako mozioari erantzutea erabaki nuela jakinarazi nien agintariei eta neroni arduratuko nintzela defentsaz. Hau baldintza egokietan prestatu ahal izateko, mahai eta aulki bana eta argi egokia beharko nituela esan nien kartzelako arduradunei. Halaber, legeetan espezializatutako liburutegi batetarako sarbidea ere eskatu nuen eta, ondorioz, Pretoriara aldatzea exijitu.

Nire estrategia kartzela-agintariak eta auzitegiak, hauek betetzeko zailtasunak izango zituztela jakinik, lege-eskaerekin trabatzea zen. Gortearen aurrean nire defentsa propioa egitea erabaki izanak kezka piztu zien agintariei, gertakariari lagunduko liokeen publizitateak, oraindik, beti defendatu nituen ideia berberengatik borrokatzen jarraitzen nuela salatuko baitzuen.

Euren lehen erantzuna izan ohi zen: “Mandela, zergatik ez duzu defendatuko zaituen abokatu bat bilatzen? Kasuaz behar bezala arduratzeko baldintzak izango ditu. Zertarako hartuko duzu hainbeste neke?”. Tematu egin nintzen eta Auzitegi Goreneko erregistro buruari beharrezko artxibo, dokumentu eta liburuak eskatu nizkion, akusazioaren lekukoen zerrenda eta euren testigantzen inguruko informazioarekin batera.

Gutun bidez erantzun zidaten, nire eskariak bete aurretik, gorteak defentsaren izaera ezagutu behar zuela esanez. Berezia zen jokaera

hura. Prozesua hasi aurretik abokatu batek eramango zuen defentsa ildoa jakin asmo zuten? Epaimahaiaren aurrean jarri aurretik ezin da defentsa zertan oinarrituko duen jakiteko abokaturik bortxatu. Afera paperak prest zituztenean, eta ez lehenago, argituko zela jakinaraziz idatzi nien berriro.

Hau izan zen Goreneko erregistro buruarekin eta estatuaren abokatuarekin (Transvaaleko elkargo profesionala ordezkatzen zuen) izan nuen posta-truke oparoaren hasiera. Nik ez nuen nire inongo eskakizunetan atzera egiteko asmorik eta agintariek ere jarrera moldagaitz bera erakutsi zuten: ez ninduten harrobian lan egitetik salbuetsi, ez zidaten mahai eta aulkirik eman eta ezingo nuen Pretoriara joan liburutegian beharrezko kontsultak egitera.

Elkargoa, bere ordezkariak eta erregistro burua, eskaera gehiagorekin estutu nituen eta eurek ukoan gotortuta jarraitu zuten. Azkenerako, hainbat hilabete eta zenbait gutunen ondoren, zalaparta handiegirik sortu eta arauzko oharrik jaso gabe, afera bertan behera utzi zuten. Aferak espero baino dimentsio handiagoa hartu zuen. Ez nuela ekimena hartuko edo defendatzeko bitartekorik ez nuela izango pentsatu zuten. Oker zeuden.

Abokatuaren elkargoarekin izandako aferak lortutako oihartzunaren berri sasoi hartan egunero egunkari bat jaso ohi genuelako izan nuen. Sasoi hura egunero bizilekura eraman izan bagintuzte bezala izan zen. Izan, berez, horrela zen.

Gauez gu zelatatzeaz arduratzen zen zaindaria Jehovaren lekuko baketsu bat zen. Ondo moldatzen zen Macekin. Gau batez Macen ziegaraino hurbildu eta prentsako lehiaketa batean parte hartu nahi zuela aipatu zion. Lehiaketan aurkeztu beharreko testua prestatzen

lagunduko ote zion jakin nahi zuen; lagunduz gero ordainsariren bat izango zuela iradoki zion funtzionario zaharrak. Macek hitza eman eta epemuga amaitu aurretik saiakera bat idatzi zion. Bi asteren buruan asaldatuta topatu genuen zaharra: sariketan finalista izendatu omen zuten. Idatz ziezaiokeen beste saiakera bat Macek? Zaindariak oilasko erre bat eskaini zion ordainetan. Aztertuko zuela erantzun zion honek.

Biharamunean Macek egoeraren berri eman zigun Walter eta bioi. Walterrek janaria onartzera animatu zuen Mac, baina nik, aldiz, ulertzen nituen bere zalantzak. Zaindariengandik tratu berezia jasotzen zuela eman zezakeen. Gau hartan zigarreta pakete batengatik manatua onartzen zuela esan zion. Zaharra ados agertu zen eta zigarreta pakete erosi berri batekin aurkeztu zen hurrengo gauean.

Goizean zaindaria nahi zuen lekuan zeukala azaldu zigun Macek. Ez genekien nola egin zuen. “Bere hatz-markak ditut zigarreta paketean”, argitu zigun Macek. “Xantaia egiteko baldintzetan nago”. Walterrek jukutria hura moralgabea zela erantzun zion. Nik ez nuen Macen jarrera kritikatu, baina xantaia zeren truke egin asmo zuen jakin nahi nuen. Macek bekaina kakotu zuen: “Egunkarien truke”. Walter eta biok elkarri begira geratu ginen. Robben irlan prentsa irakurtzen nik adina gozatzen zuen bakarra Walter zela uste dut. Macek eztabaidatua zekarren bere egitasmoa komunikazioen ardurapean zegoen batzordearekin. Nahiz eta Macek erabilitako teknikarekiko Walterrek eta biok gure eragozpenak izan, ez genuen erabakita zegoena geldiarazteko ezer egin.

Gau hartan bertan Macek zigarreta paketean bere hatz-markak zituela esan zion zaindariari, eta elkarlanean aritu ezean, bere nagusiaren aurrean salatuko zuela. Kaleratua izateko eta pentsiorik

gabe geratzeko aukeraren aurrean izuak jota, Walterrek eskatuko zion edozer egiteko prest agertu zen espetxezaina. Ondoko sei hilabetetan, lekualdatu zuten arte, zaindari zaharrak egunero eman zion egunkaria Maci. Honek informazioa laburbildu eta paperezko zati txiki bakarrera murrizten zuen. Eskuz esku gure artean zabaltzen genuen hau. Tamalez, zaindariak ez zuen lehiaketa irabazi.

Kartzelan bi egiteko genituela esan genezake: kareharria erauztea eta eztabaidatzea. 1966 inguruan, zaindarien jarrera lasaitu egin zen eta *laissez faire* filosofiara egin ziren. Nahi beste hitz egin genezakeen, lan egiten jarraitzen genuen bitartean, betiere. Lauzpabost gizoneko talde txikitan batu eta bizitzaz eta haraindiaz hitz egiten ematen genuen eguna. Garrantzia handieneko gaiez eta funtsik batere ez zutenez etenik gabe aritzen ginen.

Bahituta egoteak izan dezakeen alde erakargarri bakarra, pentsatzeko denbora sobera izatea da. Norbera borroka betean denean, eta begien kliska bakarrean eraldatzen den egoeraren aurrean erantzutera behartua ikusten denean, oso gutxitan izaten du bere erabakiez edo hautatutako politikaren ondorioez arretaz hausnartzeko aukerarik. Kartzelak denbora eskaintzen du –beharrezkoa baino askoz gehiago– egin denaz edo egin ez denaz hausnartzeko.

Etenik ez zuten eztabaida politikoetan katramilatuta geunden beti. Batzuk egun bakarrean ebazten genituen; bestetzuk urtetan eztabaida iturri izaten jarraitzen zuten. Beti izan dut gogoko eztabaida, eta gustura hartzen nuen parte haietan. Gure lehen eztabaidetako bat, eta denboran zehar gehien luzatu zena, ANCk eta Alderdi Komunistak izan beharreko harremanei buruzkoa zen. Gutako batzuk, bereziki herrialde komunistetan ariketa militarrak jaso zituzten MKko gudariek, ANCk eta alderdiak bat eta bera izan behar zutela uste

zuten. Govan Mbeki eta Harry Gwala bezalako ANCko burkide zaharrenetariko batzuk ere bat egiten zuten iritzi honekin.

Alderdia ez zen erakunde berezitu bat Robben irlan. Kanpoan ANC eta komunistak bitan aritzen ziren bezala, kartzela barruan bereizketak ez zuen zentzurik. Gaiari zegokionez nire iritziek ez zuten aldaketarik nozitu urte haietan guztietan. Bere helburuekin bat egiten zuten guztiak ongi hartzen zituen masa askapenerako mugimendua zen ANC.

Denborarekin, ANCren eta Alderdi Komunistaren gaineko eztabaida garraztuz joan zen eta gutariko batzuk modu bat proposatu genuen eztabaida hau argitzeko: Lusakan ezarri zen ANCren erbesteko erakundeari idaztea. Lusakara nire gutun batekin bidaliko zen eztabaidari buruzko hogeita bi orriko dokumentu sekretu bat prestatu genuen. Ariketa arriskutsua zen antzeko dokumentu bat prestatu eta bidaltzea. ANCren eta alderdiaren arteko banaketa baieztatu egin zuen Lusakak eta, azkenerako, eztabaida indargabetu egin zen.

Eztabaida politikoan beste aztergai errepikakor bat ANCko liderrak langile klasekoak bakarrik izan ote zitezkeen izaten zen. ANC, funtsean, langilez osaturiko masa erakunde bat zenez, liderrek langile-klasekoak izan behar zutela defendatzen zuten zenbaitzuk. Nire iritziz, buruzagien jatorria *a priori* zehaztea bezain antidemokratikoa zen liderrak intelektual burgesak bakarrik izan zitezkeela adieraztea. Mugimendua antzeko baldintzetan tematu izan balitz, bere buruzagietako asko, Luthuli agintaria, Moses Kotane edota Dadoo doktorea bezalako gizonak adibidez, ez lirateke inoiz hautatuak izango. Iraultzaileak gizarte-klase guztietatik eratortzen dira.

Eztabaida guztiak ez ziren politikoak izaten ordea. Erdaintzea zen eztabaida handiak piztu zituen beste gaietako bat. Gure artean bazen, erdaintzea, xhosek eta bestelako tribuek egiten zuten bezala, premiagabeko mutilazio bat zela esateaz gainera, ANCk erauzi asmo zuen tribalismo mota batetara itzultzea zela pentsatzen zuenik. Ez zen oinarririk gabeko iritzia, baina gure artean erdaintzea gure kulturaren berezko errituala zenaren ustea zen nagusi. Eta ni ere ados nengoen; osasuntsua izateaz gainera, ondorio psikologiko positiboak zituela uste nuen. Taldearen kohesioa indartzeko erritu bat zen eta balore eraikitzaileak sustatzen zituen.

Eztabaidak urte luzez iraun zuen, eta presoen zati handi batek erdaintzearen alde egin zuen modu zuzenean. Kartzelako erizaindegian lan egiten zuen eta aurrez *ingcibi* gisa jardun zuen preso batek ezkutuko erdainkuntza gune bat antolatu zuen. Han erdaindu zituzten gure saileko preso gazte asko. Ebakuntzaren ostean erdainduentzat festa txiki bat antolatzen genuen te eta gailetekin; ohiturak agindu legez, zeremoniaren ondotik egun bat edo bi mantapean alferkerian edota paseatzen eman ahal zuten hauek.

Behin eta berriro itzultzen ginen Afrikako tigreen gaiara. Batzuk mito bat zela esaten zuten, oro har tigreak Afrikan bizi zirela onartutzat ematen zen arren, jatorriz Asiakoak eta Indiar azpikontinentekoak zirelako. Leopardo asko zeuden Afrikan, baina tigrerik ez. Tigreak jatorriz Afrikakoak zirela argudiatzen zuen aurkako taldeak, eta oraindik ere gutxi batzuk izan bazirela defendatzen zuten. Bazen oihandi afrikarretan katukietan eder eta ahaltsuena beren begi propioekin ikusi izana baieztatzen zuenik ere.

Nahiz eta gure garairako Afrikan tigrerik geratu ez, nik xhosa hizkuntzan “tigre” esanahia zuen hitz bat izan bazela uste nuen, eta ondorioz, uneren batean kontinentean aipatu katukiak izan zirela defendatzen nuen. Bestela, zer dela-eta eman zioten izen bat ez zegoen zerbaiti? Gaiaren jiran itzulinguruka aritu ginen, Macek, duela ehunka urte, hegazkinik izan aurretik, “airean hegaldatzen den aparatu” esan nahi zuen hitz hindi bat bazela adierazi zigun arte. Eta horrek ez zuen, mendeak atzera, Indian hegazkinik izan zenik esan nahi.

## – 10 –

Harrobian gure zaintzaz arduratzen zen zelatariarentzat goitizena asmatu genuen: *"zithulele"*, gizon lasaia. Ahapeka hitz egiten zuen gizon patsadatsu bat zen. Lanean ari ginenean gurekiko tarte bat gordetzen zuen, eta emandako agindua betetzen jarraitzen genuen bitartean ez zirudien gainerako guztia batere axola zitzaionik. Paletan bermatuta solasean ikusiagatik, ez zigun inoiz irainik zuzendu.

Bere jarrerari merezi bezala erantzuten genion. Egun batean gugana hurbilduta eskaria egin zigun: "Jaunok, euriteek errepideetako marrak ezabatu dituzte eta gaur hogei kilo kare beharko ditugu. Lagun gaitzakezue?". Garai hartan oso lan gutxi egiten genuen arren, gizakiei gutxieneko adeitasunez hurbiltzen zaien gisan etorri zitzaigunez, atsegin handiz, gizon hari laguntzea erabaki genuen.

Udaberri hartan agintariekiko harremanetan desizozte bat eman zen, ordura arte irlan nagusi izan zen diziplina zorrotza bigunduz: presoen eta zaindarien arteko tentsioa ere lasaitu egin zen ondorioz.

Sosegu hark ez zuen asko iraun ordea. Iraileko goiz batean modu zakarrean amaitu zen. Harrobiko hormaren kontra bermatuta utzi berri genituen pikotxak eta palak eta bazkaltzeko etxolarantz abiatu ginen. Preso arruntetako bat janariaren bidoiarekin hurbildu eta ahapeka "Verwoerd hil da" esan zigun. Hori izan zen guztia. Bolbora-sua legez hedatu zen albistea gure artean; sinetsi ezinik begiratzen genion elkarri. Zaindariei ere begiratzen genien aitzitik; hauei erreparatuta ez zirudien ezer berezirik gertatu zenik.

Ez genekien nola hil zen lehen ministroa. Gerora parlamentari zuri ez oso ezagun batek labankadaz hil zuela jakin genuen, eta gure artean, balizko motibazioez genituen susmoak partekatu genituen. Verwoerdek afrikarrak animalien azpitik geundela pentsatu arren, ez zigun poz berezirik eragin bere heriotzak. Ez ANCk eta pertsonalki neuk ere ez, inoiz ez genuen hilketa politikoa defendatu; aurkariari aurre egiteko modu oso antzinakoa zela uste genuen.

Verwoerd *apartheid* handiaren arkitekto eta teoriko nagusia izan zen. Bantustanen sorrera eta Bantu Hezkuntza legea sutsuki defendatu zituen. Hil aurretik, 1966ko hauteskunde orokorretarako National Partyren hautagai nagusia izan zen. Hauteskunde haietan, *apartheid*aren alderdiak lehendik zeukan gehiengoa indartu zuen 126 eserlekurekin. United Partyk 39 lortu zituen eta Progressive Partyk, bere aldetik, bakarra.

Irlan hainbestetan gertatu bezala, albiste politiko garrantzitsuenen berri gure zaindariek baino lehenago izaten genuen. Biharamunean, alabaina, agerian geratu zen espetxezainak jakinaren gainean zeudena, euren haserrea guk ordaindu baikenuen. Horrenbestez, hilabetetako barealdiaren ostean tentsioa indar bizienaz itzuli zen. Namibian SWAPOren aldetik –ANCren erakunde aliatu bat– polizia-indarren aurkako gerrillari erasoen bat-bateko agerraldiak ere lagundu zuen gure arteko urduritasuna pizten. Gobernuak gure ahalmen militar ernatu berria estatuburua hiltzeko bezain ahaltsua zela pentsatzen zuelako harro sentitu beharko ginatekeela suposatzen dut; euren susmoek pentsamolde hertsi eta laburreko gizon haien ziurgabetasuna besterik ez zuen islatzen ordea: arazo guztien errua euren aurkariari, ANCri, leporatzen zioten, ez euren politika okerrari.

Ez zen erabaki ofizialik egon, baina irlara heldu ginenen jasan genuen giro itogarri eta zapaltzailea berreskuratu nahi zuten. “Gizon Lasaia” zorrotzagoa zen beste zitalago batengatik ordezkatu zuten. Van Rensburg izena zuen eta irlara presidentea hil eta hogeita lau ordutara hegazkinez heldu zen. Bere aurretiko balentrien ospearekin zetorren, izan, presoen artean, bere izena basakeriaren sinonimo baitzen.

Van Rensburg gizon handi eta basatia zen eta oihuka hitz egiten zuen. Bere lehen lanegunean besagainean gamma-gurutze bat tatuatuta zeramala ikusi genuen. Guztiarekin, ez zuen bere krudelkeria erakusteko ikur laidogarri hura behar izan. Bere lana gure bizimodua are gehiago zailtzea zen, eta horretara eman zen gogo betez.

Hurrengo hilabetetan, Van Rensburgek insubordinazio edota alferkeriagatik salatuko gintuen banan-bana. Goizero, gainerako zaindariekin arratsalde hartan nor salatuko zuen adosten zuen. Beldurrak gugan habia egitea helburu zuen politika selektiboa zen; egunean zehar presoak egindako lana aintzat izan gabe hartzen zen erabakia. Gure ziegetara atzera urrats nekatuz zuzentzen ginenean, Van Rensburgek zerrenda bat irakurtzen zuen: “Mandela (edo Sisulu, edo Kathrada), atzerapenik gabe zuzendariaren bulegoan ikusi nahi zaitut”.

Orduz gero, irlako administrazio-auzitegia aparteko orduak egiten hasi zen. Erantzun modura gure batzorde propioa sortu genuen. Batzorde hau Fikile Bam, Mac Maharaj eta hiruok osatu genuen. Macek lege ikasketak eginak zituen eta agintariak estutzea gustuko izaten zuen. Fiks, gure saileko presoen batzordeko ordezkaria, azkarra eta baliabide handikoa zen, eta abokatu titulua eskuratzeko bidean

zen. Lege-batzordearen egitekoa irlako administrazio-auzitegiaren aurrean gure burkideei nola jokatu behar zuten aholkatzea zen.

Ezin zen Van Rensburg inteligentea zenik esan, harrobian esklabuen ugazaba moduan aritu arren auzitegian menderagarria izan eta menderatu egiten genuelako. Berarekin zuzeneko eztabaidak saihestea zen gure estrategia, prozesuan, bere salaketak ukatuz, funtzionario apur bat jantziagoen aurrean defentsa garatzeko aukera gehiago izaten baikenituen. Administrazio-auzitegian presidentearenak ere egiten zituen epaileak irakurri ohi zuen akusazioa. “Harrobian gaixoarena egitea”, adibidez. Hau entzutean Van Rensburgi irribarrea pizten zitzaion aurpegian. Nire kideei aholkatu nien bezala, salaketa irakurtzen amaitzen zutenean, “ aferaz xehetasun gehiago” eskatzera mugatzen ziren. Salatuek hartarako eskubidea zuten, eta eskaria ohiko izatera igaro zen arren, Van Rensburg zer esan jakin gabe uzten zuen ia beti. Horren aurrean gorteak bilkura jaso behar izaten zuen “argibide gehiago” izan artean.

Mendekari eta zekena zen handian. Harrobira jatekoa heldu eta bazkaltzera esertzen ginenean –zurezko mahai txiki bat genuen sasoi hartan horretarako–, Van Rensburgek une hura hautatzen zuen gure otorduaren ondoan txiza egiteko. Zuzenean janarian txiza egiten ez zuelako eskerrak eman beharko genizkiola suposatzen dut, baina hala eta guztiz ere, bere aurkako kexa aurkeztu genuen.

Preso batek bere zaindaria mendekatzeko duen modu bakanetakoa umorera jotzea izaten denez, Van Rensburg gure hizkirimiri askoren jomuga bilakatu zen. Gure artean “Maletatxo” izengoitia eman genion. Zaindarien fianbrerak “maletatxo” izena izan ohi zuten. Hauek eramateko ardura presoren bati esleitu ohi zioten, horren

ordainetan otorduan *sandwich* erdia emanez. Guztiok uko egiten genion Van Rensburgen "maletatxoa" eramateari, eta hortik goitizena. Zaindari batentzat umiliagarria izaten zen, konfidantzazko presorik izan ezean, bere burua fianbrera eramatera behartuta ikustea.

Egun batez, Van Rensburgi erreferentzia eginez Wilton Mkwayik "Maletatxo" deitu zion bere aurrean.

– Nor da "Maletatxo"? –oihukatu zuen Van Rensburgek. Wilton isilik gelditu zen une batez.

– Zu –argitu zuen gero.

– Zergatik deitzen nauzue horrela? –galdegin zuen Van Rensburgek. Wiltonek isilune bat zeharkatu zuen.

– Esadazu- estutu zuen Van Rensburgek.

– Zuk zeure "maletatxoa" eraman behar izaten duzulako –esan zion Wiltonek. –Preso arruntak beraien zaindarien "maletatxoak" eramateaz arduratzen dira, baina guk uko egiten diogu zeurea eramateari. Horregatik "Maletatxo".

– Maletatxo ez, Dik Nek izena dut amaitu zuen Van Rensburgek, sutu gabe erantzuna neurtuz.

Une batez isiltasuna egin zen berriro eta barrez hasi ginen. Afrikaans hizkuntzan Dik Nek-ek "lepo potolo" esan nahi baitu; eta burugogorra eta zurruna den norbaiti ezartzen zaio deitura hori. "Maletatxo", suposatzekoa da, motzegia zen berriz iraindu zutela

ulertzeko.

Harrobian, beste egun batez, Afrikako balizko tigrearen eztabaidari heldu genion berriz. Ezin genuen lehengo askatasun berberaz aritu, baina hala eta guztiz ere, laneko uneetan kalakari heltzen genion.

Andrew Masondo zen tigreak afrikar jatorririk ez zuena indar gehienez defendatzen zuenetariko bat. Masondo Fort Haren irakasle gisara aritua zen eta Lurmuturreko ANCko buruzagietako bat zen. Iragarrezina zen bere jokamoldeetan eta kontinentean inoiz ez zutela tigre bakar bat ere aurkitu baieztatzen zuen suharki. Eztabaida berotu ahala pikotxak eta palak alboratzen joan zen jendea. Honek zaindarien arreta deitu zuen eta lanera itzul gintezela agindu ziguten. Baina eztabaidara bilduegiak ginen eurei jaramon egiteko ere. Azkenean, *Maletatxo* hurbildu eta nekez menderatzen zuen ingelesez baldarrean "hitz asko baina denok lan ez!" marmaratu zigun.

Irri karkailaka ari ginenez ez genituen laneko erremintak hartu. Maletatxoren akats gramatikala ikaragarri barregarria iruditu zitzaigun guztioi. Maletatxori ez zion graziarik egin baina. Kartzelako komandante buruari dei egiteko agindu zuen.

Kellerman minutu gutxira heldu zen eta gutxi-asko lehen bezala aurkitu gintuen. Kellerman berria zen irlan, eta testuinguru hartara egokitzeko ahaleginetan zebilen oraindik. Zaindarietako batek Andrew Masolo eta biok lanari itzurika ibili ginela esan zion, eta salaketa jarriko zigula hargatik. Kellermanen aginduz, eskuburdinak jarri eta zigor-ziegetan itxi gintuzten.

Une hartatik aurrera Maletatxok niganako arrangura berezia erakutsi

zuen. Egun batean harrobiko hegalik urrunenean Fikile Bam eta bion lana zelatatzen sumatu genuen. Prestutatsunez ari ginen, baina sasoi hartan bi-biok lege ikasketak burutzen genituenez, bart irakurritakoa eztabaidatzen ere ari ginen. Eguna amaitzean, Van Rensburg gure aurrean paratu zen eta "Fikile Bam eta Nelson Mandela, zuzendariaren bulegoan ikusi nahi zaituztet" esanez zuzendu zitzaigun.

Lotinantaren aurrera bideratu gintuzten; bera zen kartzelako zuzendaria. Ozen azaldu zuen Van Rensburgek: "Gizon hauek gaur ez dute lanik egin. Nire aginduak hautsi dituzte eta salatu egin nahi ditut". Tenienteak gure defentsan zerbait argudiatu nahi ote genuen galdetu zigun. "Tenientea", erantzun nion, "salaketa ukatzen dugu. Prestuasunez egin dugu lan eta, gainera, gure defentsarako funtsezkoa dena, egindako lanaren frogak ditugu". Tenienteak burla-doinuz erantzun zigun: "Guztiek eremu berean egiten duzue lan. Zeren frogak ote dituzue?". Fiks eta biok besteengandik aldenduta aritu ginela azaldu nion, eta egindakoaren berri eman geniezaiokeela, hala nahi balu. Maletatxok, modu lañoan, besteengandik aldenduta aritu ginela aitortu zuen eta tenienteak gure lana bere beregiz ikusi nahi zuela deliberatu zuen. Harrobira itzuli ginen horrenbestez.

Lanean aritu ginen azalerarainokoa oinez egin genuen Fiks eta biok. Pilatutako haitz eta kareharri meta hatzarekin erakutsi eta esan nion: "Hori da gaur egin duguna". Maletatxok ez zuen egunean zehar egindako lana ikusteko nekerik hartu eta multzoaren aurrean harrituta geratu zen. "Ez", erantzun zion tenienteari, "hori astebeteko lanaren emaitza da". Tenienteak zalantza egin zuen. "Ados", esan zion Maletatxori, "erakutsidazu zuk Mandelak eta Bamek gaur

egin dutena". Maletatxok ez zuen erantzunik osatzen asmatu, eta tenienteak ofizial bati gutxitan egiten ikusi diodan zerbait egin zuen: presoen aurrean bere azpikoari kargu hartu zion. "Gezurretan ari zara!" esan eta salaketa han bertan errefusatu zuen.

Goiz batez, 1967ko hastapenetan, artean Maletatxok bere arduretan jarraitzen zuen, eta harrobira joateko prestatzen ari ginela, presoon artean hitz egitea debekatzen zitzaigun Kellerman maiorraren agindu bat heldu zela esan zigun. Aurrerantzean, ez joan-etorriko bidean soilik, harrobian ere mutu behar genuen: "Hemendik aurrera isiltasuna!" ulukatu zuen.

Erabakia atsekabe handiz hartu genuen. Gai ezberdinen gainean eztabaidatuz hitzekin denbora jatea izaten zen harrobiko lana eramangarri egiteko modu bakarra. Ezin genuen ezer esan lanera bidean, elkarren artean hitz egitea galarazi baitzitzaigun, baina hau itzulikatzeko, bazkaltzeko hutsartean isilpeko plan bat ehundu genuen ANCko buruzagiok gainerako talde politikoekin batera.

Egitasmoa ezkutuka eztabaidatzen ari ginen bitartean Kellerman maiorra jantoki gisara baliatzen genuen etxolan sartu zen. Ezohiko gertakaria zen hura; egundo ez genuen hain maila altuko bisitari bat hartu gure etxola apalean. Eztul urduri batekin, agindua gaizkiulertu bat izan zela eta zalapartarik sortu gabe harrobian hitz egiten jarrai genezakeela jakinarazi zigun. Bazkaltzen jarraitzeko eskatu zigun gero, eta bere orpoetan ardatz eginda etorritako bidetik joan zen. Manua baliogabetu izanak poztu egin gintuen, baina, mesfidantzaz, hau zergatik gertatu ote zen galdetu genion elkarri.

Egunaren amaierara arte ez gintuzten lan gehiegi egitera behartu. Maletatxok, onez onean, ahal zuena egin zuen lagunkoi agertzeko eta, borondate oneko keinu bezala, gure aurkako auzi guztiak bertan behera uztea erabaki zuela jakinarazi zigun.

Arratsalde hartan, nire ziega, sarrera ondoko laugarrena izatetik korridorearen amaieran zegoen hemezortzigarrena izatera pasa zen. Ohi legez, inolako azalpenik eman gabe eta modu zakarrean, nire jabetza urriak ziega berrira aldatu zituzten.

Bisita garrantzitsu bat izango genuela ondorioztatu genuen. Eta agintariek, bisitariak, hau nahinor izanik ere, ikusiko zituen lehen presoen artean ez zuten ni egoterik nahi. Horregatik lekualdatu ninduten. Preso guztiek euren kexuak txandan-txandan azaltzen bazituzten, bisitaria hemezortzigarren ziegara heldu aurretik oihukatuko zuten “Denbora amaitu da!” ezaguna. Batasunaren mesedetan, bakoitzak bere kexuak izan arren, 18. ziegako presoa guztien izenean arituko zela adostu genuen.

Biharamunean, gosaldu ostean, Maletatxok ez ginela harrobira joango iragarri zigun. Kellerman maiorra agertu zen jarraian. Helen Suzman andrea, Parlamentuan eserleku bat eskuratu zuen Progressive Partyko kide bakarra eta National Partyren oposizioko ahots bakarra, une batetik bestera iritsiko zela esan zigun. Laurdena jo baino lehenago, Suzman andereak, kartzeletako goi mandatari Steyn jeneralaren laguntzaz, gure pasabidera ematen zuen atea zeharkatu zuen. Preso bakoitza aurkeztu ahala, jaso beharreko kexurik ba ote zuten galdetzen zien andereak. Guztiek erantzun bera eman zioten: “Kexa asko ditut baina gure eleduna Nelson Mandela jauna da. Pasabidearen amaieran dago”. Steyn jeneralaren harridurarako,

Suzman anderea ez zen gainerako presoak agurtzen geratu. Berehala iritsi zen nire ziega ateraino. Eskua irmotasunez estutu zidan eta adeitasunez aurkeztu zen.

Kartzeletara berehalako sarbidea izan ohi zuten epaile eta magistratuek ez bezala, parlamentuko kideek baimena eskatu behar izaten zuten. Suzman anderea preso politikoen egoeragatik jakin-min apur bat agertu zuen parlamentuko kide bakanetakoa zen, bakarra ez esatearren. Robben irlari buruz istorio asko entzun ohi ziren eta bere begiekin ikertzera etorri zen.

Suzman andereak Robben irlara egiten zuen lehen bisita zenez, ahalik eta erosoen egon zedin saiatu nintzen. Alabaina, bere buruarengan konfidantza handia zuen emakumea zen eta errora joateko eskatu zidan. Steyn jeneralak eta komandante buruak bere ondoan jarraitu arren nik ez nuen hurrengo balizko bisitetarako ezer gorde. Gure eskariez mintzatu nintzaion: janaria denentzat berdina eta hobea izatearen eta arropa egokiaren beharraz; ikasteko erraztasunak ematearen premiaz ere hitz egin nion, egunkarietan isla izan ohi zuten informazioetara iristeko gure eskubideaz, eta beste hainbat kontuz. Zaindarien gogorkeriaz aritu nintzaion, eta Van Rensburgen kasua aipatu nion bereziki. Besaurrean gamma-gurutze bat tatuaturik zuela ohartarazi nion. Abokatu baten moduan erantzun zuen Helenek: “Beno, Mandela jauna”, esan zidan, “noiz tatuatu zuen ez dakigunez ezin dezakegu ondorio gehiegi atera. Tatuaiaren erantzuleak bere gurasoak izan daitezke: ez zaizu iruditzen?”. Ez zela kasua ziurtatu nion.

Oro har, ez nintzen zaindari bakarragatik kexatzen. Baldintza orokorren alde aritzea norbanakoen aurka aritzea baino hobea dela

ikasten da kartzelan. Zaindaria denik eta bihozgogorrena izanik ere, hau kartzelako logikari besterik ez zaio lotzen. Van Rensburg apartekoa zen ordea, irlatik bidaltzea lortzen bagenuen, alde handia nabarituko genuen.

Suzman andereak kaiera txiki batean oharrak jasoz adi-adi entzun ninduen. Gure kexak Justizia ministroari aurkeztuko zizkiola agindu zidan. Nirekin amaitzean gure ziegak ikuskatu zituen eta beste preso batzuekin mintzatu zen une batez. Andere ausart hura gure ziegak aztertzen eta patiotik paseatzen ikustea ikuskizun bitxi eta miragarria izan zen. Ziegetan bere presentziarekin ohoratu gintuen lehen emakumea eta bakarra izan zen.

Van Rensburg aski urduri sumatu nuen Suzman anderearen bisitan. Kathyren arabera, Suzman eta biok hitz egin bitartean, Van Rensburgek ordura arteko jokabideagatik barkamena eskatu zuen. Damuak ez zuen, baina, luze iraun. Biharamunean gure aurka jarritako salaketak berriz aurkeztea erabaki zuela jakinarazi zigun. Denbora gerora, Suzman andereak gure kasua Parlamentuaren aurrean azaldu zuela jakin genuen eta, bisitatik aste gutxira, Maletatxo irlatik beste norabaitera aldatu zuten.

# – 11 –

Ez nuen gure borroka laburra edo erraza izango zenik inoiz pentsatu. Irlan igaro genituen lehen urteak zailak izan ziren guretzat bezala erakundearentzat. Rivoniako epaiketaren ostean mugimenduaren ezkutuko sailaren zatirik handiena desegin zuten. Gure egiturak aurkitu eta errotik erauzi zituzten; atzemanak izan ez zirenek etsaiaren urratsen aurretik iraun beste bizibiderik ez zuten izan. ANCko gidari garrantzitsu guztiak kartzelan edo erbestean zeuden.

Ordura arte diru-bilketaz, harreman diplomatikoez eta ariketa militarren programaz arduratu zen atzerriko ANCren ordezkaritzak erakundearen agintaritza bere osotasunean hartu zuen. Aurrerantzean, talde hau ez zen atzerrian zuzendaritza birsortzeaz bakarrik arduratuko: Hegoafrikan bertan ere, ezkutuka, ANC indarberritu beharko zuen.

Estatua gero eta gero indartsuagoa zen eta, berarekin, polizia boteretsuagoa; euren prozedurak arian-arian bihozgabeagoak ziren, teknikak sofistikatuagoak. South African Defense Force hedapen betean zegoen. Ekonomia egonkortu egin zen eta hautesle zuriak pozik zeuden. Hegoafrikako gobernuak aliatu ahaltsuak zituen Britainia Handian eta Amerikako Estatu Batuetan, eta hauek konforme ziren *statu quo*arekin.

Beste leku batzuetan inperialismoaren aurkako borrokak aurrera jarraitzen zuen. Hirurogeiko hamarkadako erdialde eta amaiera aldera borroka armatu ezberdinak piztu ziren Afrika hegoaldean.

Namibian (orduan Hego-mendebaldeko Afrika deituan), SWAPOk Capriviko zerrendan lehen erasoak burutu zituen. Mozambiken eta Angolan gerrilla-mugimendua handitzen eta hedatzen ari zen. Zimbabwen (Rhodesia) gutxiengo zuriaren gobernuaren aurkako borrokak ez zuen etenik. Ian Smithen gobernu zuriak Hegoafrikako defentsa-indarren babesa zuen, eta ondorioz, ANCk Zimbabweko borroka gure borrokaren luzapentzat ulertu zuen. 1967an ANCk Joshua Nkomok sortutako ZAPUrekin (Zimbabwe African People's Union) aliantza egin zuela jakin genuen.

Urte hartan, Tanzanian eta Zambian trebatutako MKko gudari saldo bat, Hegoafrikarainoko bidea irekitzeko helburuarekin, Zambeze ibaia gurutzatu eta Rhodesian sartu zen. MKko borrokalarien lehen talde hura "Luthuli guda-taldea" izendatu zuten eta borroka armatuaren abangoardia izan zen. Abuztuan Luthuli guda-taldea ZAPUko tropen laguntzaz hegoalderako bidea egiten ari zela, Rhodesiako armadarekin topo egin eta ondorengo astetan aurrez aurreko basatietan gurutzatu zen; alde bietan kalte nabarmenak utzi zituen aurrez aurreko honek. Rhodesiako indarrek biderkatu egiten zituzten MKkoak, eta garaile irten ziren. Kide batzuk preso hartu zituzten eta besteak Bostwana bihurtuz independizatu zen Bechuanalandiaraino erretiratu ziren. 1968ko hasieran ANCko beste guda-talde bat Rhodesian barneratu zen; honek armadaren aurka ez ezik, bertara laguntza gisara igorritako Hegoafrikako polizien aurka jo zuen.

Hilabete batzuk gerora izan genuen honen guztiaren berri, zurrumurruen bidez; berri zehatzagoak borrokaldiotan parte hartu zuten kide batzuk irlan gurekin espetxeratu zituztenean eman zizkiguten. Irabazi gabe ere, MKko kideek etsaiari aurre egin izana bozkarioz ospatu genuen. Borrokan mugarri zen hura. "Justice"

Panzak, hezurrak irlan gurekin epeldu zituen Luthuli guda-taldeko komandanteetako batek, guda-taldeak jaso zuen prestakuntza militar eta politikoaz eta guda zelaian erakutsitako adoreaz hitz egin zigun. Iraganean MKko komandante buru izan nintzenez, gure gudariez izugarri harro sentitu nintzen.

Atzerrian MKren batailen berri izan aurretik, 1967ko uztailean, Luthuli agintaria bere etxean hil zela jakin genuen. Testuinguru berezian jazo zen guztia: bere basetxeko pasealekutik hurbil tren batek harrapatu zuen. Bere alargunari gutun bat idazteko baimena onartu zidaten. Luthuliren heriotzak hutsune handia utzi zuen erakundean. Buruzagiari Nobel Saria eman zioten, eta hargatik, pertsona ohoragarria zen, nazioartean erreferentzia, beltzek bezala zuriek errespetatua. Arrazoiongatik figura ordezkaezina zen. Alabaina, erakundeak Oliver Tambon aurkitu zuen agintari postua betetzeko pertsona gaitua. Honek, sasoi hartan, ANCren jarduneko zuzendari orokorra izateko ardura zuen. Luthuliren antzera, hizlari fina zen, baina ez zuen inoiz bere burua nabarmentzea bilatzen. Bere buruarengan konfiantza izan arren, apala zen izatez. Luthuli agintariaren manamendua haragitzen zuen, halaber: “Arriskuaren aurrean ausardia biderkatu”.

B moduluan ekitaldi txiki bat antolatu genuen agintari zenduaren omenez. Nahi zuen orok hitza hartzeko aukera eskaini genuen. Omenaldi txiki eta beneragarria izan zen, desadostasun bakarrarekin. Unity Movementeko (UM) Neville Alexander zutitu zenean, argi geratu zen ez zuela agintaria goratzeko asmorik; haren izen ona lurperatzea zuen helburu. Hildakoagatik errespetu txikiena adierazi gabe, Bakearen Nobel saria onartzeagatik zurien lekaio izatea egotzi zion Luthuliri.

Nevilleren hitzaldia iraingarria izateaz gainera, irlan sortzen ahalegintzen ari ginen elkarlanareko izpirituaren kontrakoa zen. Nire etorreraren unetik bertatik lehentasunezko helburutzat genuen borrokan gure aurkari zirenekin mota bateko edo besteko akordioren bat bilatzea. Robbeneko espetxealdia PAC eta ANC banantzen zituzten ezberdintasunak –batzutan garratzak– doitzeko aukera moduan ikusten nuen. Irlan antolakunde biak elkarlanean aritzea lortzen bagenuen, gure herriaren askatasunaren aldeko borrokan batasuna lortzeko balioko zukeen aurrekari bat sor genezakeen.

Dena den, hasieratik bertatik, PACekiko gure harremanak elkarlanerakoak ez eta konpetentziazkoak izan ziren. Iritsi ginenerako PACeko kideak irlan barrututa zituzten eta, eurek, gu ere bertan barrutu izana, euren lurraldearen inbasio gisara ulertu zuten. Gure gizonetako batzuk kontatu zigutenez, gu ez urkatu izana pena izan zela esan zuten PACeko aspaldikoenek. 1962an, irlako nire lehen egonaldian, PACek ANCk baino preso gehiago zituen. 1967an, baina, egoera oso ezberdina zen. Guztiarekin, honek PAC bere jarreran lubakitzeko bakarrik balio izan zuen. Komunismoaren eta indioen aurka modu lotsagabean agertzen ziren. Lehen urtetan PACeko zuzendaritza batzordekoa izan zen Zeph Mothopengekin hitz egiten saiatu ginen. Zephek PAC ANC baino erakunde erradikalagoa zela eta kartzelan bigarrenak honen irizpideak jarraitu beharko lituzkeela esaten zigun. Kartzelako agintariekin negoziazio oro traizioa zela sostengatzen zuten; baina horrek ez zien negoziazio haietatik eratorritako aukerei uko egitea suposatu. 1967an Selby Ngendanerekin saiatu nintzen. Kartzelatik kanpora, Ngendane Askatasunaren Agiriaren aurka nabarmendu zen; baina barruan, gure modulura lekualdatu zutenetik batez ere, bere jarrera gozatu egin zuen. Azkenerako, arrunten sailera, erakunde bakoitzak bere aldetik, batasunaren ideia

defendatuz gutun bana idatzi genuen. ANCk harreman onak zituen, gerora PACeko zuzendari izango zen Clarence Makweturekin. Makwetu, ANCren Gazte Ligakoa izana zen eta, gure sailean itxi zuten preso zentzuduna zen. Bi erakundeon elkarlanerako bidean, bilera emankor asko egin genituen Makweturekin, baina honen askapenaren ondotik, Robben irlan ordezkaritza John Pokelak hartu zuen, eta elkarrizketak eten egin ziren.

PACen zalantzek ondorio barregarriak utzi zituzten. Une batean Pretoriako agindu bat iritsi zen. Aginduaren arabera, harrobiko lanaldian gainerako preso guztiengandik bakartuta egon behar nuen. Gainerakoengandik apartera egin behar nuen lan eta otorduetan ere bakarrik egon behar nuen. Hori bermatzeko neure zaindari propioak izango nituen. Xedapen berri honek PACen barnean halako bulkada bat suposatu zuen. Egun batzuk geroago, PACek erabaki zuen beren buruzagi Zeph Motopeng ere bakartuta egon behar zuela, eta ni egoera hartan egon nintzen denbora guztian, inorekin kontatu gabe, behartu egin zuten beste presoengandik aldenduta lan egin eta bazkaltzera .

PACek uko egiten zion alderdiren batean afiliatuta ez zeuden partaidez osatutako bilkuretan parte hartzeari. Gure arazoez eztabaidatzeko bilkurak deitzen genituenean edo bertan egindako ekarpenak aztertzeko batzartzen ginenean, alderdi honek boikotatu egiten zituen bilerok. Asko haserretzen ninduen horrek. PACek, hauteman genuenagatik, ez zuen kanpoan bere erakundean eman ziren aldaketen ezagupenik. Irlan espetxeratutako PACeko kideek uko egiten zioten gure baieztapenak sinesteari. Adibidez, ez zuten atzerriko euren ordezkaritzak zuriak eta indiarrak taldearen baitan onartu zituena sinesten. Hura heresia bat zen eurentzat. Guk, gure

aldetik, Patrick Duncan ekintzaile zuria PACen exekutibako kide bihurtu zenaren albistea egunkari batean irakurri genuen. PACeko afiliatuek ukatu egin zuten informazio hau, ANCren propaganda hutsa zela iritzita.

ANCk bere barne erakunde propioa eratu zuen irlan. Goi Aginte moduan ezagutua, ofizialki Organo Gorena deitu genuen, eta Robben irlan preso gintuzten ANCko zuzendaritza batzorde nazionaleko buruzagi antzinakoenek osatu genuen: Walter Sisuluk, Govan Mbekik, Raymond Mhlabak eta lauok. Nirea zen Organo Goreneko zuzendari izatearen ardura.

Sortze unetik bertatik erabaki genuenez, Organo Gorenak ez zuen ANCren kanpo politikan eragingo. Herrialdearen egoera zein zen neurtzeko bitarteko nahikorik ez genuenez ondorio batera heldu ginen: behar besteko informaziorik ez geneukan auzien gaineko proposamenak egitea ez zen zuzena ez zuhurra izango. Hori horrela, bestelako gaien inguruko erabakiak hartzen genituen; hala nola, presoen kexen, greben, postaren, elikaduraren eta kartzela-bizitzaren eguneroko kezka guztien gainean. Ahal genuen guztietan kideen bilkura orokorra deitu ohi genuen, erakundeak bere dinamika mantendu zezan behar-beharrezkoa zela uste baikenuen. Baina bilkurok oso arriskutsuak, eta horregatik ezohikoak zirenez, Goi Aginteak hartzen zituen gero gainerako kideei helarazten zitzaizkien erabakiak. Organo Gorenak hiru kideko zelula-sistema bat baliatzen zuen horretarako.

Irlan eman nituen lehen urteetan, Organo Gorena gure saileko preso politiko guztion batzar ordezkari gisara aritu zen. 1967an presoentzat tratu hobea eskatuz agiri bat bideratu genion zuzendaritzari, eta

PACeko, Unity Movementeko eta Eddie Danielsek ordezkatutako Liberal Partyko ia kide guztiek sinatu zuten. Antolamolde hau egokia zen, Neville Alexanderrek Organo Gorena demokratikoa eta ordezkatzailea ez zela eta, erakundetzeko beste modu bat aurkitu behar zela adierazi zuen arte.

Nevillen burubideak, azkenerako, alderdi politiko guztietako ordezkariak biltzen zituen presoen komite baten sorrera ekarri zuen. Gainerako alderdiek ANC komitea kontrolatzen saiatuko zenaren susmoa zutenez, honek aholkuak helarazteko ardura izan zuen soilik eta, beraz, bere erabakiak ez ziren lotesletzat hartzen. Baldintza hauetan ere zaila izan zen presoen arazoen inguruko akordio bat lortzeko oinarri komun bat adostea. Guk Fikile Bam, Yu Txi Txan Klubeko kidea proposatu genuen bilkuren arduradun gisa. Gerora, komiteko buruak txandaka ordeztuko ziren. Azken batean, komitea Ulundi bezala ezagutu zen eta preso politiko guztien diziplina-komitea izan zen.

Taldea osatu zenean, eta komiteko lau kideak xhosak zirenez, jatorri etnikoen inguruko eztabaida piztu zen. Aurrez adostutako zerbait baino, kasualitate bat zen izan zen antolaketa hura. ANCko lau kiderik antzinakoenak, guztiak exekutiba nazional ohiko partaideak, xhosak ziren. Xhosa ez izatea beste arrazoirik gabe, Organo Gorenerako ANCko kide gazteago bat aukeratzeak ez zirudien aterabide burutsua. Hala eta guztiz ere, Goi Agintaritzan xhosa etniak zuen ordezkaritza nabarmenak kezkatu egiten ninduen, interpretazio oker bat indartu baitzezakeen: xhosa erakunde bat ginela azken batean.

Kritika hau, interpretazio maltzur batean eta ANCren historiaren ezjakintasunean oinarritzen zela pentsatu izan dut beti. ANCn

presidente zuluak, mosothoak, pediak eta tswanak egon zirela gogoratuz eta talde exekutiboa talde tribalen nahastura bat izan zela argituz erantzun nien kasurako egin zituzten salaketei. Behinola, arratsalde eguzkitsu batean patioan nengoela, teilatuan beharrean zebiltzan arrunten saileko preso batzuk zeudela oroitzen dut. Oihuka zuzendu zitzaizkidan: “*Mdala!* (Zaharra!) Zergatik mintzo zara soilik xhosekin?”. Salaketa hark ezustean hartu ninduen. Gorantz begiratu eta esan nien: “Nola leporatu diezadakezue bereizkeriarik? Herri bat eta bakarra gara”. Erantzunak gogobeteta utzi zituen, baina oharpenak nire gogoeten txinparta piztu zuen. Ohar hartatik aurrera, preso arrunten sailean espetxeraturik zeuden gatibuen aurretik igarotzen nintzen aldiro, Kathyrekin edo Eddie Danielseki, edo xhosa ez zen beste edonorekin hitz egiteko aukera egiten nuen.

Aipu honen harira, Organo Gorenak, txandakatuz joango zen bosgarren kide bat izan behar zuela erabaki genuen. Hau ez zen xhosa izaten gehienetan. Adibidez, Kathy bosgarren kidea izan zen bost urte baino gehiagoz. Laloo Chibak ere hartu zuen lekukoa denbora batez. Azkenean, tribalismo salaketa apalduz joan zen, desagertu arte.

Nik ez nuen Organo Gorena kontrolatzeko ahalmenik. Gehiago: sutsuen defendatu nituen proposamenetako batzuk errefusatu egin zituen talde honek. Gauzek horrela behar zuten, baina zapuztuta sentitzen nintzen batzuetan. Kartzela-agintariekiko gure harremanei dagokionez, bi auzitan ez nituen inoiz nire kideak konbentzitu. Ofizial baten aurrean presoek zutitu egin behar zutela zioen kartzela araudiak. Ni, gure preso politiko *status*a aitortzen ez zuten bitartean aurkaria aitortu behar izatea umiliagarria zela iritzita, eserita geratzearen aldekoa nintzen. Nire kideek hura arazo txikia zela

eta arau huraxe urratzeak ekarriko lituzketen ondorio negatiboek edozein balizko onura gaindituko lukeela uste zuten.

Bigarren auzia antzeko arrazoiengatik baztertu zuen Organo Gorenak. Kartzelariek gure bataio-izenez edo abizenez deitzen gintuzten. Nire aburuz, bi moduak iraingarriak ziren eta errespetuzko "jaun" trataera eman ziezaguten tinko eutsi behar genuela pentsatzen nuen. Kontu honekin tematuta jarraitu nuen hainbat urtez, batere arrakastarik gabe. Nire burkideentzat txantxarako gako ere bilakatu zen auzi hau, Mandela "jauna" deitzen baitzidaten.

## – 12 –

Kartzelan denbora harrizkoa zen; ez halaber kanpoan jarraitzen zutenentzat. Honen kontzientzia, 1968ko udaberrian, nire amaren bisita jaso nuenean izan nuen. Rivoniako epaiketatik elkar ikusi gabeak ginen. Jendearengan aldaketak mailaz maila gertatu ohi dira eta norbera bere familiaz inguratuta bizi denean nekez antzemanten dira ezberdintasun hauek. Familia urtetan ikusten ez denean ordea, harrigarria izaten da eraldaketa. Bat batean, oso zaharra iduri zuen gure amak.

Transkeitik etorri zen, Makgatho eta Makaziw nire seme-alabek eta nire arreba Mabelek lagunduta. Lau izaki, eta ni ikusteko distantzia handia egin zutenez, kartzelako agintariek bisita ordu erditik berrogeita bost minutura luzatu zuten.

Semea eta alaba ere epaiketa aurretik ikusi gabeak nituen, eta nire ausentzian hazi eta hezi egin zirela ematen zuen. Miraz eta harro begiratu nien. Nabarmen hazi ziren arren, kartzelan sartu nindutenean ziren haurrei bezala hitz egin nienaren sentipena dut. Aldatu egin ziren, ni ez.

Gure amak pisu asko galdu zuen, eta horrek kezkatu egin ninduen. Aurpegiera zurbila zuen. Bere horretan zegoela zirudien bakarra, nire arreba Mabel zen. Haiek guztiak ikustea eta familiari buruz hitz egitea benetako plazera izan zen. Plazerak plazer, gure amaren osasunaren gaineko zalantzek jota utzi ninduten.

Makgatho eta Maki biak ala biak ikasketekin jarraitzera animatu nituen. Mabelek eta biok Transkeiko gure senitartekoez hitz egin

genuen. Denbora ziztuan joan zen eta bisita gehienen benetako plazera hauek gogoratzean etorri ohi zen. Bisita hartatik nire amaren osasunarekiko kezka atera nuen. Berriz ikusteko aukerarik ez izateak beldurtu ninduen.

Aste gutxira, harrobitik itzultzean, telegrama bat entregatu asmoz bulegora deitu ninduten. Makgathorena zen, eta mezuan, ama bihotzekoak jota hil zela esaten zidan. Berehalakoan kartzelaren ardurapean zegoen ofizialari eskabide bat bideratu nion, gure amaren ehorzketara joateko baimena eskatuz. Ukatu egin zidan. “Mandela, badakit hitzeko gizona zarela eta ez zarena ihes egiten saiatuko”, esan zidan. “Baina ez dut zure jendearenganako konfiantzarik, eta bahitu egin zaitzakete”. Nire minari gure ama lurperatu ezina, seme bakar gisara nire erantzukizuna zena, gehitu zitzaion.

Hurrengo hilabetetan zehar denbora asko pasa nuen bere pentsura. Bere bizitza ez zen erraza izan. Jardunean abokatu izan nintzen bitartean bera zaintzeko moduan nintzen, baina kartzelatu ostean zainketa ardurarekin jarraitzea ezinezkoa zen. Ez nintzen amaz behar beste arduratu.

Amaren heriotzaren ondotik, norberak atzera buelta hasi ohi du, ordura arteko bere bizitza balorean jarriz. Gainditu zituen zailtasunez eta jasan zuen pobreziaz oroitzen nintzen bitartean, bide egokia hautatu ote nuen galdegiten nion, ostera ere, neure buruari. Galdera korapilatsu hark denbora luzez iraun zuen nire baitan: zuzen egin ote nuen nire herria familiaren kaltetan lehenestean? Gure amak ez zuen, denbora luzean, nire konpromezua ulertu. Nire familiak nahi eta desiratu gabe hartu nuen konpromisoa, eta nire erabakiak eragina izan zuen eurengan.

Beste behin ere erantzun berbera emanez itzuli nintzen. Hegoafrikan zaila da herriaren behar gorrienei izkin egitea, horretarako familia albora utzi behar bada ere. Nik erabaki bat hartu nuen, eta azkenerako, gure amak ere babestu egin zuen erabaki hori. Hori hala izanik ere, horrek ez zuen bere bizitza arinagoa egin ezin izanagatik sentitzen nuen tristura murrizten; ezta bere azken hobira eraman ezin izateagatik nire bihozmina gutxitzen ere.

1969ko maiatzaren 12ko lehen ordutan, segurtasun indarrek Winnie esnarazi zuten gure Orlandoko etxean. Lege antiterroristak aitortzen zien ahalmena baliatuz kargurik gabe atxilotu zuten. Lege honek, gobernuari epaiketarik gabe jendea atxilo hartu eta preso sartzeko aurrekaririk gabeko boterea ematen zion. Beranduago jakingo nuenez, erasoaldi hura nazio mailako operazio baten parte zen eta Winnierekin dozenaka pertsona atxilotu zituzten. Poliziak Winnie, Zeni eta Zindzi bere gonari lotuta zituela atera zuen etxetik. Isolamenduan itxi zuten Pretorian, fidantzapeko askatasuna eta bisitak jasotzeko aukera oro ukatuz. Hurrengo aste eta hilabeteetan errukirik gabe galdekatu zuten.

Winnie formalki akusatu zutenean –sei hilabete geroago–, *apartheid*aren aurkako kurrikulum luzea zuen Joel Carlsonek defenda zezala gomendatzea lortu nuen. Winnie, beste hogeita bi pertsonarekin batera, ANC berpizten saiatu izanagatik salatu zuten –Komunismoaren Desagerpenerako legediapean–. George Bizos eta Arthur Chaskalson, Rivoniako epaiketan esku hartu zuen taldeko kideak gehitu ziren defentsara beranduago. Urrian, atxilotu zutenetik hamazazpi hilabete bete zirenean, Winnie aske utzi zuten. Estatuak azalpenik gabe bertan behera utzi zuen bere aurkako salaketa. Bi astera debeku agindu berri bat jaso eta etxean gatibu izatera behartu zuten. Ni bisitatzeko eskatu berri zuen baimena ia berehala ukatu zioten.

Kartzelan Winnie ere espetxeratua zegoela jakiteak ezerk baino gehiago apaltzen ninduen. Egoerari adorez aurre egiten ahalegindu nintzen, baina oso arduratua nengoen nire sakonenean. Ezerk ez ninduen Winni isolamenduan itxi zutena beste mintzen. Besteri hainbestetan gomendatu arren, ez nintzen nire esku ez zeuden kontuez ez kezkatzeko gai. Begiak bildu ezinik gau asko joan ziren. Zer ari ziren egiten agintariak nire emaztearekin? Nola ari ote zen Winnie hau guztia jasaten? Nor ari zen gure alabak zaintzen? Nork ordainduko zituen fakturak? Halako galderek itauntzea eta erantzuteko modurik ez izatea benetako tortura bat zen.

Aucamp jeneralak Winnieri idazteko baimena eman zidan eta honen gutun bat edo bi jaso nituen bueltan. Ohikoan, epaiketaren zain dauden presoek ez dute gutunik idazteko baimenik izaten, baina Aucampek, nirekiko abegi keinu gisa, hauek jasotzeko aukera eman zidan. Esker oneko sentitzen nintzen, baina ondo nekien jakin baimen hura ez zela altruismoaren ondorio: gure gutunak irakurri zituzten Winnieren aurkako kasua babestuko zukeen edozein informazio bilatu nahian.

Garai hartan beste galera lazgarri bat ere izan nuen. 1969ko uztaileko goiz hotz batez, Winnieren kartzelaratzearen berria jakin eta hiru hilabetera, beste telegrama bat emateko Robben irlako bulego nagusira deitu ninduten. Seme gazteenarena zen, Makgathorena, eta esaldi bakar bateko mezua zen. Bere anaia handia, nire lehen semea, Madiba Thembekile, Thembi deitzen genuena, Transkein moto istripuan hil zela jakinarazten zidan. Thembik hogeita bost urte zituen eta bi haurren aita zen.

Zer esan halako tragedia baten aurrean? Nire emaztearen egoeragatik erabat gainditua sentitzen nintzen, gure amaren galera oraindik

gogoan nuen eta orain halako berri bati egin behar nion aurre... Ez dut hitzik nire baitan sentitzen nituen atsekabe beltza eta galera sentimendua adierazteko. Horrek nire bihotzean inoiz bete ahal ezin izan dudan hutsunea utzi zuen.

Ziegara itzuli eta ohean etzan nintzen. Ez dakit zenbat denbora egin nuen sabaira begira. Ez nintzen afaritarako ere irten. Kideetako zenbait nire egoeragatik kezkatuta egon arren, ez nuen hitzik esan. Walter nire ondoan belaunikatu zen. Telegrama luzatu nion. Ezer esan gabe ni eskutik oratzera mugatu zen. Ez dakit zenbat denbora egin zuen nirekin. Zer esan behar du pertsona batek halako egoera batean?

Semearen hiletara joan ahal izateko baimena eskatu nien kartzela-agintariei. Aitaren erantzukizuna semearen arimak bakean atseden hartzen duela bermatzea da. Ni zaintzeko segurtasunezko segizio bat bidal zezaketela esan nien. Itzuliko nintzela hitz eman nien. Baimena ukatu zidaten. Thembiren amari, Evelyni, gutun bat idaztea besterik ez zidaten baimendu: hau kontsolatzeko eta bere oinazea nirea ere bazela adierazteko ahal izan nuena egin nuen.

Memoriak arratsalde hartaraino egin zuen atzera: artean Thembi haur bat zen eta Cyrildeneko etxe batera bisitan etorri zitzaidan. Etxe hura ANCrentzat isilpeko lana egiteko baliatzen nuen nik. Klandestinitateko lan politikoaren eta lege-auzien artean denbora asko neraman bera ikusi gabe. Belaunetaraino heltzen zitzaion nire jaka zahar bat janzten harrapatu nuen. Niri nirearekin gertatu bezala, bere aitaren arropa janztean bizkortuta eta harro sentitzen zela ematen zuen. Agurtzeko unean, bat-batean hazi balitz bezala, zutunik, esan zidan: “Nik zainduko dut familia zu kanpoan zauden bitartean”.

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar** Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
MIKEL ANTZA. *2011.*

**Espetxetik at**
BORXA URBERUAGA. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**$Z^2$**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

## INVICTUS

Nelson Mandelak,
kartzelako une zailetan errezitatzen zuen olerkia

**Gau beltz hondorik gabeko amildegi**
**Honetatik harago**
**Han goian inor balego,**
**Hari esker, naizelako garaiezin.**

**Halabeharraren atzaparretan**
**Ez intziri ez negar**
**Burua dut odoletan**
**Zut zorigaitzaren kolpeen pean.**

**Kolera eta lantuzko eremu,**
**Izuen Gordeleku,**
**Zigor-urteen mehatxu,**
**Ez naiz beldurtuko, ez nauzu beldur.**

**Ez zait ardura ataka nola den estu,**
**Ez zenbat epaia astun,**
**Etorkizuna nire esku,**
**Nire arimaren lemazain, neu.**

***William Ernest Henley (1849-1903)***



ataramiñe
www.literaturakoadernoak.org